# HUMANISMOAREN IDEIA GERRAOSTEAN:

# *GERNIKA* ALDIZKARIAREN INGURUAN (1945-53)

## Humanism after the Spanish Civil War:

## *Gernika* (1945-53), a Humanities and Social Sciences basque magazine

**EGILEA: AITOR P. ORTIZ DE PINEDO ROJAS**

aortizpinedo@gmail.com

**BUKAERA DATA: 2011-II-20**

***LABURPENA: Espainiako Gerra Zibilaren eta II. Mundu Gerrarren ostean Gerra Hotza heldu zen. Testuinguru larri horretan humanismoan ikusi zuten hainbatek zibilizazio-krisiari irtenbidea topatzeko bidea.***

**Gernika** ***aldizkariak (1945-53) bere burua humanistatzat zeukan. Bertako idazleek gai horren inguruan zer adierazi zuten jasotzen saiatu gara, euskarazko zein erdarazko artikuluetan agertzen diren iritziak sailkatuz.***

***GILTZA-HITZAK: saiakera, euskal idazleak, humanismoa, gerraostea, pertsonalismoa, euskalzaletasuna, eskola, erlijioa***

# AURKIBIDEA

## 1. LABURPENA: HELBURU ETA EMAITZAK[a]

### Lan honen helburua

Arakatu nahi izan dugu Espainiako Gerra Zibilaren (1936-39) ondotik euskal aldizkariren batean garai hartako humanismoaren kontzeptua. *Gernika* (1944-53) hautatzeko arrazoia da agerkari horrek bokazio humanista esplizitua agertzea, izan ere, *revue humaniste de culture populaire* azpititulua aukeratu zuen. Orduko urte haiek, *susmoaren filosofia* deiturikoa Euskal Herrian zabaldu aurrekotzat dauzkagu, eta ideia haren gaurkotasuna haztatu nahi izan dugu birgogoratze ariketa honen bitartez.

Eta *Jakin* aldizkaria ere erabili dugu bigarren mailako iturri gisa, batez ere *Jakin* aldizkariak gerraoste hurbileko erretrospektibak egin izan dituelako. Kontuan izan behar da *Gernika sekularizazioa* izeneko debaklea Euskal Herrira heldu aurrekoa dugula. Nahi izan dugu atera oraindik tradizioa lehiatuki kolokan jartzen ez duen Euskal Herri horren instantanea bat; horretarako zenbait alderdiren deskribapenak eman ditugu.

*Gernika* aldizkariko euskarazko testu gehienak edo denak sarean daude Ibinagabeitia Proiektuaren webgunean denon irakurgarri. Erdarazko batzuk ere bai, baina aldizkariaren edizio faksimile ia osoa Ediciones Vascasek egin zuen 1979an, nahiz eta 1945eko zenbakia ez zuen argitaletxeak txertatu bildumako hiru liburukien barnean.

Lan honetan *Gernika*n jorratu ziren zenbait gai esanguratsuren berri emango dugu.

Esan behar da aldizkarian gaztelaniazko, frantsesezko eta euskarazko kolaborazioak daudela, eta hiru hizkuntzetan idatzitakoak izan ditugula kontuan.

Lan honetan argibide oharrak orrialde bakoitzaren oinean emango ditugu, eta bibliografia oharrak amaieran.

### Emaitzak

Ikusi ahal izan dugu aldizkariaren lerro ideologikoa humanismo kristauak markatzen duela, bereziki *pertsonalismoa* delakoaren bidetik doana. Badira ahots diferenteak kronologikoki pertsonalismoa baino lehenagokoak: adibidez ahots euskaldunetan molde zaharreko bertsolari herrikoiak, tradizionaletan tradizionalak; eta badira beste batzuk harago doazenak, Asiako erlijioen bila abiatuak (F. Krutwig (Getxo, 1921-78) edo demokrazia *gainditu* nahi dutenak (J. Mirande (Paris, 1925-72)). Erredaktoreek inspirazio demokratikoa dute, oro har, eta euskaltzalea.

## 2. SARRERA OROKORRA

Irakur dezagun aldizkariaren azken egunetan Pelay Orozcok esan zuena berataz J. R. Zabalaren lumatik:

> *Alta, Gernikaren desagertzearekin, erbesteko publikazio interesgarrienetariko bat galdu zen, dudarik gabe, «uno de los más grandes hitos vasquistas y universalistas», Miguel Pelay Orozcoren hitzetan. Aldizkari honek*

---

a Yolandari bezainbat eskerrak eman beharrean nago EHUko irakasleei: Jon Kortazarri lanaren jarraipena egiteagatik, eta Gasteizeko Hizkuntzalaritza eta Euskal Ikasketak Saileko doktorego programakoei euren ohar osasungarriengatik. Akatsak, hala ere, nireak dira.

*aniztasuna eta unibertsaltasuna proiektu batean batzea lortu zituela azpimarratu behar dugu, gainerako aldizkariek azaldu ere egin ez zituzten helburuak. Horren arabera, esan ahal dugu esperientzia hori ez dela oraindik behar den adina ikertu eta estudiatu[1].*

### *3. Gernika* (1945-53)

### 3. 1. Sarrera

Aldizkari honek, hitzez hitz, *humanismo herrikoia*ren defendatzailetzat du bere burua, hala aldarrikatzen baitute erredakziokoek agerkariaren azpi-izenburuen eta oharren bitartez. Bi kontzeptu horiek zehaztu nahian ibili gara. Nolakoa zen ideia honen bitartez gauzatzen zen gizartearen ikuspegia? Nolako ondorio pedagogikoak zituen ideia honek zer bultzatzen zuen ikusita, besteak beste? Nolako trataera ematen zitzaion euskaltzaletasunari, erlijioari eta beste zenbait arlori (garapen ekonomikoari, folkloreari, politikari...)? Eta duen gaurkotasuna?

Ateratako ondorioen artean, humanismo katoliko samar baten aurrean gaudelakoa dugu, Elizaren irakaspenetatik ez oso urrun. Tradizio baten defendatzailea da, eta euskal pertsonaia historiko aipagarrien artean galbahetze bat egiten du. Gorazarre egiten die bertoko Berpizkundeko humanistei eta Argien Mendeko ilustratuei ez gutxitan.

Bestetik, euskal munduaren inarrosaldi bat agertzen zaigu, bai edukien artean, bai hizkuntzaren formari dagokionez. Lehenik, gai batzuk lehenengoz agertzen zaizkigu euskaraz eta kristautasunaren barrutitik kanpo (sexuaren aldetik, erlijioaren aldetik...), eta, bigarrenik, lapurtera klasikoaren proposamena mamitzen da. Hizkuntza homologatu baten beharra sentitzen dute, berrikuntzetara zabalik, baina garbizalekeriaren zurruntasunean erori gabe.

### 3. 2. Testuingurua

*Ingurune historikoa: Europa eta mundua*

Garai hartako giroan hobeto koka dezagun aldizkaria hona hemen orduko zenbait gertakari:

– Iparraldean 1945ean argitaratu zuten lehen zenbaki soltea Espainiako Gerra Zibiletik erbesteratu euskotarrek, *Gernika* izenburua jarrita Gerra Zibilaren testuinguruan Kondor Legioak buruturiko bonbardaketaren oroitzapenetan (1937). Lehen zenbakiari hiru urteko etena jarraitu zitzaion, 1948an Donibane Lohitzunen zenbaki berriek argia ikusi zuten arte. 1953an itxiko zuten betirako aldizkaria.

–II. Mundu Gerra: 1939-1945. Ikus dezakegunez gerraoste bikoitza zen ordukoa aldizkariko parte-hartzaileentzat, eta, ildo horretatik, berradiskidetze beharrizana inoiz baino nabarmenago begitantzen zitzaien. Gerra Hotzaren garaian mehatxu nuklearrak gizartea beldurtzen zuen; hortik humanismoaren orduko eta ezinbesteko praktikotasun historikoa.

- 1940an literaturaren arloan, A. Camus-ek *Arrotza* argitaratu zuen.
- 1943an J. P. Sartre-k, *L´être et le néant*
- 1948an Giza-Eskubideen Aldarrikapen Unibertsala
- 1948an Israeleko estatua jaio zen.
- 1949an Simone de Beauvoir-ek *Le deuxième sexe*
- 1949an Mao-Tse-Tungek Txinako Errepublika Herrikoia sortu zuen.
- 1949an E. Mounier-ek *Le personnalisme* argitaratu zuen.
- 1949an teknologia arloan: erreakzioko lehen bidaiaridun hegazkina.
- 1950an Koreako Gerra.
- 1950ean Pio XIIak, *Humani generis* entziklika
- 1952an S. Beckett-ek, *Godoten zain*
- 1953an J. Stalin hil zen.
- 1953an SESBk (Sobietar Errepublika Sozialisten Batasunak) H bonba ekoiztu zuen.
- 1954an AEBek H bonba
- 1955ean H. Marcuse-k *Erosa eta zibilizazioa* argitaratu zuen.

*Ingurune historikoa: Espainia*

Kontuan izan behar da aldizkari honetarako idazlanak, sarri, Hegoaldetik erbesteratuen eskutik zetozela, bai Europatik, bai Ameriketatik; baziren, hala ere, Iparraldeko idazleak: E. Salaberri, P. Lafitte, J. Mirande...

Izan ere, garaipen frankista 1939ko apirilaren 1ekoa da ofizialki. Gerraoste honetan, lurraldea arrasatuta zegoen, eta kalteak handiak ziren, hala galdutako gizakiei nola ondasunei zegokienez. Biztanleria aktiboa, nekazaritzara lerratu zen, atzerantz eginez. Bestalde, errepresioa latza zen, eta, hortaz, berradiskidetzea ezin erraza izan.

1939 eta 1975 artean Franco jeneralak agintekeriazko erregimen paternalista finkatu zuen, Eliza, Armada eta Falangea bezalako erakundeek sostengatzen zutena. Zenbaiten aburuz, nazioartea antifaszistagoa bilakatu ahala, Espainiako gerra irabazi zutenen jokabidea malgutu egin zen, hein batean. Horren erakusgarri izango ziren zenbait lege frankista: *Fuero de los Españoles* (1945) izenekoa, *Ley de sucesión* izenekoa (1947), diktadorearen ondorengoa monarka bat izango zela ezarri zuena, eta abar.

*Gernika* aldizkarian, behin eta berriz aldarrikatzen da erregimen foralaren demokratikotasun ideala, gertakari garaikideek erakusten zuten tornu diktatorialaren aurrez aurre, zalantzarik gabe. Kontuan izan Hitlerren eta Mussoliniren garaiak zirela. Testuinguru honetan ulertu behar da Gernikako Arbola demokraziaren sinbolotzat jotzea ere, *Gernika* aldizkarian behin eta berriz irakurri daitekeena.

3.2.1. Literatura arloko testuingurua

*Espainian:*

> *La Guerra Civil española provocó la ruptura y aislamiento de los poetas españoles con el resto de la intelectualidad europea. Los poetas exiliados continuaron su obra fuera de España y otros se entregaron a un exilio interior que les permitía expresar sus sentimientos con una cierta libertad y sin temor a represalias por parte del régimen. Algunos poetas, que ya habían iniciado su carrera antes de la guerra, como Leopoldo Panero, Luis Rosales y Dionisio Ridruejo, optan por una recuperación de la tradición renacentista. Otros poetas, por lo general más jóvenes, buscan temas más humanos y llegan, en algunos casos, a formar una poesía de protesta social. Es el caso de Gabriel Celaya, Blas de Otero, Carlos Bousoño o José María Valverde. La generación del 36 se caracteriza por la expresión de su fe religiosa y por su intimismo. Fueron poetas disconformes con la situación política y social creada tras la Guerra Civil española, pero que en vez de enfrentarse con el régimen establecido optaron por una poesía personal y sincera sobre la naturaleza, la fe religiosa y otros temas íntimos.*
>
> *En la década de 1950 aparece una serie de poetas que dan una gran importancia al sentido social de la poesía y a los valores de la vida cotidiana. Con estos puntos en común surge, alrededor de Carlos Barral, el llamado 'grupo de Barcelona'. Este grupo aglomerará a los poetas más ilustres de estos años, entre los que se incluyen Agustín Goytisolo, Jaime Gil de Biedma, Ángel González, José Manuel Caballero Bonald, José Ángel Valente, Claudio Rodríguez o Francisco Brines. Un gran poeta, aunque no vinculado al 'grupo de Barcelona' es José Hierro, cuyos versos representan el antiesteticismo, el compromiso social y la preocupación por España que caracterizan a otros poetas del momento* [2].

*Galiziako aldizkari poetikoak:*

Lurralde horretako aldizkari poetikoei bagagozkie, 1940 inguruan ez zegoen ia ezer antolaturik, soilik bakarka ari ziren zenbait idazle. Gaztelania ezarri zuten, egitez. Galego-hiztunak hizkuntzaz lotsatuta zeuden, salbuespen bakan eta duinak alde batera; gainerakoan duguna da nekazari eta kulturarik gabekoen praktika eszeptikoa, galegoa euren arteko lokarria baitzen. Erbestean bilduko da, ostera, galizierazko sorkuntza guztia, hala nola Mexikon eta Buenos Airesen. Esan dugun bezala, galizierak mendetako tradizioa ahaztu (*kantiga*k bereziki), eta heziketa-gabekoen aitzakia folklorezalea bihurtu zen. Gainerakoan, bakarturiko intelektualen eta kontzientziadun unibertsitarioen eskuetan geratu zen. Are gehiago, galtzaileen hizkuntza zen; 1939tik aurrera galizieraz egiteak zama ideologiko galanta zeukan. Aurrerantzean aldizkariak elebidunak izango ziren, izatekotan. Periferiako kultura nazionalak baztertzea gerraoste espainiarreko fenomeno tipikoa da[3].

*Aldizkaria poetikoak Katalunian. Zertzelada batzuk:*

Aldizkari poetiko kataluniarrek herriaren jendarte jantzi eta landua elikatzeko eta salbatzeko zeregina bete zuten, orduko hizkuntzaren eta kulturaren mugen barnean. Adierazgarria iruditu zaigu S. Espriu idazlearen kasua, bere baitan bertako polemika bat hezurmamitzen zuena. Alegia, errealistak idealisten kontra bezainbat, marxistak liberalen kontra eta epikoak lirikoen kontra jartzen zituen polemika; hitz batean esateko, poesia iraultzaren armatzat zeukatenak batetik, eta, bestetik, arima biki eta aukeratuen (*happy few*) kontsumorako poesia-zaleak. S. Espriuren poesia, politikoa zein konpromisozkoa izan zitekeen eta, aldi berean, ihes egitekoa, izpirituzkoa edo atzerakoia. Hori zen orduko kinka.

Atzerrian erbesteratuek ere euren jarduna jarraitu zuten.

Gerraosteko Espainian kultura kataluniarraren gezurrezko irudia dago; ikuspegi folklorikoa, erlikiaren balioa ematen diona, ez datorrena bat indar betean dagoen literatura horren nortasun zalantzarik gabekoarekin.

*Ariel* izeneko aldizkariak, iragan patetikoa estali nahi, eta tradizio iraunkor baten inguruan aukera komun bat gauzatzeari ekin zion; Modernismoaren inguruan Katalunia modernoak izandako batasuna berreskuratu nahi zuen. Etorkizun bateratzailearen inguruan borondateak metatu nahi zituen. Aldizkari horrek berak Valentzian egiten ari ziren literatur *folkloriko-falleroa* kritikatzen zuen, destainaz. Harako idazle kataluniar haiek, iheslariarena egin gabe, gozotasun iturri zen humanismo existentzialera jo zuten[4].

Kataluniako zenbait joera antzeman ditugu gure, *Ariel*en garaikidea zen *Gernika* aldizkariaren kasuan ere; adibidez, tradizio nazionalaren aldarrikapena egitea, humanismora jotzea eta, aldi berean, intimismora jotzeko zaletasun nabaria –F. Krutwigen zundaketa erlijiosoak, kasu-.

*Euskal Herria:*

Hona sasoi hartako giroa azaltzen duen *Jakin* aldizkariko aipua garai hartako euskal egoeraz:

> *Gerraondo politikoaren mugarriak (1937-1953)*
>
> *Ia berrogei urteko gerraondo luzeak (1937-1975), epealdi oso ezberdinak izan zituen bai politikan eta bai kulturgintzan. Xehetasun gehiegitan galdu gabe 1956-1960. urteetan ezar dezakegu mugarri bat: belaunaldi berria orduantxe plazaratzen da, gerra ozta-ozta bizi izan duena.*
>
> *Euskal abertzaletasunaren bihurgune historiko batean gaudela pentsa liteke, beraz. Lehenengo gerraondoa (1937-1946), gerrak erbesteratu zituenentzat itxaropen-aldia da. Armaz bentzutuak izan dira, eta galtzaileak direna ondotxo dakite atzerriratu behar izan dutenek. Baina hondamendiari gain hartuz garaipen handiago baten itxaropena darraikio: BIGARREN Mundu Gerra amaitzera doa eta abertzaleak, behingoz bederen, irabazleekin batera garaitzaile bezala agertzen dira. Euskadiren askapen-kanpaiak, ustez, berehala joko du ordua, eta Eusko Jaurlaritzak sekula baino itzal handiagoa duenez, abertzale eta euskaldunon artean ez ezik, baita Espainian eta nazioartean ere, laster eskuratuko den botereaz jabetzeko Baionako Akordioa lortuko da denen artean: PNV-EAJ, ANV-EAE, Mendigoizaleak, PSOE, PC, Partidu Republicano Federal, Izquierda Republicana (1945-martxoa-17). Akordio horren argitan gidatuko dira abertzaleen ahalegin politikoak. III. Reich-a erori da (1945-ekaina-9) eta nazioarteko oreka berri bat sortu nahi da, faxismoa itoz eta harremanak molde berrietan emanez: UNO jaiotzen da San Francisco-n (1945). Bakealdiak, garaileen ideal demokratikoak ekarriko ditu, diotenez 1946eko abenduaren 13an, Erregimen frankista isolatzea erabakitzen da UNO-n: Madrileko enbaxadak hutsik gelditzen dira. Nazioarteko harremanak eten zaizkio frankismoari. Eusko Jaurlaritza eta abertzaleak, itxuraz laster datorkeen aldakuntzaren zain-zain daude. Errepublika garaiko instituzio politikoetatik itzalik handikoena Eusko Jaurlaritza da, gainera, 1945-47etan. Badirudi, inoiz ez bezala, orduantxe asmatu dutela euskal politikoek etorkizuna ongi antolatzen: ... la realidad ha demostrado que el camino seguido ha sido el más eficaz, hasta ser hoy el problema de España un asunto internacional que necesita solución (Eusko Jaurlaritza, Baiona 1946-VIII-26). Zinez, etorkizuna baikorki begira litekeela ematen du. Baina abertzaleen eskuetan ez, baizik besterenetan zeuden baldintza gehiegi aurkitzen da planteamolde politiko hartan. Baldintza haietatik bi, behintzat, nabarmenak dira: alde batetik, xede haiek lortzeko, aliatuen arteko harremanak eta batasuna*

*funtsezkoak dira, eta, bestetik, ikusi egin beharko da Francori zein maliobragarritasuna geratzen zaion. Egia da, 1945ean Francok ez duela nazioartean erosotasun handirik, baina —aliatuen artean zer gertatuko ere— ari da ahal duentxoa egiten: aurpegia garbitu nahiz, «Fuero de los Españoles» delakoa ematen du (1945) eta diktadura ere «aldatu» egiten da «Ley de Sucesion» (1947) haren bidez, erregimena teorikoki monarkia bilakatzen delarik. Eta, bat-batean, «Gerra Hotza» erortzen da Europa eta munduaren gain: mundua bi taldetan banatzen da. Aliatuen arteko itxurazko batasun irmoa oso ahula ageri da. Komunismoa/antikomunismoa bikotearen inguruan ardaztuko dira nazioarteko harreman politikoak: alderdi kristaudemokrata batek gidaturiko Eusko Jaurlaritza, sare horretan hartua aurkitzen da. Geroz eta estuagoa da abertzaleentzat nazioarteko politikaren probalekua. Eta, hain zuzen, nazioarteko koiuntura hari lotuta ikusi ohi ziren ordurarteko itxaropen politikoak! Oraindik ere, barneko Erresistentziak oso bortitz dihardu ekinean (1947, 1951 eta 1953ko grebak) baina gertakari larriak dira nazioartean bata bestearen gain datozenak: Koreako Gerra (1950); UNOren aholkuz, enbaxadariak Madrilera berriz itzultzea (1950); Eusko Jaurlaritzari Frantziako Gobernuak kendu egiten dio bere etxea (1951); Estatu Espainola UNESCOn onartua da (1952) Vatikanoarekin Konkordatua izenpetzen da (1953) eta USArekin Laguntza-Tratatua (1953), Miterrandek itxi egiten du Mugerreko Euskadi Irratia (1954). Hiruzpalau urteren buruan uretara joan dira itxaropen-arrazoirik bizienak: 1955ean, Espainia frankista UNOn sartu zen. Nabarmena da, beraz, estrategia politiko berri baten beharra, abertzaletasunari segida eman eta ekintza bulartsu bat sustatu nahi bada. Ondorengo urteak, ba, bereziki gogoeta politiko eta kultural batera zuzenduak izango dira (1954-1960), bai PNV-EAJren barnean, bai politikara berehala iritsiko den belaunaldikoen artean: Xabier Landaburuk eta Federiko Krutwigek toki berezia izango dute gogoeta horretan. Aldakuntza hori dena gertatzen den garai berean mokoz moko segitzen dute, noski, frankismoak eta Eusko Erresistentziak; baina martiri politikoak gorabehera (1953) Erregimenak berean irauten du, inoiz baino tenteago eta lagun demokrata gehiagorekin. Ekintza politikoa moteldu egiten da; Eusko Gobernuaren itzal morala handia da, baina noraezean ez ote dabilen galdetzen du belaunaldi berriko zenbaitek. Eta ez da falta abertzaletasunaren santutegian bertan horrelako galderaren bat: gogora Monzonen Kontseilari-dimisioa (1953). (Ik. Euskal Batzar Orokorra, 186-193 or.). Jelkideetatik at, jaioko ez jaioko dabil «heterodoxia » politikoa: ekintza politiko eta kultural biziago baten egarri den mugimendu gaztea[5].*

Orduan argitaratu ziren, euskal literaturaren arloan, Orixeren *Euskaldunak* (1950) eta J. Etxaideren *Alostorrea* (1950). Bizkaian... goizegi zen ezer argitara zedin[b].

3.2.2. Aldizkaria bera

Hona hemen *Ibinagabeitia proiektua* deritzon interneteko aldizkari-bilketan zer dioten *Gernika* aldizkariaz:

*"Gernika" aldizkariaren sorrera 1943ko udan abiatzen da, Gernikan egindako bilera batekin. Bi urte geroago, Rafael Pikabea "Alzibar" (El Día egunkariaren sortzaileetarik) gidari zela, Donibane Lohitzuneko bere etxean kultur elkarte bat sortu zuten (Instituto Vasco de Extensión Cultural Gernika) 1945eko apirilaren 26an, Gernikaren bonbardaketaren zortzigarren urteurrenean.*

---

[b] Orduko giroaz zerbait gehiago:

*Bigarren Mundu Gerra bukatuz gero, euskal atzerriratu asko eta asko, Penintsulara itzuli ezinik, Iparraldean helbideratu ziren. Hor frankismoaren aurkako nukleoak sortuz joan ziren, hein batean Iparraldeko kultur munduan integratuz. Telesforo Monzon, Manuel de la Sota eta Antonio Armentia horren adibide goiztiarrak izan daitezke, ezen laster Herria aldizkarian kolaboratzaile gisa idazten hasi baitziren. Giro horretan proiektu berriak ere agertuko dira, esaterako Gernika kultur aldizkariarena, erbesteko publikazioen artean seguraski maila altuenetarikoa lortuko zuena. Gernika —hasieran Guernika bezala agertua, akats ortografiko baten ondorioz— Instituto Vasco de Extensión Cultural erakundearen bozeramaile bezala aurkeztu zen, eta hasiera-hasieratik, ideologikoki, «Eman da zabalzazu. Euskal humanismo herritarren alde» lemarekin batera, humanismo unibertsalaren defentsan kokatu zen.* in ZABALA. J. R. "1936-ko euskal erbesteko prentsa Europan". *Jakin* 119. 2000: 87 or.

*Urte bereko urrian argitaratu zuten Gernika aldizkariaren lehen zenbakia Donibane Lohitzunen, Rafael Pikabearen sarrera hitz hauekin: "Eup, jaunak! Emen gera gu ere (...) Zeiñ geran? (...) Azkeneko gerratian itxetik kanpora bialiak. Zer nai degun? Irakurri gure esanak, eta laister jakingo dizute nora guazen (...) Atozte bada Alkartuta, danak batian, bultza dezagun gora gure aberri maitia". Ale horretan, besteak beste, artikulu hauek ageri dira: Joxe Eizagirreren "Gernica... !", Orixeren "El genio de un Pueblo", Isidoro Fagoagaren "La música folklórica".*

*Gernika aldizkariaren bigarren zenbakia askoz geroagokoa da, 1948ko urtarrilaren 10ekoa, "Cahiers collectifs de culture humaniste" azpitituluaz emana, eta hiru hilabeteko maiztasunarekin argitaratzekoa, hiru hizkuntzatan: frantsesez, espainolez eta euskaraz. Beste azpititulu bat hartu zuen 1949an, 7. aletik aitzina: "Eman da zabalzazu, Al servicio del humanismo popular vasco".*

*Isidoro Fagoaga zuzendaria Ameriketara joatearekin, Buenos Airesa aldatu zen Gernika 1951. urtean (16. zenbakia, uztaila-iraila). Gogoangarria da, adibidez, 1953ko apiril-ekaineko alea (23. a); Andima Ibinagabeitiak otsailean Jon Miranderi (hogeitasei urteko gazteari) Parisen egindako elkarrizketa bat dakar, "Olerkariarenean" izenburupean; eta ale berean argitaratu zen Jon Miranderen "Euskaldungoaren etsaiak" artikulua, eskandalua piztu omen zuena eta, diotenez, Gernika aldizkariaren itzaltzea eragin.*

*Gernika aldizkariak 25 zenbaki eman zituen, idazle ezagun askoren lanez: Orixe, Xabier Iratzeder, Federiko Krutwig, Jon Mirande, Andima Ibinagabeitia, Pierre Lafitte, Jokin Zaitegi, Julene Azpeitia, Ixaka Lopez Mendizabal, Errose Bustintza, Luis Villasante, Joxe Migel Barandiaran, Isidoro Fagoaga, Dominique Dufau, Etienne Salaberri, Txomin Peillen, Oxobi, Marc Legasse, Mixel Etxeberri, Miguel Astiz, René Lafon, Sebero Altube, Justo Garate, Juan Thalamas, Norbert Tauer, Antonio Maria Labaien, Jon Bilbao, Jon Etxaide..[6].*

***Hasierako sortzailea, Alcibar, eta Gernika aldizkaria***

Rafael Picavearen ezizena dugu “Alcibar”. Azalduko ditugu pertsonaia garrantzitsu horren gorabehera zenbait. Kazetaria, negozio-gizona eta politikari gipuzkoar hau 1867an jaio zen. Enpresa ugariren sortzailea eta kudeatzailea izan zen. *El pueblo vasco* egunkari teknikoki berritzailea sortu zuen (1903). Indar katolikoen eta nazionalisten hurbileko politikari gisa, diputatua eta senataria izan zen. Primo de Riveraren diktaduraren aldekoa izan zen, bere egunkarietan azaldu zuen legez. Gero berriz nazionalistekin lerratuko zen Diktadura bukatzean. Errepublika garaiko Legebiltzarretikako bere kronikak irakurrienetarikoak izan ziren Gipuzkoan. Gerran Parisa erbesteratu zen, eta Euzko Jaurlaritzako propaganda-antolaketaren buru izan zen. 1945ean “Instituto Gernika” sortu zuen, eta baita aipagai dugun aldizkari homonimo hau ere. Argitalpen antifaszistak bultzatu-eta, Vichyko erregimenarekin istiluak izan zituen. 1946an hil zen Parisen. Oro har, nazionalismoa Gipuzkoan sartzen eragin handikoa izan zen, baina ez zuen jakin goi-burgesia eremu honetara erakartzen, Enrique de Ybarraren ustez (1985). Nazionalista koherentetzat dauka Picavea azken autore honek[7].

**3. 4. Humanismoa: behin behineko definizio orokorra**

Ikerketa honek nahi duena da humanismoa delako korrontearen konkretizatzea haztatu. Historian eta geografian hurbila zaigun dokumentu bat erabiliko dugu bereziki: *Gernika* aldizkaria. Gauzak horrela, argigarria deritzogu kontzeptuaren ohiko definizioei eta bilakaera historikoari ekiteari. Hona definizio bat:

*humanismo, iz. 1. FIL. Gizakia eta giza balioak gainontzekoen gainetik jartzen dituen jarrera filosofikoa. 2. Literatura klasikoak eta antzinako testu grekolatindarrak birbaloratu eta aztertzea, espiritu kritiko eta pertsonala bultzatzea, eta erlijioaren alorretik nolabait aldenduz ikuspegi laikoagoa hartzea ezaugarri duen mugimendu intelektuala, bereziki Errenazimentuan, XVI. m. an batez ere Europan barrena hedatu zena[8].*

Beste hiztegi batean:

*1 a: devotion to the humanities: literary culture b: the revival of classical letters, individualistic and critical spirit, and emphasis on secular concerns characteristic of the Renaissance*

*2: humanitarianism*

*3: a doctrine, attitude, or way of life centered on human interests or values; especially: a philosophy that usually rejects supernaturalism and stresses an individual's dignity and worth and capacity for self-realization through reason[9].*

Beste entziklopedia batean:

*En el léxico filosófico corriente se habla de humanismo, en sentido teórico, para definir todas las posiciones que acentúen el valor del hombre en contraposición a Dios o la naturaleza, o que traten de reivindicar los derechos contra las amenazas sobre la persona humana que tienen su origen en la organización económica y social o en el desarrollo de la técnica[10].*

3.4.1.Humanismo kristauaz: ezaugarri orokor zenbait

Beharrezkoa da arlo hau jorratzea, aldizkariaren filosofiaren iturri aitortua frantses pertsonalismoa baitzen. Bereziki aipatzen dute Jacques Maritain[c], hautapenez tomista izan zen garai hartako filosofo eta politikaria. Gerra Zibila galdu aurretik, Gasteizen biltzen omen ziren *Gernika*ko erredakzio taldekoak izango ziren batzuk pentsaera-korronte horri jarraipena egiteko.

*3.4.1.1. “Populorum progressio” (1967) entziklika[11]*

Nolakoa da humanismo katolikoa?

Nahiz eta aldizkariaz gerokoa izan, humanismoaren ideia zehazteko balio duela-eta, entziklika honetako zenbait ideia jasoko ditugu. Hemen Aita Santuak teknikaren eta garapenaren kritika humanista bere egiten du; kontenplazioaren beharra eta balioen egokitasuna aipatzen du:

*Vers une condition plus humaine*

*Si la poursuite du développement demande des techniciens de plus en plus nombreux, elle exige encore plus des sages de réflexion profonde, à la recherche d'un humanisme nouveau, qui permette à l'homme moderne de se retrouver lui-même, en assumant les valeurs supérieures d'amour, d'amitié, de prière et de contemplation. Ainsi pourra s'accomplir en plénitude le vrai développement, qui est le passage, pour chacun et pour tous, de conditions moins humaines à des conditions plus humaines. Moins humaines: les carences matérielles de ceux qui sont privés du minimum vital, et les carences morales de ceux qui sont mutilés par l'égoïsme...*

Gizakiak bere baitako garapena ezinbestekoa du, agi denez. Bestetik, langileen zapalkuntza gaitzesten du, miseriaren kontra mintzatzen da, gizarteko kalamidadeen kontra bezainbat, eta duintasunaren alde, eta ongi komuna lortzeko lankidetzaren eta bakezaletasunaren alde[d].

---

[c] Maritain, Jacques *Harluxet Hiztegi Entziklopedikoa.* 2009.

*Filosofo frantsesa (Paris, 1882 - Tolosa, Frantzia, 1973). San Tomas Aquinokoaren interpretatzaile nagusietakoa izan zen; kristau-humanismotik landu zuen bere filosofia (Humanismo integrala, 1936; Giza politikaren printzipioak, 1944). Espainiako gerra zibilekoan eta ondoren, Euskal Herriaren adiskide agertu zen, eta bertako askatasunaren aldeko borroka defendatu eta goraipatu zuen idatziz.*

Sarean dagoen *Harluxet Hiztegi Entziklopedikoa*n aurki ditzake irakurleak hemen aipatzen ditugun pertsonaia ezagunen biobibliografiak, eta, beraz, ez ditugu aurrerantzean lan honetan jasoko. Testu honetan aipatzen diren hainbat kontzeptu ere, hala nola “integrismo”, “helenismo”… eta abarrak bezalakoak ere irakurleak era laburrean azalduta aurkituko ditu aipatutako hiztegi horretan.

[d] Honela jarraitzen du:

*...L'idéal à poursuivre... Moins humaines: les carences matérielles de ceux qui sont privés du minimum vital, et les carences morales de ceux qui sont mutilés par l'égoïsme. Moins humaines: les structures oppressives, qu'elles proviennent des abus de la possession ou des abus du pouvoir, de l'exploitation des travailleurs ou de l'injustice des transactions. Plus humaines: la montée de la misère vers la possession du nécessaire, 1a victoire sur les fléaux sociaux, l'amplification des connaissances, l'acquisition de la culture. Plus humaines aussi: la considération accrue de la dignité*

Oin-ohar honek hurrengo orrialdean jarraitzen du.

Tomismoa

Filosofia hau izan da hogeigarren mendeko lehen erdian gidaria Elizan, eta aurreko XIX. mendean ere bai. Ikusi besterik ez dago entzikliketan nolako gora eman dioten Elizaren Doktore Unibertsala den Akinoko Tomas Deunari aldian aldiko Aita Santuek[12]. Eta testuinguru honetan ulertu behar da katolizismoaren humanismoa.

II. Mundu Gerraren ostean, tomistek hiru lantegi izan zituzten bereziki: zientziaren filosofia egokia garatzea, gizakiari buruzko aurkikuntza fenomenologikoak eta psikiatrikoak kontuan hartzea, eta existentzialismoaren eta naturalismoaren ontologiak ebaluatzea[e]. Eta badirudi ahalegin horrek berriz interesa bereganatzeko besteko meritua ekarri diola neoeskolastikari, urtetan baztertuta egon eta gero.

Sekularismoak, ordea, burukominik aski ematen zien garai hartan Elizako buru argituei. Mugimendu hori zabalduko zen Europan lehenago, eta Euskal Herrian 1960 aurretxoan; sekularismoak naturaz gaindikoa jomugatik kentzeko deliberoa du. Erdi Aroan erlijiodun pertsonek mundua mesprezatzeko joera nabarmena zuten, aldi berean geroko bizitzaz eta Jainkoaz gogoeta eginez. Berpizkundetik aurrera humanismoa loratu, eta kulturazko lorpenak balioesten hasi ziren, mundu honetan gauzatzeko onartzen zitzaien gaitasuna aitortuz. Aro Moderno osoan aitzinatu da sekularismoa, sarri erlijioaren eta kristautasunaren kontra. Ildo horretatik, XX. mendeko bigarren erdian zenbait teologok Kristautasun sekularizatua aldarrikatu dute; horien iritziz kristau balioak munduan bertan bultzatu behar dira, Jesusen mezua egunerokotasuneko bizitza urbanoan aurki baitaiteke[f].

Eudaimonia

Aristotelesen kezka zen zein ote zen bizimodu ona edo *eudaimonia*; Tomas Deunak jarraipena eman zion interes horri bertuteen bidetik, *in medio virtus*. Zein da Ongia, ordea? Hedonistek plazera jarriko dute nagusi; pragmatistek asebetetzea edo satisfazioa, hazkundea, edo egokitzapena; kantiarrek borondate ona izatea; humanistek, garapen harmoniaduna; kristauek, Jainkoaren maitasuna[g].

Humanismoari begirako zenbait kritika

Humanismoari egindako kritika zenbait jarriko ditugu hemen:

a) Kristauek Berpizkundean humanismaren zenbait jokabide zalantzan jarri zituzten, humanista zenbait kabalarekin eta esoterismoarekin zaletu zirelako. Hain atzera jo gabe, XX. mendean Henri de Lubac teologo katolikoak humanismo ateoa kritikatu, eta aukeramen librearen gehiegizko gorespena egotzi dio. Humanismo modernoari pelagianismo berri deritzo, graziarik gabeko erlijio. Lubacek gizakiaren baitako harrotasuna zekusan ateismo

---

*d'autrui, l'orientation vers l'esprit de pauvreté, la coopération au bien commun, la volonté de paix. Plus humaine encore la reconnaissance par l'homme des valeurs suprêmes, et de Dieu qui en est la source et le terme. Plus humaines enfin et surtout la foi, don de Dieu accueilli par la bonne volonté de l'homme, et l'unité dans la charité du Christ qui nous appelle tous à participer en fils à la vie du Dieu vivant, Père de tous les hommes.*

Zientzia-teknologiaren eta humanitateen arteko harremanen ikuspegi laikoa dakar in SNOW, C. P. *Bi kulturak*. Usurbil: Elhuyar fundazioa, 2007.

[e] *After World War II, Thomists faced three major tasks: to develop an adequate philosophy of science, to take account of the phenomenological and psychiatric findings on man, and to evaluate the ontologies of existentialism and naturalism.* James Daniel Collins:"Thomism". *Encyclopedia Britannica 2005*. Reference Suite. Britannica inc. DVD.

[f] Sekularismoaz:

*any movement in society directed away from otherworldliness to life on earth. In the European Middle Ages there was a strong tendency for religious persons to despise human affairs and to meditate on God and the afterlife. As a reaction to this medieval tendency, secularism, at the time of the Renaissance, exhibited itself in the development of humanism, when people began to show more interest in human cultural achievements and the possibilities of their fulfillment in this world. The movement toward secularism has been in progress during the entire course of modern history and has often been viewed as being anti-Christian and antireligious. In the latter half of the 20th century, however, some theologians began advocating secular Christianity. They suggested that Christianity should not be concerned only with thesacred and the otherworldly, but that people should find in the world the opportunity to promote Christian values. These theologians maintain that the real meaning of the message of Jesus can be discovered and fulfilled in the everyday affairs of secular urban living.* "secularism." Encyclopædia Britannica. Encyclopædia Britannica 2009 Ultimate Reference Suite. Chicago: Encyclopædia Britannica, 2009.

[g] *Many different answers are given to the question "What is intrinsically good?" Hedonists say it is pleasure; Pragmatists, satisfaction, growth, or adjustment; Kantians, a good will; Humanists, harmonious self-realization; Christians, the love of God.* "Values". Encyclopædia Britannica. Encyclopædia Britannica 2009 Ultimate Reference Suite. Chicago: Encyclopædia Britannica, 2009.

modernoaren oinarrian. Bere aburuz, doktrina humanista ateoak zekartzan berarekin apaltasun gabezia eta karitate gabezia.

Etikaren ikuspegitik, balio humanistak kritikatu ditu Pierre-André Taguieffek, prometeozaleak direlakoan. Bere esanetan, gizakia arduragabetzen du, eta eugenismoa bezalako praktika ustez okerrak bultzatzen ditu[h].

b) Antihumanismotik egindako kritika: Freuden eta Marxen ikuspegitik, gizakiaren ikerketa (jokabidea eta historia) desbideratu egiten da banakoaren kontzientziatik abiatuz gero. Hurbilketa akastun horrek atzentzen ditu gizakiaren arrazoi ez-kontzienteak. Beraz subjektibitatean erortzen gara, aldiz, ikuspegi objektiboa beharko genukeen lekuan. J. Derridaren eta G. Deleuzeren arabera antropologia zientifikorik ez da posible, ezta antropologia filosofikorik ere[i].

*3.4.1.2. "Gernika"-ko taldearen inspirazio iturriak*

Aldizkariaren editorialak

Giza-sentimendu unibertsala

Aldizkariak 1948an jarrera agertzen du. Herrikoia eta anitza du proiektua, inongo ideologiaren ezarpenei men egiten ez diona. Uste du giza-sentimendu unibertsalaren alde, burubide desberdineko gizakiak batu ahal direla eta horrela pertsonaren eskubideak defendatu[13].

*Iturriak: Frantziako humanismoa;*

Gerra Zibilaren aurretik, Gasteizeko Apaizgaitegian eta bertako *Idearium* aldizkariaren inguruan, bazegoen Frantziako humanismo frantsesa (*Esprit* eta *Ordre Nouveau* aldizkarien eta J. Maritainen irakaspenak) jarraitzen zuen ikasketa zirkulu bat. 1943an, hari beretik, Gernikako dramak eragindako zirrarari ekimen humanista bat lotu nahi izan zitzaion[14] gero *Gernika* aldizkarian hezurmamituko zena.

*Errebindikatutako euskal pertsonaia historikoak:*

Aldizkaria zenbait pertsonaia konkreturekin identifikatzen da, tradizio baten bila abiatuta. Hona hemen errebindikatzen direnak:

Humanisten lehen hazaldia: Vitoriako Frantzisko Anaia, Azpilkuetako Martin, Zumarragako Juan, Miranda de Carranza, Huarte Donibanekoa… XVI. mendean sortu ziren aipatutako pertsonaia horiek, baina ez zuten oinordekorik utzi.

Gauza bera gertatu zen Peñafloridako kondeari dagokionez XVIII. mendean. Muniberen eta Azkoitiko Zalduntxoen ekimenak –diote─ bateragarri egin zituen gizateriaren idealak aberriarenekin. Bestizenez Peñaflorida zen Munibe. Humanismoari uko egin gabe politikagileen balaku eta interesei muzin egin, eta beren askatasuna begiratu zuten, *Gernika*

---

[h] "Humanisme/critique". *Wikipedia.* 2009.

*À la Renaissance, des humanistes ont été liés au développement de la kabbale et à l'ésotérisme, ce qui provoqua des controverses. Marin Mersenne est resté célèbre pour avoir dénoncé une secte philosophique qui réunissait Mirandole, Cornelius Agrippa et Francesco Gorgio.*

*Au XXe siècle, le théologien catholique Henri de Lubac a écrit Le drame de l'humanisme athée : selon lui, l'humanisme athée exalte le libre-arbitre jusqu'à l'excès. Il dit que l'humanisme moderne constitue une forme nouvelle de pélagianisme, c'est-à-dire une religion humaniste privée de grâce.*

*Lubac croyait que l'orgueil de l'homme pour soi était la cause principale de l'athéisme moderne. Il écrivit que la doctrine humaniste athée conduisait immanquablement vers un manque d'humilité et un manque de charité.*

*Sur le plan éthique, les valeurs humanistes ont été critiquée par Pierre-André Taguieff comme étant prométhéennes. Selon lui, il déresponsabilise l'homme et encourage des pratiques douteuses comme l'eugénisme.*

[i] *From the point of view of either Freudian theory or of the non-existentialist reading of Marx, any attempt to provide a study of man—of human behaviour and history—that starts from the individual consciousness must seem misguided. This will include the empiricist approaches, which assume that all human behaviour is to be explained in terms of the conscious mental states (i. e., beliefs and desires) of individuals. Such approaches seem to fail to acknowledge that the causes of human actions include factors of which they are not consciously aware. A scientific account, one that is concerned with providing causal explanations, must not be confined to the subjectivity of the individual consciousness but must adopt an objective standpoint, a standpoint from which these factors can be recognized and studied. Equally as important, however, the sort of arguments used by phenomenologists and existentialists to query the availability of objective viewpoints can be reapplied here. Thus, structuralism gives place to the post-structuralism of Derrida and Deleuze, according to which neither a scientific nor a philosophical anthropology is possible.* "Philosophical anthropology". Encyclopædia Britannica. Encyclopædia Britannica 2009 Ultimate Reference Suite. Chicago: Encyclopædia Britannica, 2009.

aldizkariaren garaiko zenbait eruditu garaikidek ez bezala[j]. Gizakiarenganako eta aberriarekiko isuri jasoa zuten, jauregi inguruko erosotasunak bezainbeste baztertzen zituztela irrika eta gurariak. Ongiaren atzetik abiaturik, erramu boneta baztertu zuten[15].

Miguel Astiz Dorreak “El humanismo en los caballeritos de Azkoitia” artikuluan taldearen helburuak zehazten ditu: zientzietarako, letra ederretarako eta arterako zaletasuna bultzatzea; ohiturak arteztea; alfer egotea, ezjakintasuna eta berorien ondoren kaltegarriak aienatzea, eta hiru probintzien elkartasuna areagotzea. Gure XVIII. mendeko aitzindariak, XVI.ekoak bezainbeste ziren humanistak, izpirituari munduaren nagusigoa egokitzen ziotenak, eta gizakia sorkari guztien gainetik jartzen zutenak[16].

XIX. mendean Iparragirre kantaria erreibindikatzen dute[17].

Euskal historiaren esparru horretan Angeles Sorazu jarri nahi du L. Villasantek Euskal Herriko maila goitiarreko jendakien artean. Haren lanak aipatzen ditu, gaztelaniazkoak denak; deitoratu egiten du jende ekimentsuak euskaraz jardun ez izana. Hala ere, emakume honen euskaltzaletasuna azpimarratu egiten du.

Idazle aipatuak

Adierazgarria direlakoan, jaso egin ditugu *Gernika* aldizkarietan zehar aipatzen izan diren bateko zein besteko idazleen erreferentziak. Erredaktoreek egindako aukeraketek irizpide ageriko batzueijarraitzen zaizkie. Hainbat esparrutatik aukeratutako autoreek agertzen dute gardentasunez aldizkariak zuen izaera unibertsalista; hona hemen idazleok:

## a) Berpizkundekoak

D´ Huarte Donibanekoa, eragin handiko idazlea, medikua eta pedagogoa.

Vitoriako Frantzisko Anaiak alderdi moralak duen lehentasuna defenditu zuen jainkozko zuzenbidearen aldekoa zen gobernuaren aurrez aurre[18].

Martin Azpilkueta. Luis Vives.

Beste batzuk: López, Covarrubias, Soto, Suárez, Juan López de Palacios; Rabelais, Montaigne, Erasmo.

Saint-Cyran: erreformatzaile jansenista honen seriostasuna eta zorroztasuna, hasiera batean osasungarriak ziratekeen; euskaldunek izan ohi dituztenen bikiak dira, horrelakorik aurki baititzakegu mendialdeko elizbarrutietako apezen artean[19].

W. Shakespearek eta M. de Montaignek tradizio erromatar eta kristauari izpiritu berria erantsi zioten. Bi horiek Berpizkundeko humanismoa hezurmamitu zuten: eztabaida librea, antzinako izpiritua, egiaren xerkatze zintzo eta aitzakiarik gabea; halaber, endekatutako sentimendu erlijiosoaren kontrako berrikuntza eta karra. Montaignek erakutsiko du finezia, argitasuna, neurria, inteligentzia sarkorra *honnête homme*[k] delakoaren baitan; Shakespearek erakutsiko zizkigun askatasunaren aldeko grina, giza-duintasuna, hiritartasun-sena eta lagun hurkoarenganako errespetua[20].

Salesko Frantzisko.

Irakurlea konturatu dadin nahi dute autore klasikoak ez direla bertan behera uztekoak; aitzitik, ulertu egiten dira gaizki ulertutako erudizio hutsalaren gainetik berreskuratuz

---

[j] Testuaren ulermen orokorrerako egilearen oharra: aldizkarian jasotakoen parafrasiak ematen ditugu, eta horrela jarraituko dugu aurrerantzean, erreferentziak emanez oin oharretan (ez dira nahitaez gure iritzia). Era berean, maiz, estilo korala erabiliko dugu, hainbat kolaboratzaileren ahotsak jarraian emanez, uste baitugu ideien araberako sailkapena egokia dela, ñabardurak ñabardura.

k Ikus hiztegi frantses batetik esamolde horren adierak:

*Honnête homme, au plur. honnêtes gens. [Au xviie siècle, en France] Homme du monde, d'un commerce agréable, aux manières distinguées, à l'esprit fin et cultivé, mais non pédant. Un ami de Racine ou de Fénelon, un M. de Tréville, un M. de Valincour, un de ces honnêtes gens qui ne visaient point à être auteurs, mais qui se bornaient à lire, à connaître de près les belles choses, et à s'en nourrir en exquis amateurs, en humanistes accomplis (Sainte-Beuve, Nouv. lundis, t. 13, 1868, p. 227): (...) 7. La première condition, pour être réputé honnête homme au xviie siècle, c'était d'avoir de la naissance, ou, du moins, de vivre sur un pied d'égalité avec ceux qui en avaient. L'honnête homme était alors, à peu de chose près, ce que nous appelons, en notre langue, un homme de bonne compagnie; et il n'y avait que les hommes de cour, en ce temps-là, qui fussent ou qui crussent être de bonne compagnie. Sarcey, Mot et chose, 1862, p. 147. 8. La morale de l'honnête homme est éclectique: elle emprunte à la morale chrétienne et aux grandes morales antiques et contradictoires, la stoïque et l'épicurienne. Elle suppose la rente, l'assurance du lendemain, la certitude que confère la seigneurie ou l'office héréditaire. Elle suppose des loisirs et une vie à l'écart des aléas de la croissance capitaliste. La morale de l'honnête homme est une morale d'officier et de gentilhomme...* P. CHAUNU, *La Civilisation de l'Europe classique,* Paris: Arthaud, 1966, p. 605 « in http://www. cnrtl. fr/lexicographie/honnête.

antzinako kulturaren balio iraunkorrak. Gazteriak antzinateko kultura unibertsalari begiratzen dio, ez jakite gogo hutsagatik, baizik eta betierekotasun-irizpide batekin, aurrerakuntza oro humanismoan oinarria duelako ziurtasunarekin, alegia, jabetuta ulerkuntza-, tolerantzia- eta eskuzabaltasun-irizpideen garrantziaz[21].

### b) *Gernika*n aipaturiko beste zenbait idazle eta sortzaile

- jasotzen da zenbait artikulutan L. van Beethoven, S. Ramón y Cajal... eta beste pertsonaia famatu zenbaitek Euskal Herriaz esandakoa, edo bera aitzakia harturik sortutakoa: sinfonia bat dela, oroitzapen-liburua dela...

Lao-tse, F. Krutwigek aipatzen du. Bidenabar kontuan har dezagun autore honek Txinako orduko gerrate amaigabeen erdian bakea bultzatu nahi izan zuela filosofiaren bitartez[22].

Père Lhande.

Jose Artetxe giza banakoaren eskubideak baliarazten saitua, sorterriko seme gailenei (Elkano, Saint-Cyran…) eskeiniz liburuak J. Thalamas Labandibarren esanetan [23].

P. Laffite, M. Unamuno, Dr. Marañón, Julián Marías,  S. Madariaga, Jaime Balmes neoeskolastikoa, J. Ortega y Gasset.

Ravel: bere musika ez zaie hurbiltzen euskaldunei. Ezin omen dakizkioke musika landuari egokitu euskaldunen orijinaltasuna eta mendikotasuna (*chants agrestes*)[24].

M. Gandhi, G. Duhamel, Ricardo Rojas, Francis Jammes, Romain Rolland, Simone Weill;  François Mauriac garai hartako idazle profetikotzat zeukaten[25].

Mao-tse, Julian Huxley.

Pierre Loti: irudimena eta intuizioa gauzatu zituen *Ramuntcho* euskal giroko eleberrian behaketa eta ikerketa bainoago[26]. Lotik eleberriratu zuen giro exotikoaren harira, aipa dezagun turismoa dela-eta gogoeta egiten dela: benetako turismoa aukeratutako inguruek eragindako zirrara soila sentitzeaz besterik al da?

P. Valéryk eta H. Bergsonek gaztigatuak gintuzten gizateriak fede amankomuna izatearen beharraz.

Ch. Péguy[l], J. Maritain, André Ulman, G. K. Chesterton, Edmond Rostand.

Frank Buchman: “Mouvement de Réarmement Moral” ekintza-taldearen buruzagia. Kezka nagusia zuen orduko gizartean ebangelioko bertute gailenak aitzinatzea: onestasuna, eskuzabaltasuna eta anaitasuna[m].

L. Lévy-Brühl, M. Montessori, J. Piaget, Karl Jaspers, F. Nietzsche, P. Teilhard de Chardin, N. F. S. Grundtwig, Nilsen, R. Tagore.

Beste batzuk, ez denak garaikideak dituzte aipatzen: Aita Larramendi, D. Garat, A. Xaho, Rafael Sanchez Mazas, Mgr. Mathieu (doktore tomista, filosofia garaiko aurkikuntzekin adosten zuena)[27], Pierre Loti, Padre Bernardino de Estella, Isaac Etxeberria Galdeano, Ricardo García Villoslada...

### c) Bergson: pertsonalismoa

Filosofo hau dago *Gernika*ko pentsaeraren jatorrian, berarengandik edango baitute, bai E. Mounierrek, bai gaztetan eta tomismora itzuli aitzin, J. Maritainek berak ere. Existentzialismoak eta fenomenologiak H. Bergsonen itzala ezabatu dute bizitzaren filosofia interpretatzean. H. Bergsonen moralaz arituko gara, oroz gain. Teknologiari egin zizkion kritikak aldizkariko idazleek egin zituztenen antzekoak dira:

> *No ignora Bergson que el progreso tecnológico, por el contrario, empuja al hombre “hacia la satisfacción de los deseos más groseros (“Las dos fuentes de la moral y la religión”): todo ello provoca “el exagerado bienestar y el lujo para algunos, antes que la liberación para todos” lo que explica las terribles guerras, los conflictos sociales y el peligro de destrucción total de la humanidad. Bergson opone a esto la esperanza en un nuevo salto evolutivo de la especie, en un*

---

[l] *Gernika* aldizkarikoen irakurgai aitortua zen. *Ordre nouveau* aldizkarikoen elikagai ziren hauek: Ch. Péguy bera, S. Kierkegaard, Proudhon eta F. Nietzsche.

[m] *les grande vertus évangeliques: honnêteté, pureté et déssinteressement* .YHOLDI, Jean-Pierre. “Le témoignage de la science et de la morale”. *Guernika (sic)*. Mars-Mai 1948: 27 or.

*nuevo misticismo que propulsado por la fuerza de la intuición y de la técnica se traduzca en un "amor universal y activo"*[28].

## d) Jacques Maritain (1882-1973) neoeskolastizismoa[29]

Neotomismoa edo neoeskolastizismoa izeneko korronteak Erdi Aroko filosofia bat eguneratu eta uztartu nahi du XX. mendeko pentsaera garaikidearekin.

Ulertu nahi ditu gizakiaren esentzia, arau moralen arrazoizkotasuna, e.a. Fedeak, euren ustez, salbatu egiten du, eta filosofia du morroi –*ancilla theologiae*–. Neoeskolastikoek aurre egin zieten Ilustrazioko arrazionalismoari, immanentismo idealistari eta materialismo positibistari. Borrokatu zituzten laizizatzea eta sekularizatzea, liberalismoaren kontra jarrita. Sekularizazio hori, euskal mundura, XX. mendeko erdialdean-edo iritsiko zen. Neoeskolastizismoak erantzun egin nahi zion Elizak jasaten zuen autoritate galerari, eta, berdenboran, salatu nahi zuen sakratua dena baztertzea.

Mugimendu honen pizgarri bi entziklika ditugu: *Aeternis Patris* (1879) eta *Pascendi* (1907). Lehenak, orduko laikoen dinamismo zientifikoari, kulturalari, industrialari eta inperialistari erantzun nahi izan zion. *Pascendi* entziklikak modernismoa gaitzetsi zuen; modernismoa izeneko eskola filosofiko kristauak integratu nahi izan zituen nolabait, pentsamenduaren ildo berriak teologia berri batean, baina Erromak arbuiatu egin zuen. Oraindik orain, Joan Paulo II.a Aita Santuak aldarrikatu du filosofia tomista honen baliozkotasuna, nahiz eta malgutasun eta irekidura gehiagorekin aldarrikatu ere. Aita Santuen ekimen hauek, Frantzian, bi jarraitzaile gailen izan zituen, biak *Gernika* aldizkarikoengandik gertu: J. Maritain eta É. Gilson.

Jacques Maritaini gagozkiolarik, aipa dezagun maisu izan zuen H. Bergson. Emaitzarik umoenak epistemologian lortu zituen; errealitatea ezagutzeko era asko dagoela uste du: zientzia, filosofia, arte edo mistikaren bideetatikoak[n]. Ontologia aristoteliko-tomista hartu zuen oinarritzat. Eustazpi horrekin hainbat arlo jorratu zituen: hezkuntza, estetika, politika...

Hezkuntzari buruz *Hezkuntza bidegurutzean* (1943) argitaratu zuen. Heziketak pertsona formatzeko, osotzeko, eta askeagoa egiteko balio du. Heziketak egikaritzen du betegintzarre pertsonala eta soziala, eta, gaitzen pertsona bizimodu demokratikorako. Tresna humanistak eta zientifikoak darabiltza horretarako, besteak beste, hezitzailearen ekintza morala hezigaiarekiko lankidetzan. Heztea medikuntzaren antzekoa da: *ars cooperativa naturae*, berez dagoen bizitasunari garapena erraztu behar baitzaio. Gehiegizko haizukortasun edo permisibitatea arbuiatu egiten du, zeren hezitzailearen dinamismoa, agintaritza morala eta gidaritza positiboak nahitaezkoak baitira. Heziketaren emaitza da gizaki zoriontsua: zapalkuntzarik ez duena sumatzen; bere buruarekiko begirunea jaso, eta giza-elkartean kokatuagatik egiazaletasuna eta ongirako joera ase ditzakeena.

Politika arloan Estatua eta Eliza bereizi nahi ditu. Baina humanismo integral batek egituratu behar du gizartea. Herriak du subiranotasuna, Jainkoak emana. Humanismo integral batek egituratu behar du osotasun guztia. Estatua helburu sozialak lortzeko bitartekoa da.

Demokraziak morala izan behar du. Izan ere, justizian datza benetako indarra, II. Mundu Gerrak argi utzi duena; agintekeriaren aurrez aurre, botere guztiek kontuak eman behar dituztelakouste du J. Maritainek. Balio moralak denok juzgatzeko gai dira. J. Thalamas, aldizkariko kolaboratzailearen hitzetan: [J. Maritainek] *Tomas Santuaren filosofiatik pentsamendu bizia egin zuen, filosofia garaikidearekin adostu daitekeena*[30].

---

[n] Jacques Maritain (1882-1973). *Microsoft ® Encarta ® 2006*.

*Filósofo francés, conocido por su aplicación de las enseñanzas del filósofo escolástico medieval santo Tomás de Aquino a los problemas de la vida moderna. Nacido en París el 18 de noviembre de 1882, Maritain estudió en la Sorbona, donde recibió la influencia del filósofo Henri Bergson, y en la Universidad de Heidelberg. Educado en el protestantismo, Maritain se convirtió a la religión católica en 1906. Realizó un estudio de la filosofía tomista, que aplicó a la cultura moderna. Fue profesor en el Instituto católico de París de 1914 a 1933, en el Instituto de Estudios Medievales de Toronto (1933-1945) y en la Universidad de Princeton (1948-1952). Desde 1945 hasta 1948 fue embajador de Francia ante el Vaticano. Se retiró a Toulouse, Francia, donde murió el 28 de abril.*

*Maritain enfocó los problemas filosóficos teniendo en cuenta la antropología, la sociología y la psicología. Sus logros más profundos los obtuvo en epistemología, donde analizó los diferentes grados de conocimiento y sus interrelaciones, así como en filosofía política. Sus escritos subrayan que la realidad puede ser conocida de muchas maneras —a través, por ejemplo, de la ciencia, la filosofía, el arte o el misticismo.*

Gaur egun, J. Maritainenaren antzeko tomismoa bitxia suertatzen da, zenbaiten aburuz[31].

## e) Mounier: pertsonalismoa

*Gernika* aldizkariaren ingurukoek maiz aipatzen dituzte *pertsonalismoa* izeneko korronteko gidariak, eta horiengandik edaten dute. Korronte horretako literaturagileak ere gogoko dituzte. Bereziki bi autore dituzte gogoko filosofoetan: J. Maritain, lehenago aipatua, eta Emmanuel Mounier (1905-1950). Idazleetan, G. Bernanos.

E. Mounier, pertsonalismoaren lemazain frantziarra izan zen. H. Bergsonen ikaslea izan zen; humanismo kristaua defendatu zuen. Kristautasuna eta sozialismoa uztartzen saiatu zen berekoikeria burgesarekiko uzkur. E. Mounierren *Manifeste au service du personnalisme* aipatzen dute *Gernikan.* Erredakziokoek idazki hau bide-erakusletzat daukate, eta aldizkariaren etorkizuneko bermetzat[32]. Pertsonalismoaren zenbait zertzelada dakartzagu hona.

Hiru bide dira pertsona osotzekoak:

meditazioa norbere deia edo bokazioa bilatzeko

konpromisoa, alegia, neure haragiztatzea onartzen duen ekintzari zor diodan atxikimendua.

nork bere buruaren ukapena: nork bere burua berari eta bizitzari opatzea besteen baitan.

E. Mounier moralismoaren kontra agertu zen; indibidualismoaren kontra ere bai. Ikus dezagun: izpiritualismoa eta moralismoa arbuiagarriak dira gizakiaren morrontza biologikoa eta ekonomikoa ahazten dituztelako. Materialismoak, bestalde, ahaztu egiten ditu baldintza izpiritualak.

Indibidualismoaren kontra ere badu zeresanik; zehazki dihardu besteenganako mesfidantza, kalkulua eta aldarrikapena duen banako horren kontra, izan ere, norabiderik eta neurririk gabeko askatasuna duen gizaki jainkotu, abstraktu eta naturarekiko harremanik gabekoa baita. Elkartasuna on-gosearen kariaz baino ez du bilatzen. Pertsonalismoaren aurkakoa da hori guztia.

Inguruko pertsonek ez dute gizakia mugatzen, aldiz, izaten eta garatzen laguntzen diote. Gizakia, izan, bakarrik da besteengana abiatzen den heinean; besteen bitartez dazagu bere burua, soilik besteengan aurkitzen du bere burua. Sakonean, izateak maitatzea dakar berarekin.

Zerrenda ditzagun E. Mounierrek pentsaera garaikideari eginiko kritikak.

Lehenik, kapitalismoaren kontrakoak; sistema horrek gizakiaren aurretik dirua jartzen du, *edukitzea* lehenesten du, eta *izatea* atzentzen.

Ondasunen oinarria lotuta dago gizakiaren kontzeptu batekin. Kapitalismoa jabego pribatuaren kontrakoa da: soldatapekoari etekina ukatzen dio. Aurreztailea kaltetu egiten du aldizkako *espekulazioen porrotekin*.

Bigarrenik, marxismoa ere kritikatzen du: marxismoak materia lehenesten du, kapitalismoak bezala; era berean, kapitalismo zaharrari Estatuaren kapitalismoaren ordaina bilatzen zaio, ez besterik; marxismoa, gizaki kolektiboa dela-eta baikorra da, eta banakoaz ezkor; hori ezin du onartu pertsonalismoak; marxismoak erregimen totalitarioak sortu ditu historikoki, eta inperialismo kapitalista ordeztu nahi du sozialistarekin.

Marxismoak askapen zantzu eztabaidaezinak daramatza berarekin, baina, tamalez, transzendentzia ahaztu, eta gizakiaren barneko eremua higatzen du.

Eta, hirugarren: zuzenbidean ardazturiko gizartea ere kritikatzen du. Zergatik? Ilustratuen gizarte iusnaturalistaren hitzarmena, ez da pertsonen artekoa, berekoikerien artekoa baizik.

E. Mounierren jomuga zen lortzea elkarhartze/*jaunartze*an oinarritutako gizarte izari teologikozko ideia mistikoan nolabaiteko euskarria hartuko lukeena.

Horrela, emakumeen eskubidearen alde jokatuko du, arrazismoaren eta xenofobiaren kontra. Bultzatzen ditu estatuarengandiko beregainak liratekeen eskolak; ontzat ematen ditu eskualde autonomoak ere. Proletarizazioaren kontra dago. Jarri nahi du ekonomia artean anarkikoa gizakiaren alde. Beharrezko dakusa sindikalgintza, eta jartzen du lana kapitalaren aurretik. Duintasuna hobesten du paternalismoaren ondoan. Anarkistak eta liberalak ez bezala, ez da baikorra banakoarekiko eta ezkorra boterearekiko.

Kristautasunari buruzkoan orain. Gaurko kristautasunak gizartearekiko etendura darakus: zientziak, teknikak eta saldo langileek dakarte hori. Haatik, sinesmen kristauak

beharrezkoa izaten jarraitzen du, osterantzean, behar ez diren gauzak jainkotu ohi dira-eta: liderrak, gorputza, kolektibitatea, alderdia... [33]

Beste autore batzuek ere egin diote kasu pertsonaren garrantziari: G. Marcelek, J. P. Sartrek, J. Maritainek... E. Mounierrek, bere aldetik, gauzen filosofia kritikatzen du: badira gizakia objektutzat daukatenak, unibertso fisikoko besteak bezalakoa.

Arrazionalismoa eta positibismoa kritikatzen ditu; ez, haatik, existentzialismoek egiten duten bezala, eurak ere akastunak izan, eta hala solipsismoan nola ezkortasunean erortzen baitira ezinbestean.

Pertsonalismoa kristaua izan daiteke (E. Mounierren kasuan), edo ez. Edonola ere, ekintzarako deia du bere baitan, *Gernika* aldizkarian maiz jasotzen denez.

### G. Bernanos

Arlo literarioan Georges Bernanos sonatua aipatzen dute kutunentzat *Gernika* aldizkarikoek. Esan behar da, literatoa eta jarraitzaileek antifrankista gisa agertzen direla, katolikoak izanagatik; eta hori, bestelako nazioarteko katoliko askok ez gaitzetsi arren Espainiako Errepublikaren kontra altxatutakoen erregimena. Esaldi famatuenetakoa hau du G. Bernanosek: *tout est grâce* ("dena da grazia").

### Ch. Peguy

Aldizkarikoen autore frantses hautatua da, garai hartan itzal handikoa.

3.4.2. Aldizkariko adierazpen zuzenak bere idearioaz

*3.4.2.1. Balioak*

Goiburu hau zuten: *eman da zabal zazu*

R. Picaveak gazteria hezteko beharra aipatzen du, eta hori humanismo kristauaren bidetik egin nahi du; Euskal Herriko altxor kulturala zabaltzen lagundu nahi du, historiaren ingurukoa, politikoa, letretakoa, gizarte-zientzietakoa eta abarretakoa:

> *Y esta es la divisa que hemos adoptado para nuestro Centro Cultural: EMAN DA ZABALZAZU, habiéndonos empeñado, burla burlando, en una patriótica labor de fomento y difusión de las letras, de los conocimientos de la historia y de la etnología del país, de las ciencias sociales y políticas, etc. Al efecto educativo, todo ello, de la juventud vasca que viene. Educación a tono con el progreso moderno, inculcando en el pueblo el más hondo sentido de justicia y de tolerancia. ¡La tolerancia santa! que haga posible el convivir pacífico de los ciudadanos, no obstante su distinta manera de pensar. Humanismo, en suma.*
>
> *Humanismo en Cristo que fue hijo de Dios según los creyentes. Que fue, por lo menos, el más perfecto de los hombres, según los demás. Eman da zabalzazu...* [34]

<u>Bakea</u>

Gernikako hiria nahi dute bihurtu izpiritualitate bakezalearen eta heziketa moralaren iturri, osterantzean hiria kiskali zuen sutearen ilintiak gure herria suntsituko luke[35].

Egunerokotasunean murgildurik, Orixe (*Espuru* bestizenez) kexu da kristautasuna gizabideak ordeztu duelako, *gizabiderik ederrena kristautasun jatorra baita* [36]. Bere ustez, herri-jendea hirikoa baino gizabidetsua da:

> *Erri-jende xumeari basa-jende esatea ez dago ongi; baña gaurko egunean, baserrietan bizi dan jenderik ankerrena, urijenderik geienak baño gizabide aundiagokoa iduri zait. Baserritarra naiz; uri aundiak ikusi ditut; ez det ordea ikusi gure baserritarrak bezain gizabidezko uritarrik. Baso eta uri, gauza ederrak dira, guk itsusten ez ba ditugu, basakeri ta urikeri biurtzen ez ba ditugu* [37].

Eta sekularizazioaren historiaz zera dio:

*Edozeinek ba daki, amaseigaren mendean[38] an emenka, kristautasun jatorra galtzen asi zalarik Kristaubide eder ori alde batera utzi nairik (batzuek beñipein) gizabide utsera jo zutela. Esan ere bear det, Erasmo'k berak ere etzula kristautasun ori zearo utzi, eta areago dana, gizabidetsu oiek ba dutela beren Prantzisko Sales'koa [39].*

Bakean bizitzeko Krutwigek egia eta tolerantziaren bidea proposatzen du, eta horiek lirateke Gernikako arbolaren fruituak:

*Bainan azterr ditzagun' Arbola Sainduaren frutuak. Egia ta tolerantza. Egia ta tolerantza' khidego baten bi zathiak dira. Eztago bata bertzearen gabe. Humanismuaren fruktuetan' tolerantza dago, beraz egia ere bai. Tolerantza' bertzeen aburuen, sinhisteen eta usteen jasatea ta onestea da' gure aurkhakoak direnean, beharr bada' honelakoak bait tira. Eztago egia duenaren, zuzen dagoenaren intolerantz saindurik. Elhe hoik' fanatismuaren mintzoa dira. Egia dezaguenaren intolerantza' contraditio in adiecto da. Termin hauek bethi batera doaz. Elkharrekin bethi bizi izaten dira Tolerantza alhorra da'ta Egia horr hazten den arnaria. Bere lurraren gabe erraz zimeltzen da*.

Aldizkari liberala

Erredakzioaren asmoetan, aldizkaria, liberala, eklektikoa zen, datorrena datorrela, baina arnas *kirasturik* ez zuen nahi. Horrelako adjektiboa jarri baitzion Justo Garatek J. Mirandek zenbait idazkiri[o]. Eskuzabaltasun horrek ekarriko zuen aldizkaria ixtea, Pariseko zuberotarraren lan zenbaiten ondorioz jasotako mehatxuak zirela medio, besteak beste.

Miranderen idazkiek sorturiko ika-mikak gogoan, Ibinagabeitiak askatasunaren alde idazten du honela:

*Sail ortan zabaltasunik eta zailutasunik aundiena ere erakutsi dizkigu, gure artean ain ditugun adimen zabaltasun eta zailutasuna. Ez noski aburu-bakarpean guztiak menperatuz, baizik eta bakoitzari bere buru eta gogoetaen askatasun edatuena emanik.*

*Eta askatasun onek, buru-tximur aunitz mindu edo eskandalizatu omen ditu. Zer uste dute gogo-aketxok, beren bulkoak direla aintzat artzekoak soilik?... Ez, enetxoak: zuen doktrina miragarri oriek, naiz eta miragarrienak izan, ez dira ikut-eziñak. Lurbira ontan ez dago ikut-eziñik; giza-burmuinak landara egotzi teori garaienak ere, azta, eztabaikatu eta iñarrostekoak dira. Beraz... ez zaiteztela, buru-ertsiok, Gernikak egin digun lan ederraz eskandalizatu. Zuen buru neurriaren ariora ari izan balitz, aspaldi iro ta ustelduko zen, zuen argontziak itzala baizik ez baitario [40].*

Humanismoa eta kristautasuna

François Mauriac aipatzen dute Europa humanistaren eta kristauaren aldeko idazle aitzindari moduan. Kristautasuna humanista da gizakiaren duintasuna goratzen duen heinean; izan ere, gizakia, Jainkoaren idurikoa denez, sorkarietan forma gorena duena da. Kristautasuna ez da kultura jakin baten ezaugarria, baizik eta kulturartekoa; bestalde, gizakia ez dago determinismoak mugatua, eta makinismoarengandik askatasuna lortzeko ez dago besterik. Izan ere ─diote─, garai hartako munduaren akatsik larrienetarikoa da batera etortzea teknologiaren aurrerakada bikaina izpirituaren aurrerakuntza moteltzearekin[41].

Bi humanismoren artean aukeratu behar da: teozentrikoaren eta ateoaren artean. Lehena borondate oneko edozeinen irismenean dago; bigarrenean, pertsona ez da esanguratsua, eta bai, aldiz, aginduak jaso besterik egiten ez duen jendolde bateko atala.

Bertuterako isuria sortu behar zaie herrikideei eta benetako jakituriarenganako maitasuna, ez bakarrik hitzez, etsenpluz ere bai. Egiteko latza da, baina erraz lortzekoa dena heroikoki jokatzen jarraituz, etsi gabe, aberria maitatuz, denen loria eta gizakia maitatuz[42].

Industrialismoari eta progresoari eginiko kritika

---

[o] *nuestra revista abierta a todos los vientos y corrientes, con tal de que no hiedan*. La AGRUPACIÓN GERNIKA. *Gernika* 17. 1951 (Octubre-Diciembre): 1 or.

Humanismoaren gaietako bat da alienazioarena, edo ifrentzua, gaur egun eragotzita dagokeen gizakiaren betegintzarrea. Zibilizazio industrialak langilea *zirrika* bilakatu du:

> *Gure oraingo Zivilizazinoaren argiek itsutzen gaitute. Hauien gurrtzekotz' gizonek erlegino berri bat eratu dute: Progressaren erleginoa. Idololatria honetan' neurribako gizonen larregikuntza' propheteia zan. Natura, Mundu guztia menpetu nahi ukhan genuen. Progressak ezinik ezagutu etzituen. Naturaz kontrako albara honetan' europarr guztiak albarazaleak izanik dira. Europako Zivilizazinoak heuragi argi eduk zezan, bainan heuragi itzal ere. Beredin aitzinapen" beredin ankherrkeria ere. Eta argi ta diztira haukiez' gizak zoriontsuago othe dira? Zer ekharri derauku gure Zivilizazino materialak? Zeintzuk izan dira gizaren aurkhintzean' bere progressak? Lehen aske ziren artisanak'orain fabrika baten jopuak dira. Lehen beure lana maite zuen langileak' orain gorrotatzen du. Lehen gizon zen langilea'orain massaren kopuru bat da. Lehen bere ekhintza hobetzen zuen maixua' orain makina baten haragizko zirrikak bai taduzkate. Oraingo industriak' beure zerbitzariak aberetu ditu, gizonak izpiritu gabeko materia bilhakatu ditu.*
>
> *Edozein larregikeria garesti ordaintzen da. Nemesis mendekatzaileak zuzentarzuna berr-ezarrten du, eta geuri orain ethorri zaiku [43].*

Artikulu berean eta kontrastean, haserre edo etsaituta dauden pertsonen arteko elkar ezagutzaren alde egiten du F. Krutwigek, bakerako bidean onuragarri dena; badihardu gehiegizko abertzaletasunaren aurka ere, eta baita ondorio kaltegarria duten guduen kontra ere.

Teknikak gizakien aurrerakuntza moralerako baliagarriak izan daitezen, erlijioak esku hartu behar du bakearen eta gizatiartasunaren idealekin bat egiten duen heinean. Helburu hori lortzeko ezinbestekoa da gaurko gizakiak ikuspuntua aldatzea; itzuli egin behar zaio sinesmenari bere izate morala eta izpirituala zientzia eta erlijioa adostezintzat jo gabe.

Hona Krutwigen adierazpenak:

> *Okherrdura ta gezurraren bidea' intolerantza da. Gezurra bethi bildurr bai ta. Egiak eztazugu fanatismurik, ez politikan, ez eta érleginoan ere, nehoren bildurr estelakotz. Beure bekhokia aizetan darama. Gizon intolerant bat dazagugunean' bere iritzia' aizuna ta gezurrezkoa dela' bethi aurretik jakin dezakegu. Intolerantza zimarrkhutsuen iskiloa bethi izan da.*
>
> *Jakintzan, Philosophian eztago magisteraren hitz faltagabekoa; politikan are gutiago. Philosophiaren systematak aldatzen dira. Nola hauietan egiazkoa den bakharra? Uhaitza iraunkorra izana gatik' ozkak irakankorrak dira, gizonen formulazino iraulkorrak. Haur hunela da magisterak hunela erran bai tzuen dionari erran iezozu: Zure magistera' ez-al-zan zu bezenbertzeko gizon bat? Zure magistera ba-al-zegoen gezurraz arantz? Zergatik alegia philosophuak' ex cathedra mintzatzen ohi dira? Heuren egiatan sinhisten ezpai tute. Zergatik politikariek ez cathedra hitz egin nahi deraukute? Zergatik jakintzalari batzuek ere ex cathedra mintzo izan nahi lukete? Zergatik' heuren aburuz kontrako oldozkaiak danzuzkitenean phariseuek bezala' jaunzkiak ethen nahi ditukete? Politikan, erleginoan, philosophian eztago jaunzkien ethenterik. Ezkaitezin phariseurik izan ¡*
>
> *Zuk horrela uste duzu, bertzeak hala; nundik othe dakizu zure ustea' zuzena denik? Erakhuts ezazu. Haur baino lehen' zure ta bere uste guztiek eskubide berdina dadukate. Zein jainkoak estalgetu derautzu zororri' aburu faltagabeko hori?*
>
> *Fedea ta egia eztira suz ta iskiloez hedatzen. Odolaz hedatzen den alegia egia' gezurra da. Expetxez, urkhamendiez, goitzarrenez ta intolerantzaz zaintzen den sinhiste, fede, errejime nahiz erleginoa' gezurrezkoa da. Edonun tolerantzak beharr du egon, egia legoen.*
>
> *Aspaldian' Sinan, Indian eta Persian erlegino-azkatarzuna ta sinhisteen azkatarzuna nahi zituen hierrkhe bat ezagutu nuen' baina bere herriarentzat, bere sinhisteentzat egia duenaren intolerantz saindua pheredikatzen zuen. Ah! gezurrezko propheta hori! Egia' jarraibide*

*pheredikatzen. Zutzat nahi eztuzuna'eziezozu egin nehori! Bertzeen herrietan ikhusi nahi zendukeiena' zure herrian, zure etxean iben, egin, araz, erein zazu! Bertzela populuak unhilaren legea izeneztatzen zuen zuzenbakokeria nahi duzu; eretz batetan zabal, bertze eretzean mehe. Bertzeek eman diezatzutela nahi duzuna: emezu! erein zazu! Eztago ereinteke' ezein uzta* [44].

Kontuan izan behar, mundu gerra baten ondoko urteetan ez ezik, Espainiako Gerraren ondokoetan ere bagaudela. Beraz, horrelako hondamendien sorburuaz galdetzen diote euren buruari izpiritu humanistek. F. Nietzscheren supergizakia gurtzea dateke iturburuetako bat, F. Krutwigen aburuz:

*Arren, zergatik eztitugu bertzeen gurariak hulerrtu nahirik? Jakintzaguztidunak othe gara? Nundik dathorrku ezpairik gabeko jakiduria hori? Ez othe dagoku errare humanum est? Edozein gizonek faltak dagizki. Haur da Arrazoinaren natura. Abereak huts ezin-eginezkoak dira. Gizonok huts egiten dugu, guztiok, batzuk bertzeak baino errorez-arantzago ezpai kara. Edozein gizon ilhumpetan datza, lanhopetan dabil. Gugan bilhatu beharr dugun eta ezin lekora diroguen egia, zein arautara harr-arazi? Egiaren bilha doazanai lagun gakidizkete, bainan laguntzea ezta araztea. Egarri denak urak bilhatzen du, bainan guk ezin diezakeogu eman nahi eztuen ura. Nundik lethorrkegu eskubide haur? Gure ura, gutzako edari ona izan-arren, nola nahi ta ez bertzeai edan-araztea haizu lekidikegu? Gizonak differentak dira, jarraiki genkizkidion bidea' gure naturaren araura egin bidea zan. Itua berdina izana gatik' bideak eztira berdinak. Gure Norberagan dagoen' ez lekhunerik, ez betarik eztazaguen barna ixilean' hedagoak eta bethitarzunak neurririk eztadukate, guztia' higikunaz' bilhakatzeaz' aldatzeaz ta izateaz arantz bai tago. Helduaz geroz' atzean geratzen dena' Nâyâ da, eztago, eztatza, ezta. Han bilhatu beharr dugu Egia. Hara gure lera zuzendu beharr dugu, egia lizen, argia ligun, bakhea luen.*

*Ezagut ezazu Bata, ezagut ezazu Arima (Tam ezaikam jânathâtmânam) dio Mundak Upanixadak, ezin-hilezkotarzunaren zubia (amrtasyaisa setuh) delakotz. Ezagut zure burua, zure Norbera! Haur naikhoa da. Bethi bertzeen nokhuak eta nothak ezagutu, ikhusi, jakin nahi ditugu, ez-al-ditugu nokhurik, thonarik? Ez othe dago gu gan Bata lohitzen duen thona? Ez othe dago gu gan Egia itzalpetzen duen behaztoporik; jaio izatea' pekaturik handiena den-ezkero, gu-gan notharik handiena daramagun ber, nola ephaika giniroke tipikeria baizen eztena?*

*Gezurraren propheta hoik! Zeintzuk dira zuen missinoaren itu ta bideak? Gizonaren sentimenduak gogorrtzen dituzue. Progressaren gezurrezko jainko hoien ezpainetan Satan eta Molokh mintzo dira. Mundu modernuko jainko-aizunak, jainko-estatua, jainko-progressa' maitarzunaren, tolerantzaren etsaiak dira. Munduko Legea goibetu, irauli nahi dute. Molokhek bezala' zerbitzarien odola nahi dute, errubakoen odolaz baizik askiesten eztira, eztazugute tolerantzik, eztazagute humanismurik Der Wille zur Macht pheredikatu zuen Nietzschek eta bere ikasleek gudua kategetu dute. Zorigaiztoko hyper gizonek' urrikaririk gabe mundua artheztu nahi ukhan dute. Edozein nahikunte zatarretan bezala' orzirantz jaurkiti burhoa' lurraren gainera gizoner erori zitzaien. Eta geroz munduak Erruki! erruki gutaz! deihadarr egin du. Ahantz othe zedin hitz haur?* [45].

<u>Herrikoitasuna</u>

Bizitza kontenplatiboaren eta aktiboaren arteko harremanez ere ari zaizkigu *Gernika*n. Kontuan har dezagun egiten zaigun gogoeta hau: adimenak aurrean baditu bi aukera: begikotasun edo sinpatia irekia batetik, eta abstrakzio sistematikoa bestetik. Begikoa izanik, gizakiak gizarteko inguruarekin bat egiten du. Abstrakzioen bitartez, ordea, balio gutxiko hauek baino ez ditugu jasotzen: edozein eskolatako aurreiritziak, norbanakoaren interesak, eta, maizenik, aitortuezineko arrangura eta joerak.

Herritar xumea modu abstraktuan pentsatu eta jardun beharrean, figura eta gertakarien bidez aritzen da. Kontenplaziorako ahalmenak ez ditu endekatu; sinboloa sartzen da bere bizitzan; intuizioei esker antzematen du munduaren benetako zentzua[p].

Populismoaren harira, eta bidenabar, birgogoratu dezagun historian atzera eginez, pentsaera honen bizitasuna Frantziako gortean, Iraultza aurreko egun haietan. Maria Antonietaren garaian jende xehearen idealizazioa ez zen ohiz kanpokoa. Gurean baserriarekin egin denaren antzekoa dugu:

> *At the very centre of sophistication the simple life became a fad, the French court (including Marie-Antoinette) dressing up and playing at the rustic existence of milkmaids and shepherds. However silly the symptoms, the underlying passion was real. It was the periodic urge of complex civilizations to strip off the social mask and recover the happiness imagined as still dwelling among the humble. What was held up to admiration was honesty and sincerity, the strong and pure feelings of people unspoiled by court and city life. Literature therefore came to express an acute sensitivity to scenes of undeserved misfortune, of heroic self-sacrifice, of virtue unexpectedly rewarded—a sensitivity marked by tearfulness, actual or "literary"* [46].

---

[p] THALAMAS LABANDIBAR J. "Cultura y conciencia popular".*Gernika.* Janvier-Mars 1949: 1. or.

Konparazio baterako gai honi buruz beste interpretazio bat har dezakegu kontuan:

*A menudo, en el debate filosófico y teológico, estas distinciones se han radicalizado hasta el punto de contraponerse entre sí: lo típicamente cristiano sería el amor descendente, oblativo, el agapé precisamente; la cultura no cristiana, por el contrario, sobre todo la griega, se caracterizaría por el amor ascendente, vehemente y posesivo, es decir, el eros. Si se llevara al extremo este antagonismo, la esencia del cristianismo quedaría desvinculada de las relaciones vitales fundamentales de la existencia humana y constituiría un mundo del todo singular, que tal vez podría considerarse admirable, pero netamente apartado del conjunto de la vida humana. En realidad, eros y agapé —amor ascendente y amor descendente— nunca llegan a separarse completamente. Cuanto más encuentran ambos, aunque en diversa medida, la justa unidad en la única realidad del amor, tanto mejor se realiza la verdadera esencia del amor en general. Si bien el eros inicialmente es sobre todo vehemente, ascendente —fascinación por la gran promesa de felicidad—, al aproximarse la persona al otro se planteará cada vez menos cuestiones sobre sí misma, para buscar cada vez más la felicidad del otro, se preocupará de él, se entregará y deseará « ser para » el otro. Así, el momento del agapé se inserta en el eros inicial; de otro modo, se desvirtúa y pierde también su propia naturaleza. Por otro lado, el hombre tampoco puede vivir exclusivamente del amor oblativo, descendente. No puede dar únicamente y siempre, también debe recibir. Quien quiere dar amor, debe a su vez recibirlo como don. Es cierto —como nos dice el Señor— que el hombre puede convertirse en fuente de la que manan ríos de agua viva (cf. Jn 7, 37-38). (...) El pastor bueno, dice, debe estar anclado en la contemplación. En efecto, sólo de este modo le será posible captar las necesidades de los demás en lo más profundo de su ser, para hacerlas suyas: « per pietatis viscera in se infirmitatem caeterorum transferat ». (...)También pone el ejemplo de Moisés, que entra y sale del tabernáculo, en diálogo con Dios, para poder de este modo, partiendo de Él, estar a disposición de su pueblo. « Dentro [del tabernáculo] se extasía en la contemplación, fuera [del tabernáculo] se ve apremiado por los asuntos de los afligidos: intus in contemplationem rapitur, foris infirmantium negotiis urgetur ».*

*Deus charitas est* gutun entziklikotik.

Honen inguruan, aldean izateko, kontuan izan Akinokoaren Suma Teologikoan aipatzen dena:

*Sometimes a man is called away from the contemplative life to the works of the active life, on account of some necessity of the present life, yet not so as to be compelled to forsake contemplation altogether. Hence Augustine says (De Civ. Dei xix, 19): "The love of truth seeks a holy leisure, the demands of charity undertake an honest toil, " the work namely of the active life. "If no one imposes this burden upon us we must devote ourselves to the research and contemplation of truth, but if it be imposed on us, we must bear it because charity demands it of us. Yet even then we must not altogether forsake the delights of truth, lest we deprive ourselves of its sweetness, and this burden overwhelm us. " Hence it is clear that when a person is called from the contemplative life to the active life, this is done by way not of subtraction but of addition.*

(2garren atalaren 2garren atalean, 182 puntua "Bizitza aktiboa eta kontenplatiboa aurrez aurre" izenburua duena, alegia. AKINOKO TOMAS DEUNA. *Summa Theologica.1266-73*. New Advent. http://www. newadvent. org/summa/2. htm . 2010-04-05.

Eta leku berean, beste hau:

*Active life may be considered as quieting and directing the internal passions of the soul; and from this point of view the active life is a help to the contemplative, since the latter is hindered by the inordinateness of the internal passions. Hence Gregory says (Moral. vi, 37): "Those who wish to hold the fortress of contemplation must first of all train in the camp of action. Thus after careful study they will learn whether they no longer wrong their neighbor, whether they bear with equanimity the wrongs their neighbors do to them, whether their soul is neither overcome with joy in the presence of temporal goods, nor cast down with too great a sorrow when those goods are withdrawn. On this way they will known when they withdraw within themselves, in order to explore spiritual things, whether they no longer carry with them the shadows of the things corporeal, or, if these follow them, whether they prudently drive them away. "Hence the work of the active life conduces to the contemplative, by quelling the interior passions which give rise to the phantasms whereby contemplation is hindered*

internetetiko AKINOKO TOMAS DEUNA. *Summa Theologica.1266-73*. New Advent. http://www. newadvent. org/summa/2. htm . 2010-04-05

A. Ibinagabeitiak ez du ikusten humanismoaren zeregina marfilezko dorrean bete daitekeenik. Ekintza gailen jartzen du:

> *"Humanismua"k, literaturan daukan esanguraz bertzalde, ba'du beste iraurriago bat ere, elerti-baratzean eman oi zaionaren kidekoa. Literatur-humanismuak giza-zentzu guztien eldutasun eta umotasuna berez darakar, ots, gizon-bete ta alde orotarik oso baten erapena. Antxiñako elendarrek iritxi zentzu-giroa duzute humanismuaren uztarik bikaiñena, zentzu-giro eta gogo-giro neurtu ta betea, armoni-oreka goxoenean azi gizagogo atsegiñarena.*
>
> *Barne giro zuur orrek ordea, barnetik landara bear du, giza-biotze-tik gizartera. Ez dago zentzu-giro beterik ez eta arestian aipa armoni-girorik, bakartasun soilenean trikuaren gisa bilduta, baranokoetara itsu ta gor dagoen gogo-zakarraren baitan. Gizarte-humanismua besterik da. Zentzuadarrak erne ta biotz-ateak ere landakoetara zabal bear ditu, andik ialki giza-asmo ta ustekizunak iker eta azta ondoren onez atosteko [47].*

Burgesiari kritika egiten zitzaion, lanaren ondoan dirua lehenesten zuelako eta norbanakoa elkartearen ondoan; aldaketa etorri zen geroztik, eta lana kapitalaren aurretik jarri zuten, elkartea norbanakoaren ameskeria eta apeten aurretik. Pertsona xede bihurtu beharko zela zioten orduan, bitartekoa izateari utziz.

Mendebaldeko Europan humanismo herrikoiak izpiritualismo hazkorraren itxura hartuko zuen, Jainkoaren seme izatearen kontzientziaz jabetu eta gero. Langile-klaseek hainbestean mudatuko zuten kontzientzia erlijioarekiko, non sozialismoak berak aukera izango zuen auzi horrekiko bere jarrera orokorra berraztertzeko eta aldatzeko.

Izan ere, garai batean sinestunak kristautasunetik urrundu ziren, Elizak berak aldarrikatzen zituen ebanjelioko aginduak begiratu ez zituelako.

Ildo horretatik, sistema abstraktuek ez digute balioko; pentsamolde garaikidea urrun dago, bai Platonen bai Aristotelesen abstrakzioetatik; zientziarentzat datu enpirikoa da baliagarri, erlijioarentzat, ostera, errealitate morala. Erlijioaren etorkizuna izango da gizakiak egin gogo duen bizitzaren esperientziaren araberakoa, Jainkoarekiko lotura mistikoaren araberakoa, eta lagun hurkoarekin lotzen duen zentzu moralaren araberakoa.

Gregarismo bakarzaleari dagokionez, langileak banakako interesen kontra daude, elkartearen eta gizakiaren hobekuntza estimatzen dituztelako. Eliteek heziketa jasoa eman behar diote herri xeheari, masifikazioan jausi ez dadin, eta estatua Leviathana bilakatu ez dadin[48].

*Abertzaletasuna*

Erredakzioaren idazki batean kontrajarri egiten zaio darwinismo sozialari humanismo unibertsala, elementu moralen eta gizatiarren aldeko apustua eginez; eta, aukera bi zituzten parean: arrazan oinarritutako euskalduntasuna ala euskalduntasun gizatiarra eta unibertsala[49].

Edo bestela esanda, orduko konturik larriena zen aberriaren zerbitzua uztartzea gizadiarekiko maitasunarekin eta zerbitzuarekin[50].

*Ongi komuna*

Humanismoak alderdikeriari itzuri egiten dio eta, haragoko politika bilatzen du ongi komunaren bila betiere[51].

<u>Etsaia maitatzea</u>

F. Krutwig bakearen alde ari zaigu eta gudu-zaletasun ororen aurka, Tao delakoaren autoritea erabilita. Ildo horretatik, *nazinokeria*ren kontra ere badihardu; itsukeria hori tarteko eta asasinatzearen bidez, gizaki zantarrak aberriaren ohore bihurtzen dira[52].

<u>Dirua galgarri... eta gainerakoak</u>

E. Salaberriren arabera, dirua bilakatuko da botere-gosearen iskilu gorena. Horren ondotik gozamen-gosea etorriko da. Burgesiak azken endekatze maila lortuko du, eta ondoren ondokoa eta bere burua suntsituko du.

Amerikarrak Europara humanismo irakaspen bila letozke, eta gu eurenera ekonomia-jakintza bila gindoazke. Bide okerra, bata bestearengandik bereiz ezin baitaitezke jakintza hauek.

Ondasun banaketari dagokionez, denoi ziurtatu behar zaigu gutxieneko independentzia materiala, barneko bizitzaren nahitaezko eustazpi izango dena. Kristauen utzikeriak utzi egin du bertan behera munduko ezedukien ardura. Eta hori oinarrizkoa zen.

E. Salaberriren aburuz, munduak beharrezkoago ditu sainduak, ezen ez jakitunak. Zientzia azkarregi garatu da. Euskal kristauak munduaren patu materialaren eta izpirituzkoaren erantzule sentitu behar du bere burua.

Poeta berrizaleak

Nemesio Etxanizek erdal kanta modernoak euskaratzen ditu sasoi hartan moralitatearen galbahetik pasatu ondoren. Abesti horiek *pikareskotzat* jotzen ditu *Gernika* aldizkarian iruzkingile batek, eta, halaber, moralitatearen *zinezko eragozgarri* [53].

Ametsa vs. arrazoia

Miranderen "Ametsetarik"[54] poema. Mundu tradizionalaren krisia ulertzeko garrantzia duen kontua da arrazoiak inkontzienteari leku ematearena[55]. Jakintza humanistaren tradizioan "animalia arrazionala" zen gizakiari ezagutza lortzeko bide berriak irekitzen zaizkio. Gizakiaren definizio hori zaharkituta geratuko da gero, batez ere M. Heideggerrek humanismoaren gaineko gutunean egindako kritikaren ondorioz.

Espainolak eta indiarrak

Julene Azpeitikoak, urriki ditu indiarrak, espainolak heldu aurretik zibilizazio distiratsua izan baitzuten, eta orain, aldiz, gainbehera baitatoz. Aberastasunen herrialdean senipartea galdu dutenetarikoak dira, beti penetan eta lorretan[56]. Orain berriz, gainera, alfabetatu gabeak izan ohi dira.

Olentzaro

1951. urtean eginiko Olentzeroren interpretazio bat aipa dezagun:

> *Euzkaldunak: "Olentzaro", etxe maitasuna eta pake-zaletasuna guregan sortzeko gure aurrekoak egin deia izan da. Olentzero Eguberria'ren opari zaigu, anaitasun deia, sendiaren bilgarri ta Aberria'ri alkarrenganako maitasuna dakarkiona.*
>
> *Jaungoikoa'k nahi beza, bere eresiaren oihartzuna gorrotoaren amai ta anai arteko berextasunak lautuko dituna izan dedilla.*
>
> *Gazte alai auen eztarrietatik sortzen diran oiu biziak aztuazi bitza bein-betiko gure arteko asarreak, Eukadi'ko sendi guzietara alaitasuna eta pakearen oiartzun eztia zabalduz*[57].

### 3. 5. Eskolaren gainean zer dioten *Gernika*n

1) Grekoen ideala; *paideiaz*[58]

Arimaren zainketa da benetako *paideia*

Platonek *Protagoras*en aipatzen du hau: arima arriskuan dago. Sokratesek Jainkoa zerbitzatzeko lanbidean, heziketa arimen zaintza balitz bezala burutzen du. Sokratikoek arimaren zaintza dute helburu nagusitzat. Sokratesen esanetan, arimaren zainketa datza balioaren ezagutzan (*phronesis*) eta egiaren ezagutzan (*aletheia*). Programa honen arabera, hierarkikoki goiko mailan leudeke arimako ongiak; bigarren: gorputzekoak eta, hirugarren: ongi materialak, alegia, boterea eta ondasunak. Arestiko eskala hori, herrikoia den beste eskala Bakiko honekin talka egitekotan dago: osasuna, lehenik; edertasuna bigarren; hirugarrena: tatxarik gabeko ondasuna, eta, laugarren gaztaro sasoiko lagunekin gozatzea.

**Erretorika eta filosofia**

Isokratesek badaki: erretorika gaizki erabil daiteke, gehiegikeriaz, edozein beste arte bezala; kulturak ez du gizakia aldatuko, muin morala aurretiaz badelako ustea baitauka. Kritikatu egiten ditu logosa beheratzen dutenak, landu gabeko jendeari men egin, eta heziketa-lana horrela baliozkoagotzat agertzen dutenak (sofistek diru-truke irakasten dutenean).

2) Aldizkaritikoak

Hona hemen 1943ko aldarrikapena aldizkariaren xedeez. R. Picaveak fundatzaileak berak aitortu zuen bezala, mugimendua Jacques Maritainen pentsamenduari lotuta antolatu zen, mugimendu kristau eta gizazale baten komunikabidea izateko asmoarekin:

> *Y ésta es la divisa que hemos adoptado para nuestro centro cultural, 'Eman da zabalzazu', habiéndonos empeñado, burla burlando, en una patriótica labor de fomento y difusión de las letras, de los conocimientos de la historia y de la etnología del país, de las ciencias sociales y políticas, etc. Al efecto educativo, todo ello, de la juventud que viene. Educación a tono con el progreso moderno, inculcando en el pueblo el más hondo sentido de justicia y tolerancia. La tolerancia santa que haga posible el convivir pacífico de los ciudadanos, no obstante su distinta manera de pensar. Humanismo, en suma*[59]*.*

R. Tagore aipatzen da; Nobel Sari indiarrarentzat eskola tenplua ere bada. Irakaspenak ezin burutu du heziketa izpiritualik gabe. Zientziak kontzientzia behar du. Ahalmen arrazionalaren eta sentimenduen arteko batasuna Jainkoa baitan egin liteke soilik, bizitzaren eta batasunaren bermea baita.

Euskaldunen izpirituzko tradizioa teozentrismo gizatiarrean oinarritzen da: jainkozkoaren agerraldia da, gure gizaki moduko deiaren eta ordenu sozial baketsuaren eta orekatuaren iturri[60].

Helduen heziketaren alde egiten da, bizitza osoan zehar luzatu beharko bailitzateke, eta zahartzaroa, amets hori medio, bizitzen hastea bezalakoxea litzateke[61]. Gainera edonorentzakoa izango litzateke, eta zinez handituko lirateke moldatzeko, sortzeko eta ekiteko gure ahalmenak.

E. Salaberriren ustez eta hezkuntzari begira, euskaraz hitz egitea da hizkuntzaren ekarriak aberastua izatea, alegia, da beraren mugak eta oztopoak sentitu eta hortik pentsaera argia erauztea.

Sarri herria kexa liteke, esanez buruzagiei bera gutxiagotu egiten dutela, eta ez duela eskuratu bere betegintzarrea[62].

Benetako abertzaletasuna ez datza goratzean gure gauza guztiak dauden-daudenean, baizik eta onartzean dauden-daudenean, eta sendo saiatzean behar luketen gradoan jarri arte[63].

## Hezitzailea eta Komisarioa

E. Salaberrik artikulu sail bat opa die estatuaren eta hezkuntzaren arteko harremanei[64]. Hezitzailea, yogia da; berak aldarrikatzen duen egia askatzailearen sinestuna da. Norbanakoa bere taldetik hastandu, eta hurreratzen zaio inteligentzia akuilatzeko elkar hartzean. Komisarioa bizi da hezitzailearen bizkar; pedagogoak idealismo goitiarrean itsatsi du bere gogoa, eta bere bizitza opatu dio goiburuari apaizarenaren gisako eraspenaz. Komisarioa pozik, pedagogoak bi-bion partezko jorana eta gogo bizia baitu; baina berarentzako gordetzen estatuaren ditu ordezkariak etekinak – bai baitaude eskola pribatu maiz erlijiosoak Salaberrirenak bezalakoak–. Tai gabeko egonarria eskatzen zaio pedagogoari, eta irakaskuntzako lanpostuak nekez betetzen dira.

Kultura herrikoiaz ari dela, E. Salaberrik dio gainontzeko giza-kulturaren formei lotutakoa behar duela. Euskal apaiza zorionekoa da euskaraz eman behar dituenean hitzak, zaharkituak zein sotilegiak diren ezberdintasunak ezin eman dituenean, herriaren gogoak hastio dituen sistemak ezin itzuli dituenean. Betebeharra alimalekoa da, ezin baita inor hezi, norberak eztabaidaezina den gailentasuna izan gabe. Handitasuna dago entzulearen kezka barrenekoenak eta ilunenak ematean berezko euskal hizkuntza konkretua baliatuz, eta, hurrengo, Frantziako idatzizko kultura abstraktura salto egitean euskal ahozko kultura konkretuaren bitartez. Kultura arrazionalera iritsi kultura afektiboaren bitartez, ez batari ez besteari uko egiteke.

Estatua kritikatzen du, herriaren iritzia bideratzeko eskola erabiltzen duelako. Erlijioa beharrezkoa da, eta ez ordez ezarri den agintari-taldearen gurtza. Izan ere, gogora dezagun, Frantzian, garai hartako auzi bizia zen ea erlijiosoek eskola emateko eskubiderik zutenetz[q].

Salaberriren ustez, heztea balioak komunikatzea zen.

Heziketaz ari garen honetan, bestelako bi puntu ekarriko ditugu hona:

1) Eleaniztasuna edo polilinguismoa gaia hartuta, Parisetik hizkuntza anitz jakitearen abantailaz dihardu J. M. (Jon Mirande ziur aski) siglekin sinatzen duenak:

> *Ez dut erran nahi erdarak ez direla ikasi behar. Ikas frantsesa eta halaber española, inglesa et bertzeak, buru ona baduzu: gizonaren izpiritua erdarak ikasiz chalointzen da eta jakintsun bilakatzen. Bainan Eskual-Herrian zaudeno, lehen tokia utz zazu herriko mintzaireari, Eskuarari!* [65].

2) Larramendi´tar Iñakik, bere "Erlas-txoriak" idazlanean[66], hartutako mesedeak eskertu beharra dakar. Agi denez, habian haziak izanik, alde egiten duten txorien irudian, seme-alabek ere gurasoekiko izan beharreko esker ona ahazten dute; gizaki artean, ordea, sustatu beharrekoa da hori.

## Humanismoa eta hezkuntza

Humanismoren gaurkotasunaz ari garela, zenbaiten ustez[r], XX. mendean zailtasunak izan dira lotzeko hezkuntza humanistikoa eta hezkuntza teknikoa (informatika, teknika berriak, komunikabideak...).

## Propaganda eta hezkuntza

Beste alde batetik, bada beste eragozgarririk; hezkuntza non bukatzen den, eta propaganda non hasten den eztabaidagarria den kontua da. Humanismoak egiaren ikerketa kritikoa bultzatzen badu ere, aurkezten duena zalantzarik gabeko egia izan daiteke *sinestuna*ren begietan. Hezitzailea, hala ere, saiatuko da ikasleari gaiaren alderdi anitzak azaltzen, eta, erraztaile gisa prestatuko du ikaslea bere kasako iturrien bilaketa independenterako[s].

### 3. 6. Euskaltzaletasuna *Gernika* aldizkarian

Euskaldunen bizimodu ez beti eredugarriagatiko kezka ere bada zenbait orrialdetan. Herriarena gozoagoarazteko ardura sumatzen da, kasu, Orixerenean; aizkora-apustuak direla eta, kirolarientzat gehiegizko saioek duten arriskuaz gaztigatzen du. Inola ere ez lukete izan behar osasunarentzat kaltegarri; horretarako jardunaldien luzera murriztu beharra dago. Ez

---

[q] Piarres Ainziartek Eusko Jaurlaritzak argitaratutako *"*Bidegileak*"* sailean, E. Salaberrik bere buruaz beste egiteari buruz hipotesi bat jaulkitzen du; bere ametsak bete ez izana jartzen du, besteak beste.

Aipa dezagun irakaskuntza erlijiosaren legezkotasunaz sortutako eztabaida bizi-bizia izan zela Iparraldean; esate baterako, ikusi besterik ez daude Hiriart-Urrutik, hizkera eredugarrian ondu zituen kazetaritza lanak *Eskualduna* aldizkarirako oraindik bizi zeino. "Jakin" argitaldariak atera zituen bildumatuta artikuluok. AINTZIART P. *Etienne Salaberri (1903-1981)*. "Bidegileak" saila. Gasteiz:Eusko Jaurlaritzaren Argitalpen Zerbitzu Nagusia, 2003. http://www1.euskadi.net/euskara_sustapena/bidegileak/indice_e.asp 2010-04-04

[r] "Hezkuntza". *Harluxet Hiztegi Entziklopedikoa*. 2010.

*XVII eta XVIII. m. etako pedagogoek hezkuntza naturalaren garrantziaz jabetu ziren, hau da, haurren behar psikologikoetara egokitutako hezkuntzaren beharra ikusten zuten. XIX. m. aren erdialdetik aurrera metodo pragmatikoagoak bilatu nahi izan ziren. XX. m. an eskola tradizionaleko metodoak berritu nahian, teoria eta eskola berriak ezartzeko ahalegin asko egin da; mende honetan, informatika, komunikabide eta teknika berrien garapenak hezkuntza humanistikoa eta beharren araberako hezkuntza teknikoa (gero eta teknikoagoa) lotzea zailagoa egin du*.

[s] "Propaganda". Encyclopædia Britannica. Encyclopædia Britannica 2009 Ultimate Reference Suite. Chicago: Encyclopædia Britannica, 2009.Encyclopedia Britannica 2005. Reference Suite. Britannica inc. DVD.

*Comparatively deliberate selectivity and manipulation also distinguish propaganda from education. The educator tries to present various sides of an issue—the grounds for doubting as well as the grounds for believing the statements he makes, and the disadvantages as well as the advantages of every conceivable course of action. Education aims to induce the reactor to collect and evaluate evidence for himself and assists him in learning the techniques for doing so. It must be noted, however, that a given propagandistmay look upon himself as an educator, may believe that he is uttering the purest truth, that he is emphasizing or distorting certain aspects of the truth only to make a valid message more persuasive, and that the courses of action that he recommends are in factthe best actions that the reactor could take. By the same token, the reactor who regards the propagandist's message as self-evident truth may think of it as educational; this often seems to be the case with "true believers"—dogmatic reactors to dogmatic religious or social propaganda. "Education" for one person may be "propaganda" for another.*

bakarrik N. Ormaetxeak; gogoratu besterik ez dago, gaurko egunean, ohiturak xuabetze aldera A. Lertxundi idazleak ere, *Hamaseigarrenean, aidanez* eleberrian egin zuen apustu-zalekeria krudelaren salaketa. Hor, apustugilea, hesteak airean –hitzez hitz─ hil egiten da proba basatiaren ondorioz (gizon batek bestearen sabel gainera jauzi eginez tabernako barratik behera hainbat aldiz).

3.6.1. Idilioaren bukaera

*Antzinekotasuna eta idilioa*

Antzinakotasuna darie, bai euskaldunei, bai euskal instituzioei, foruei. Hori defenditzeko lagun du Yvonne Verduzan-ek Humboldt, eta kontrako Aita Mariana espainiarra[67]. Euskal Herri idilikoa irudikatzen du, natura gozatsuki deskribatuz. Behin eta berriro agertzen da irudi hori, baita Pierre Espilengan ere, frantsesezko idazlea bera[68]. Auñamendi Entziklopediaren arabera, P. Espil Hasparrenen jaiotakoa da, eta bukolikoa da, arnas bergiliarrekoa. Berez *oso originala,* kritikaren arabera; F. Jammesen eragina omen du.

Ezin ahaztu A. Ibinagabeitiak Virgilio osoa itzuli zuela Alberto Onaindiarekin batera, garaitsu hartan. Erkiaga aldizkari honetako idazleak ere, badu horrelakorik. Kontuan izan, idazle lekeitiarra Bilbon bizi zela, eta bankaria zela lanbidez. Bere hitzetan (1950ko olerkia):

*Landa gizon banintz*
*Bizkaiko itsaso hasarreberan*
*Ta hogeigarren mendean*
*Horati eta Birgili ditut*
*Ene begien aurrean (...)*
*Hirian jaioa naizen arren*
*Halere min dut mendia,*
*Barren hontako maizterrak beti*
*Du harako egarria:*
*Goian zerua, zelaia behean,*
*Landan atsegin-alkia*
*Hiriko kale ta hango istiluak*
*Uzteko dun irrikia.*
*(...) Mendi-hegian ala haranean*
*negu nahiz uda gaztelu,*
*inoiz ez dio laborariak*
*aldiari iritxi belu;*
*haren urratsak betiro baratz,*
*barruan oharkeak leku,*
*mundu honetan nahien dudan*
*hantxe dut: lurreko zeru*
*Hogeigarrena dugun mendean*
*Bergili berpiz baledi*
*Hiri handiko bizitzearen*
*Asper kutsua hark ageri;*
*Giza bihotza lehen eta orain*
*Zorionaren egarri,*
*Landa-bizitzan baitu pakea*
*Landazale bihur bedi* [69].

*Lege-zaharra: Baserria/herria*

Buenos Airesen dagoela, 1952an, baserriko bizimoduaren goraipamena egiten du Muxika´tar Kindinek. Baita hiria gutxiesten ere:

> *Europa'ko erri zarrena, Euskalerria da. Gure baserrietan baño sendi zuzenagorik, txukunagorik, nunbait arkitu al liteke? Ez degu uste. Baserria da pakezko etxea; ez biotz ederraren ordez, diruak apaintzen duen jauregia. Baserriko jaunak —lurraren laguna, gerria makurtuta atxurrakin lanean bere kopeteko izerdiz lurra gizentzen dakina—, otorduetan, sendiarekin maira eserita. Aita'ren egitean, ez al du Alguztidun'ak nola bizi bear degun erakustera bialdu zigunaren antz aundia? Gaur, uri aundietako dotore jantzitako jakintsuak dirala*

*esaten digutenak; asmo okerrak gezurrez apain estaltzen ongi dakiten itzjario ustelak, geiegikeriz urrutiegi dijoaz. Baserriko jaunen ezpañetatik ez dezute entzungo gezurrik.*

*Gure baserrietako amonak bezin gozo gozo, nun abesten zaio seaskan aurrari?*

*Atxurrakin lanean, segalari edo aizkolari, astegunetan, pelotari edo dantzari trebe, jaietan; bertsolari, abeslari, euskera beti ezpañetan; nun mutil ederragorik? Baserritik igesi errira dijoan mutilla, urtez betetzen danean ez da izango baserriko aitona bezin maitegarri. Mutil ori, arlote bat, batzuetan; soñez dotore jantzitako a'tzerritar edenez kutsututako bat bestetan; euskaldun lore ederra, aberri arentzat, galdua izango da geienetan.*

*Eta errira joanda, euskera uzten duen neska, ene... ! ene... ! nungorako bidean ipintzen da! Nolanaiko zine ta gauerdiko dantzak, etxekoandre obea egingo al dute?*

*Euskera galtzen dan etxeetan, gure oitura ederrak aztu egiten dira. Gure mintzaera ederra apaintzen eta zaintzen biotzez, lan egin bear degu. Euskalerria ospetsu, euskerak egin zun. Euskadi'ko baserrietako bizitzaren arnasa, itzali gabe, lurretik zerura, euskeraz, beti ederra izango da, ta gure erri guzietan, apaiz eta alkate, euskera'ren lagun nai genituzke* [70]*.*

Baserriaren goraipamena egiten du Basarri kolaboratzaileak jarri zuen bertso-sorta batean, besteak beste gure hizkuntzaren gordailua delako; gainera, baserria da ohituren ispilua, arrazaren mendu gordin Jaunari otoitzez dagoena hirietako nahaspilatik urruti; gizaki aipagarrien sorlekua da eta hizkuntzaren sustraia, abizen eta herrien izenetan ageri denez:

*Baserritatik dute sustraya*
*damazkigun abizenak;*
*baserritatik iturburua*
*erri askoren izenak.*
*Baserrietan sortuak dira*
*izar dizdiratsuenak,*
*Euskalerria zerutaraño*
*jaso diguten gizonak* [71]

<u>*Arbolaren sinboloa*</u>

Gernikako hiria aitzakiatzat hartuta, behin eta berriz, egiten da hango “arbola santuaren” aipamena. Euskal foru-erakundeen sinboloa da, tradizio demokratikoaren erakusgarria, eta sasoia latza eta garratza izanagatik, haritzaren ezkurra salbagarria zaie eta betierekoa.

Biziki gogara eta iruzkin ugarirekin jasotzen da aldizkariaren orrialdeetan, “The oak of Guernica” William Wordsworth-en poema, non instituzio tradizionalen idealizazioa egiten den.

<u>*Arrantzaleak*</u>

Basarrik euskal langileen goraipamena egiten du populismoaren bidetik apika, arrantzaleena besteak beste.

<u>*Euskararen etorkizuna*</u>

Euskararen lekua dago erlijioaren eretzean, ohituren sehaskan, etxean. Amets eroak –fisika eta kimika euskaraz ematea bezalako handinahikeriak─ baztertu behar dira. Pertsekuzioa eta jazarpena egonda ere, gure esku dago euskararen sendabidea, etxe-barnean atxikiz[t].

[t] “Euskararen gaitz eta eritasunak”. *Gernika* 1949: *Aiton batek illobak bezala, gure semeak euskaltasunean azi lezazke; ta gure sinismen, oitura, jolas, dantza ta euskal gogoaren zaindári bikaiña izan diteke. Onek euskeraz Fisika, Kimika ta Matematikak irakastea baño geiago balio du. Gai oiek eta beste goi jakituria erderari utzita ere euskerari gelditzen zaio bazter polita: etxe-barrengoa, erri artekoa, Errelijioaren magal gozoa.*

*Amaren sinboloa*

Euskara ama delako sinboloa agertzen da “Ondarribi´tar bat”-en lumatik: ama poztuko litzateke, gu, semeak, zintzoak bagina, eta hizkuntza, dantzak eta ohitura zaharrak begiratuko bagenitu[72].

*Belaunaldiz belaunaldi*

Belaunaldiz belaunaldiko jarraikortasunaren irudia da aitaren ondotik datorren semea, sortu den habia aurreko aitak bezala maiteko duena. Euskara eta fedea (kristau ikasbidea) erakutsi diote gurasoek sehaskan[73].

*Lore bat bertso-sorta*

Euskararen sinboloa da lorea Basurkorentzat. Bazter batean erdi ahazturik dagoena. Haatik, bera du gogokoena[74].

*Natura gizakien lagun*

Natura gizakiaren laguna da, armonia dago kreatzailearen eta sorkarien artean; kezka ekologikoetatik urrun gaude.

Bestalde, eguzkiak *poztuten du gizona/ edertuz ludiya*. Arratsa atsegina da lanean ibili direnentzat[75]. Hona nolakoa den euskal arkadia:

*Euskaldunentzat, beti aurrera*
*Izan dedilla euskera,*
*Beste izkuntzak ikasi arren*
*Guria ez utzi galtzera*
*Dantza txukun ta, kanta zarrakin*
*Egin zazute gauz bera,*
*Emen bai dago ¿nun emen diña?*
*Oitura garbiz aukera.*
*Gure oiturak aintzat artzeko*
*Biotz otza dezutenak,*
*Arretaz artu, pentzatu ondo*
*Anai on baten esanak,*
*Maitasun goxoz, asmo txar gabe*
*Dijoaz nere itz danak...*
*Gu seme zintzo baldin bagera*
*¡Ai! Zer poza gure amak* [76].

*Euskaldunen harrotasuna*

Dominique Dufauk euskaltasunaren itxura berezia, eta, aditu batean, exotikoa azaltzen digu. Euskaldun makilaz ari dela, bertoko herritarra barregarri utzi duten arrotzen kontrako erremintatzat du. Euskaldunaren harrotasuna honoko elementu hauek irudikatzen dute: errebotea, kapelua, dantzak, kantak, euskara jakintsuen ikergaia izatea, agintariek prezatzen duten delako *makhila*, eta horietaz gain, museo etnografikoan aurki daitezkeenak: *oihalak, bacherak, orhoipenak, janariak, saltegiak, dirutegiak...* Estimazioa baitzuten orduan, eta euskalduna bere buruarekin pozik egoteko modukoa zen/da. D. Dufauk argi utzi nahi du euskaldunen etxea denei irekia dela, baina, nagusia, euskalduna bera dela.

*Antropologia: L´essentiel*

Jean Arramendyren arabera, etorkizunerantz goazela euskal arimak Antzinekoaren eta oinarrizkoaren zentzua zaintzen laguntzen digu[77].

*Elebitasunaz*

Gabino Garrigak, bere “El apostolado, característica de los santos vascos” artikuluan[78], dugun elebitasuneko edo hirueletasuneko ezaugarri horrek kristautasuna zabaltzera garamatza euskaldunok, zibilizaziotik urrun, eta hemengoaren antzeko enda berezien bila. Bizitza aktiboa eta kontenplatiboaren arteko harremanez ari dela, uste du euskal sainduari gelako isiltasuna beharrezkoa zaion arren, hobeto dagokiola arimak irabaziz lan eta borroka egitea, eta Jainkoarengana heltzea.

*Nabarmentze-zalekeria*

Zer irabaziko luke Euskal Herriak, hemengoa izanik ere hemengotarra ez dela aldarrikatu-eta, gure ezaugarri bereizgarriak gurata apalesten dituen autorearen etsenpluarekin? Ordea, gure altxor humanistikoa orotariko balioek aberastu behar dute, pobretuko ez bada. Izan ere, gure pentsamenduak ezinbestekoa du ñabarduren aniztasuna, eta, nortasunari eustearen kontua gaizki ulertzeagatik, gregarismoari eta taldekeriari atea zabaltzea gerta liteke, euskaldunoi erabat baztergarria iruditzen zaigun jokabidea[79].

*Indibidualismoa*

Dena, ordea, ez da distiratsua, ezta gurean ere. Beste luma batek zorrotz agertzen digu bere ustez nolakoa den Baskoniako seme-alaben izaera. Artaldea ez omen zaie atsegin, zinez baitira indibidualistak. Mahai ondo prantatuaren aurrean aldarte oneko alaitasunez azaldu arren, neurri batean zaputzak dira. Mendi bakartietako arima dute, eta euren izaera burgoitik datorkie matxinatzeko joera[80].

*Eurozentrismoa*

Batzuetan eurozentriko samarra da *Gernika*ko idazleek egiten duten humanismoaren interpretazioa. Horren lagin gisa, begiratu M. Astiz Dorrearen iritzia: euskaldunok munta handiko erronka kolektiboetan hartu dugu parte Europako etorkizunerako une garrantzitsuetan. Batetik musulmanen kontrako borroketan, bestetik Amerika aurkitu eta kolonizatzeko zereginetan;gainera, gure jaun argituek ekarpen baliotsua egin zuten Berpizkundean; ildo beretik, gure teologoek giza-nortasunaren alde egin dute, misiolariek orobat.

Orduko garapen industrialean (1948), aukera berria zabaldu zen euskaldunak egoteko Mendebaldeko humanismoaren aitzindaritzan[81]. Humanismoa ulertzeko beste era horrek Italiako Berpizkundekoa dakarkigu gogora. Borgiatarrak, N. Makiavelo eta, haiek ere, klasikoekin solastatzen ziren; N. Makiaveloren hitzak horren lekuko:

> *Evenings I return home and enter my study; and at his entrance I take off my everyday clothes, full of mud and dust, and don royal and courtly garments; decorously reattired, I enter into the ancient sessions of ancient men. Received amicably by them, I partake such food as is mine only and for wich I was born. There, without shame, I speak with them and ask them about the reason for their actions; and they in their humanity respond to me.*

*Folklorea:*

<u>Berrikeriak</u>

Isidoro Fagoaga ari da herri kantutegiaz han hemenka. Aurreskuaren erregelak hartzen ditu hizpide. “Elai-alai” dantza-talde gernikarraren pausuak jarraitzen ditu, eta folklorearen arloko *berrikeriak* ez ditu gogoko gehiegikeria iruditzen baitzaizkio..

<u>Izpiritu nazionalista eta folklorea</u>

XIX. mendetik aurrera nazio europarrak egituratzen zihoazen, eta elkarrengandik bereizteko zantzuak herri-ekarrien abaroan gorpuztu ohi ziren, besteak beste, benetako zein asmatutako poesiaren, elezahar, ohitura eta dantzen itzalpean. Ordea, eta itxura guztien arabera, herriak maiz bizi izaten dira auzotasuneko harreman estuetan, nahiz eta originaltasun-irrika erromantikoak bestela ikusi nahi zituen gauzak. Uste denik eta kantarik edo dantzarik zaharrenak ez dira lekuan lekukoak, bai aldiz sarri sortu berriak, eta ez gutitan aldameneko errietan jaioak [82].

Artearen alorrean, elementu folklorikoak nolabaiteko nartzisismoa asetzeko erabili ziren, eta, horrek herriei bizkortzen eragotzi zien. Gehiegizko buru-estimua dela eta, euskaldunek beren burua autokonplazentziaz ikusten dute, eta, fenomeno hau, kanpokoei bitxi samarra iruditzen zaie. Ondikozko fase hau agorra da, eta harantzago joan nahi dutenek esperientzia berrietan murgildu nahi dute askatasunez, nahiz ez izan beti arrakastatsuak.

Zenbait ultramontanok, agintekeriazko jarrera batetik, bilakaera hau eragotzi nahi dute, aurrerazaleei, trabak ipinita. Errusiarrak dira mundu osoari fruitu iraunkorrak eskaini dizkiotenak herriaren musika-altxorra arrakastaz birsortu dutenen artean.

Badira, halaber, folklorea birsortzeko ekimen honetan, saihestu beharreko ereduak, hala nola *bilbainadas* izenekoak, zinez arbuiagarria den kanta mota.

Eraikitzeko asmoz eginiko kritika osasungarria izan daiteke gaizki ulertutako jarrera harroa duten euskaldunentzat. Aszetek esana da Jainkoa Jainkoa beragatik utzi behar dela bazterrean; horretara, folkloretik zerbait urrunduz, adierazpen hau gehiago goraldu dezagun.

*Mistifikazioa*

Euskararen etorkiarekin egiten den mistifikazioa salatu egiten du Orixek bere zenbait artikulutan aldizkari honetan. Euskararen antzinakotasunak, esoterismoan barrena ibilaldiak egitera bultzatzen du Camille Pitollet[83]. Adibide gisa, ikus dezagun nolako etekina ateratzen dion *ameca* (hamaika) hitzari: hitz hori Biblian agertzen da, eta liburu bereko beste zenbait zenbakirekin lotzen du; Apokalipsian, Piztia, 666 zenbakiarekin parekatzen da. Ekuazio hauekin: 6·11=66, 66+6=666, eta horrela *ameca* hitz hori Apokalipsiko piztiari dagokio, aldez edo moldez. Altxor ezkutu hori kontuan hartuta, idazle hori beldur da ez ote den hizkuntza galduko bere etorkiaren misterioa eta gordailua zulatu eta argitu aurretik.

*Izpiritu demokratikoa*

J. Mirandek euskaldun zintzoaren bertsio demokratikoa arbuiatu egiten du:

> *Eze, nahiz oraiko Euskalherritar bakhetsuak ahantzi duten, dirudinez, bi aldiz gure arbasoak beren Ipharr eta Hegoialdeko hauzoen bildurra izan ziran: lehen aldikotz, Pyreneuz haraindiko aldiriak Garonna ibairaino —eta harago ere— errhautsi, soildu edo bereganatu zituztenean Nafarroko menditarrek; bigarrenekotz, Hispaniaren reconquista zela zio, Nafarrtar Statua eraiki zutenean Afrikatarren aurrkha... bai eta hauzo khristauen aurkha ere. Hauk dira gure historia moderneko egintza nagosiak; hauiengatik batez ere, zuzenbide dugu Euskaldun izenaz burgoi izaitera, enda sentho eta azkarr bat izan garela baiterakhusate; enda sentho azkarr ororen antzora hauzo ahulagoren bizkarretik hedatzera eta aberastera ekharriek ginelarik. Egun, aldiz, erran-delako abertzale zenbaitek, Euskaldun zaharrak izan diren zaldun aidor, guduzaleen spiritu aristokratikoa erdeinatuz, haren lekhuan beren gisako Euskaldun berri, bakhezale, hauzo on eta puska-onen spiritu demokratikoa "a la française" eredutzat iarten deraukute. Nik ez dut erranen spiritu berri hori gure dekadentzaren kausa izan danik, —bainan bai dekadentzaren ondorio eta agerkhun dugula. Frantzitarren ariora demokraziaren amets urdinekin lokhartzen den herriak zaharrtzen eta akhitzen ari dela emaiten du ikhusterat*[84]*.*

3.6.2. Intelligentsia euskaltzalearen beharra

*3.6.2.1. Hizkuntza*

Hona euskararen inguruan tarteka-marteka aldizkariaren zenbakietan barreiaturik aurkitu ahal izan ditugun zertzelada zenbait.

<u>Euskara atzentzea</u>

Badugu, *avant le mot,* Soziolinguistikaren ikuspegi gordina irakurtzerik. Klase gidarien jokabideaz dihardu E. Erkiagak[85]:

> *Laburzki erran: handizki, aberats eta iakintsunak hasi ziren lehenik euskararen ahanzten eta baztertzen. Orain, iarraibide okher hortaz, herria berdin hasi da. Anhitz herritako aphezek ere, utzi dute euskara, nahiz eta eliztarrik gehienak iakin eta mintza. Monjatoek aintzina utzi zuten...*

> *Guzti hoik, goikoak alegia, berriz ere euskararen alde baldin hasiko ba lira —Kataluñan ehun urthe ta gehiago hasi ziren bezala— gure hizkuntza salbatua lizateke oraindino. Horixe dugu bide bakhar, Krutwig jaunak adiarazi duenez berriki, lehen bertze batzuek errana: "Euskara kultur hizkuntza bihur dezagun; aitzitik, laster hilen da".*

Herri xeheak ere badu bere partea:

> *Euskalduna, Azaolak erran berri duen bezala, ezta aphala, herabe eta harro baizen. Eta harrokeria hortan, euskara ¡baserritarren eta arrantzale behartsu eta eziakinen mintzo noharroin hori! zabartu eta baztarturik, bertze hizkuntzaz hari da. Eta huna, orain, ez arbasoena, geure buruon bekhatu ahalkegarria baizik. Orain, nire ustez eztira euskaraz komunzki mintzatzen, erdara ongi eztakitenak baizik. Baserritarrak berak erdaraz ari dira. Naparroan, Bizkaian eta Gipuzkoan bertan, hiri nagusittoetan euskara hil hurran da. Hirixkaetan ere herio minak io du. Gure artean arrantzaleak bait ditugu iende eziakinena, hauk dira oraindano euskaraz mintzatzen direnak.*

<u>“Sauver la face”</u>

Frantsesezko esamolde horren bitartez, J. Mirandek kritikatu egiten du aldizkariaren lerro editoriala, batez ere euskararen trataerari dagokionean. Duten jokabide hori aurpegi garbiketa hutsa dela dio paristarrak; bestelako kalifikatiborik ez baitu merezi lantzean behin argitaratzea olerki arrunt batzuk zein atsotxo edo amandre (*bonnes femmes*) batzuen kontutxoak[86].

F. Krutwigek, euskaldunon hanka sartze endemiko bat aipatzen digu, alegia, interes unibertsaleko gairik ez dugula jorratu euskara kutsatu gabe gordetzeko asmotan; kataluniarrek bide zuzen horri aspaldi ekin zioten.

<u>Euskara kultura-bideetan</u>

Gerrako parentesiaren ondoren eta 50-60 hamarkada honetan hasi ziren berriz ahotsak aldarrikatzen euskara kultura-tresna bihurtzeko zegoen premia. F. Krutwigek eta L. Villasantek ekin zioten prozesu horri, lapurtera klasikoaren bitartez; aipagarria da orduko batzuek zuten beldurra, ez ote zen gure hizkuntza hau *völapuk edo esperantu bihurtuko, ots, giro eta arimagabeko izkera utsal* [87].

<u>Euskara jasotzea neologismo bidez</u>

Orixek euskara noranahikotze bidean neologismoen beharra azpimarratzen du. Aranatarren gehiegikerien ondoko giroan ere euskarak aipatu bide horretatik jo behar duelako arrazoia ematen du; hizkuntza landuak horrelakoen premian daudela-eta, honela idazten du:

> *La ley del menor esfuerzo. Como el componer palabras supone dominio del vocabulario, y algún esfuerzo, a veces grande, en hacer la adaptación, huyamos de la ley cómoda mencionada, que, si es inevitable en la masa, es obligación y tiene su mérito consiguiente en el escritor individual. Aun en español y en francés, a pesar de su limitada composición, pudieran haber aprovechado formaciones más populares, más vivas, sin aceptar palabras inadaptables a menudo fonética y morfológicamente del latín y del griego. Esta mañana, primera lluvia de la temporada, pregunto al mozo encargado si él tenía retirado el pluviómetro. —¿Cómo?, me responde. —El pluviómetro, le repito. No lo entiendo. —El mide-lluvias. ¡Ah, sí! Al momento entiende mi palabra que jamás había oído. Es la diferencia entre la palabra viva y la fósil* [88].

Asaldatu egiten da, hizkuntza apailatzea debekatzen zaigulako, ipuinak, izkirimiriak, eta berriketak idaztea baino aizu ez balitzaigu legez, goragoko eginkizunetara jo ezinik, gainerako herriek egin ez bezala[89]:

> *En el Congreso de Estudios Vascos de Biarritz hubo —me dicen— un congresista que se opuso fuertemente a la creación de neologismos en nuestro idioma, y prometió atacarlos con toda su alma. ¿Querría aquel congresista negar*

*a nuestro euskera lo que no se niega al francés y al español ni a ninguna otra lengua, y que, por más cultivadas que estén todavía necesitan crearlos continuamente? ¿Querría reducir las posibilidades nuestras al ideario de carboneros, labriegos y marinos? No, seguramente...* [90]

Zilegitasuna dugu geuk ere neologismoak sortzeko, are gehiago, berebizikoa da euskarak horretarako duen erraztasuna eta aberastasuna. Eta jatorrizko hizkuntzako idazkian bilatu behar da, sarritan, itzulpenetan batzuetan sumatzen den eskasia,. Aitzitik, euskararen gramatika aberatsa da, eta esamoldeetarako duen balizko erraztasuna goraipatzen du[91]:

Ibinagabeitia´tar Andimak, lexikoaz den bezainbatean, maiz gaitzetsitako garbizaletasunaren alde egiten du, erdaratiko gehiegizko maileguen kontra arituz[92].

Hizkuntzaren helmena

R. Lafon, Euskaltzaindian sartzeko hitzaldian euskara jasoa behar dela nabarmentzen du J. Vendyes hizkuntzalariaren hitzak autura ekarririk: *hizkuntza baten irispidea, dituen hiztunen heziketaren araberakoa da*[u]. Eta, ildo beretik: *hizkuntza bilakaera eta bilakaera horren gizarte-baldintzen artean harreman estua dago*. Gizartea garatzeak berarekin darama hizkuntza norabide jakin batean:

*Nahi degu euskerak ez dezan bizi txar eta beartsua ereman, bañan bizi luze eta ospetsua. Beraz ez dezagula aztu izkuntzak, bizi diran gai guziak bezela, jaiotzen, aldatzen eta iltzen dirala, eta gertatzen zazkioten guziak egiten dirala tinko dauden lege batzuen arauz. Lege oek azalduak dira Vendryes jaunaren liburu eder batean. "Le Langage" deitzen danean. Beti atsegingaria zait gogoratzea neronek zenbat zor diodan olako irakasleari. Aren izena emen, Euskaltzaindiaren aintzinean, aitatu bear det: euskera bereziki ez ikasiarren, bere adimenezko indar guziaz maiz erakutsi duelako euskera garrantzi aundiko gai bat dala jakintsuentzat. Euskera ez zaio arrotza. Beti erakarri nau euskeraren aztertzera. Bere liburu onen azkenean, gai au aztertzen du: "le progrés du langage " mintzaeraren aurrerapena. Utzi nazazute lerroren bat aitatzera: " Il y a entre l'évolution linguistique et les conditions sociales où évolue la langue un rapport évident. Le dévoloppement de la société entraine le langage dans une voie déterminée" " La portée d'une langue tient au mombre et au degré d'education de ceux qu´il a".*

Euskara jasoa, bere esanetan, tradizio landuan dago. Tradizio hori, ezagutarazi eta garaira egokitu beharra dago:

*Galdegin dezagun eun bat Euskelduni, nolanai artuta, Dechepare, Axular edo Bilintx'en izenak zer iratzartzen dioten gogoetan. Bildur det geienen gogoak lokartuak egongo dirala. Alaz ere, Euskeldunak, ikastegietan orain diranak edo luzaroan izan diranak, ezagutzen ez badituzte Euskeldun idazle aundiak eta aen obra ederrak, zailki sinisten dute, edo ez dute sinisten, euskeraz gai aundi eta gorarik esan ditekela. Orduan geldi-geldi lerratzen zaiote adimendura gogoeta au: zergatik, zertako euskera erabili? Dembora eta lana galdu! Izkuntza alako apala eta beartsua zertako aurrei irakatsi?Bañan irakurtu badituzte euskerazko obra eder batzuek, adituko dute euskeraren ezagutzea gogoaren aberasgarria izan ditekela. Ondikotz, obra eder onen ardiestea ez da orain erreza. Geienak ez dira berriz argitaratuak. Gañera, euskera zarrez egiñak diranak zallak dira irakurtzeko. Oraingo irakurlentzat apaindu bear dira. Artarako bear da lan asko, bai'ta ere diru asko.*

Gramatika kontenplatiboaren beharra aipatzen du. Gramatikari kontenplatiboek besteei langairik baliotsuenak eskaintzen dizkiete, izpiritu libreagoa eta malguagoa eratxikiz onuradunei.

[u] *La portée d´une langue tient au nombre et au degré d´éducation de ceux qui la practiquent (...) il y a entre l´évolution linguistique et les conditions sociales où évolue la langue un rapport évident. Le développement de la société entraine le langage dans une voie déterminée.*

> *Bañan agian esango zait: "Zergatik billatu puxka txikienetaraño zertzaz ezberdiñak diran bi errialderen edo bi gizonen ere mintzaerak? Erantzungo det: puxka oetaik batzuetan zerbait garrantzi aundikoa agertzen da. Bestalde, entzun zazute, otoi, Pierre Lafitte jaun apezak zer esaten duen " Grammaire basque " deitzen dan liburu ederreko aintzin solasean. Izkuntzak aztertzen dituztenetatik batak billatzen dute nola mintzatzen diran gizonak, besteak nola bear luketen. Esan dezagun bereala Euskaltzaindiak bi motetako jakintsu batzuek beregana deitu dituela. Billatzen dutenak nola mintzatzen diran gizonak Lafitte jaun apezak deitzen ditu " begiztatzaileak " (grammairiens contemplatifs). Indartsuki esaten digu aek gorenean ipintzen dituela, "Disons tout de suite que nous avons la plus haute estime pour les grammariens contemplatifs"). Ori ola adierazten du: "C'est eux qui fournissent aux autres les matériaux les plus précieux et peuvent leur donner par surcroit un esprit plus large et plus souple. "Aek dituzte biltzen bestentzat bear dituzten gaiak, bai bikañenak ere, eta gañera aen kokamenari esker dezakete eman zabaltasun eta zaulitasun aundiagoa.*

Ez du ahazten, inola ere, diruaren beharra euskal lanak argitara daitezen[93]. Aipagarria da bere Euskaltzaindirako sarrera hitzaldiko beste ohar bat: euskaldunontzat, R. Lafonek, bakartasun harroa ez dauka gomendagarritzat:

> *Jakintsuak billatu eta erakutsi bear dute, alde batetik zertan Euskeldunak beste errialdeko gizonak ez bezelakoak diran, alde bestetik zertzaz lotuak diran beste gizamotekin eta gizartekin. Badira lokarri asko Euskeldunen eta gizamota edo gizarte askoren artean; gizamota eta gizarte oetatik batak urbil daude, besteak urrun, bai lur zabalean bai mendeen iraupenean. Euskeldunak ez dezatela uste izan, beren aspaldiko ospe andiaren begiratzeko, egon bear dutela "dans un splendide isolement", bakartasun arro batean. Euskeldunen eta beste gizonen artean diran lokarriak, bai lodiak bai meak, bai aspaldikoak bai berriak, ikusten ditugunean, obeki ulertzen degu Euskeldunak zertan zerbait bakarrak egiaz diran. Jakintsuak osoki berezitzen balituzte Euskeldunen gaiak, Euskeldunen gizabidea, aspaldiko edo oraingo beste gizabidetatik, gezur esango lukete; gañera, irakurtzen edo entzuten dituztenen gogoak itsutuko litukete eta biotzak nastuko.*

Gai arruntak ez direnak ere euskaraz

A. Ibinagabeitia erlijio-formazioko euskaltzaleak, J. Mirande olerkari ikonoklastari bisita egiten dio Pariseko deserrian. Badute zerbait elkarrekin lotzen dituena:

> *Egia aitortu bear dizut, zuk nik bezin ondo dakizun egia. Euskera gutxitan aintzat artu dute gure iakintsu eta eskolatuek, orregatik gure erri xeak ere euskera gai arruntenak erabiltzeko baizik ez dala uste du. Gure olerkariek gainera, gutxi batzu kendu ezkero, gai arruntenak besterik ez ditute erabilli beren poemetan. Lurbira zabaleko ta iakintza-maila orotako gai den errankizunik ez dute iñoiz ere poemak ernerazteko erabili. Eta onek kalte aundia sortu dio gure aberri izkerari. (...)Nere poematan nereak baino len euskeraz idatzitakoen eraginik ez duzu arkituko poesimuinari begiratuki. Ez dut ukatu nai olerkari bikañak ere izan ditugunik: or daude Orixe, Zaitegi, Iratzeder, Mitxelena, Erkiaga, bizidunak bakarrik aitatzeko, guztiak olerkari garaiak. Zaitegi'k bear bada, gure artean bide berrienak urratu ditu. Besteak ere personalitate nabaria ageri dute. Bainan nik nere olerkietan orainarte erabil ez diran poesi-ekaiak artu ditut. Ez da arritzeko nik darabilzkidan gaiak nere aurretiko euskal-olerkariak ez erabiltzea; geienak eliz-gizonak izan dira eta ezin zetzaten zenbati sujeta ukitu ere. Eliz-gizon izan ez diran beste olerkari asko ere, erabe ibili dira gure Parnasoan zenbait gai ukitzeko beldurrez. Ukitu baditute ere apaizak uki zitzake neurritz uki ditute. Ondo dakit nere poemak gogorxko ta gordinsko ere aurkituko ditutela euskaldun geienak. Askorentzat eskandalu gorri ere izango dira. Bainan besten esamesak diralata, ezin nezakeon nere barneari ukorik egin. Nere poemak nik sentitu bezala idatzi ditut eta momentu bakoitzean nere arimaren errainu bizi dituzu. Poematan irauli ditut nere maitasun, maitakeri, sinismen ta siniskeriak.*

*Philosophiari buruz ere nerak oro iaulki ditut, neuk entelegatu ta pentsatu bezala. Antxen irauli ditut nere atsegin eta etsipenak ere. Etsipenak ugarriago gure bizitzaldi au etsipenez oretua esan bai diteke. Ezkorregi irudiko zaizkie nere olerkiak geinar. Ezin ditezke bestera izan ere baikortasunak ene biotzean oraindik ezpaitu io. Iñoiz ots-egiten ba du nere barne-bortan, ori ere nere olerkietan gatzatuko dut. Ene barne egia izan ditezen alegindu naiz. Ori bederik iritxi dut, zenbait eskandalizatuko ba dira ere. (…)*

*Gure olerkariak —Bernard Dechapare ez beste guztiak— maltzurregi ibili dira beren barneko naikariak estali eta itotzen ere. Ez dute gizonki beren amets eta ustekizunak azaltzeko kopetik izan, eta orregatik zenbaiten lanak utsal eta azal xamar ageri zaizkit. Egi-indar ori —ez derabilt emen EGI philosophi sentsuz—, bearrezko genduen, eta alderdi ortatik zure lana goragarriena duzu.*

*(...) Galdea da: euskal giza-landurik nai ote dutenentz. Nik izkuntza eli bat ikasi ditut, hizkuntzazale naiz eta; baina ez batetan ez bertzetan ez dut gure euskeraz bezalako literatur-ezik arkitu eta zure biotz-zolan ori egia dala badakizu zuk ere beste izkuntzetako literaturak ikertu bai dituzu. Nik uste dut lapurtar-klasikoaren aldeko igikun au dela izan euskera kultur-bidean iarteko azken urte auetan egin dan saiaketa andiena [94].*

Ez da bakarrik hizkuntza kontua, gizakiaren bestelako ikuspegia agertzen da. Maltzurkeria salatzen da, gizakia ez baita xaloa eta zintzoa humanista klasikozaleek nahi duten bezala, ostera, baditu bere irritsak eta nahikariak, poetak ostendu beharrean agertu behar dituenak, J. Miranderen aburuz.

Poesia eta hitz laua

Hizkeraren ulergarritasunaz ari dela, Orixek, zailtasunaren araberako neurriak jartzen dizkie bertsolariei:

*Bertsolari ta koplakariek erriko bestak alaitu ditzatela; bai; baiñan geiago estutu bear zaie neurria, ene ustean, puntu, oin eta azken itzak ongi konta ditzatela eskaturik. Bestela, erreztasun soberaz zabarkerian erori bait dira. Orretarako da bertsolari gudua.*

Hitz lauz aritzeko ere, hizkuntzaren gehiegizko zurruntasuna baztertu, eta herriari iritsi ahal zaion hizkera mota proposatzen du:

*Bizia ez da ordea Poesi bakarrik. Biziera gauza arrunta, lazoa da. Batzuetan irritsua; geienetan garratza. Prosaikoa diote erderaz. Izan ere gure artu-emanetan, elkarren artean mintzatzeko zerbait adierazteko itz neurtuz ez ezik itz lauz, izketa arruntaz egin oi degu. Beraz egunero uste gabe prosaz ari gera Mr. Jourdain bezela. Nola esan diteke prosa euskeraz? Axular eta Etxeberri'k "itz-lazo, itzlaño" erabili zuten. Onelako liburuak bear ditugu itzneurtuetan baño gehiago irakurleari erakutsi ta atsegin emateko.*

*(...) Liburutxoari ipiñi dion itzaurrea ere burutsua da ta bertan ematen dizkigun arau eta zuzen —bideetan zer ikasi ba-dago. Onoko onu oiek: "ez dezagun erria gogait eragin irakurgai ulerkaitzez". "Erriari euskal jakintza erakutsirik goitu dezagun euskera". Urrezko itzak.*

*Agian norbaitek ordea akatz au arkituko dio: itz garbi geiegi ta geitxo orraztua ez ote dagon batzuetan; zailtto edo... bestetan [95].*

Literatura: alegia bat

“Musde Pitzi” alegia ematen digu Lecumberrik, eta bukaeran irakaspena agertzen zaigu. Balakugileen kontrakoa da. Fabulako katua eta emakumea bakarrik elkarrekin bizi ziren eta, azkenean...

*Pitzi-ren burua eskutan hartua*
*Ttipiana behin jostetan ari zen*
*Fereka, muchuka, altzoan gatua*
*Ahantz aphur on bat holachet jiten zen.*
*Pitzik ere nahiz ferekak ordaindu*

*Nagusi maitea nahiz lausengatu*
*Bere aztaparrez burua zion bildu*
*Bainan arpegia zuen zarrapatu.*
*Arpegi eztia larrutua nola*
*Ttipiana etzen, ez da harritzeko,*
*Batere doatsu. Pitzik zuen hola*
*Sarraskatu bere ustez laudatzeko.*
*Gertakari hunen erakaspena da*
*Maltzurren, zozoen elhe ferekeri*
*Ihes egin beti, ahal balin bada*
*Horrela baztertuz hainitz istripuri* [96].

Alegien generoari buruz, alegiaren jantziaz egiten den alegoria morala dela ikusten dugu. Gizakiaren munduaren gaineko hausnarketa eta meditazioa dugu. Balioeste moral hau pragmatikoa da, eta alegigintzaren kritikari baztuen idurikoz ez biziki goitiarra. Hori dela eta, zenbaitek ez dute oso egoki ikusten alegia erabilera pedagogikorako. Alegien balio pedagogikoa legoke konturatzean adimena eta azkar izatea ateratzen direla gailen gatazkaren aurrean. Islatzen duten gizartea, gogorra da, errukigabea[97]. Genero herrikoia den aldetik, euskal tradizioan behin baino gehiagotan erabili da (Artxuk, Oxobik, M. Zabalak, A. Mogelek, Goietxek...). “Musde Pitzi” honetan ematen den irakaspena ere, nolabait mesfidantzaz jokatu beharraz-eta, ez dirudi oso humanista, aldizkariko tonu orokorrari ez dagokion heinean bederen.

<u>Laffiteren derrotismoa</u>

Orixek euskararen gorabidea du gogoan aurpegiratzen dionean P. Lafitteri euskararekiko jokabide diglosikoa:

> *Si los trece años anormales que han pasado hubieran sido continuación de los felices que dejamos, para esta fecha se hubieran publicado cosas bien interesantes. Si no obras perfectas, porque estamos en período de aprender unos de otros, sí fragmentos que no hubieran caído en el vacío, por más que se pretenda. El Señor Lafitte contrae una gran responsabilidad ante la lengua vasca. La ventaja que le da su puesto, no le autoriza a ensañarse con gentes que no pueden defenderse. Si nuestra situación no vuelve, la lengua vasca en los Bajos Pirineos (en la Península habrá fallecido) seguirá viviendo la vida precaria que le concedan los vascólogos derrotistas, que además escribirán en erdera. Cinco trabajos publica Lafitte en el solo número citado de Eusko-Jakintza: todos ellos en francés. Otro sexto, en francés también, en la Revista Ikuska. Y, oh colmo! en Herria publica una composición en verso francés, del gusto de nuestros días. No venga diciendo que hace veinte años dirige publicaciones vascas... populares, claro está. Por qué no ensaya escribir en vasco lo que escribe en francés, para el pueblo vasco cultivado?* [98].

*3.6.2.2. Gizartea. Herriaren maila jasotzen edo “gauzak behar diren bezala”*

<u>Klase gidariak</u>

Klase-gidariek eurentzat hartuz gero euskara, herri xeheak jarraituko dio. Hori, alabaina, ez da gertatu, klase gidariek euskara arbuiatu egin baitute. Euskal Herrian garbizaletasunak aurreikusitako ondorioen kontrakoak izan ditu, eta hiriak erdararen esku utzi ditu. Hori izanda Krutwig´tar F. K.-ren diagnostikoa, proposatzen baitu Grezia gure sehaska jatorrizkotik edatea[99]:

> *Gure herriaren kultura zuzentzen duten motak' euskaldun bilhakatu-beharrean' erdaldundu ziran. Burutik zetorren jarraibide gaitzak'populuaren arimari nora-joatea ta nori-behatze khendu zerauzkion. Euskalherriaren mota influentzadunek' jarraibide ona eman eta bethi edozein themaz euskaraz mintzatu beharr zuten, bainan honezaz kontra' errdaraz baizik hitz egiten etzuten. Euskaraz eduki beharr zukean egokera garaia etzedukan. Buruak bere hizkuntza vernakula gutietsi zuen, herriak jarraibideari begiratu zeraukon eta berdina egin zezan.*

> *(...) Bainan Euskalherrian' Europako nazionalismuaren iratzarrtzeaz' kabylkeria jaio bide zan, eta XIX mendean' ordudano batarzuna eduki zuen euskara bere uniformidatea galdu zuen, eta edonork bere buruarentzat literatur hizkalki bat eratu beharr zuela dirudi. Honela batzuek' edozein hizkalkiz ta hizkalkittoz izkiriatu beharr zela uste zuten. Honelako ezjakintzaz euskara aphala ahuldu zuten eta ahultzen dute ta ahultzenago. Guztiok bainan ba dakigu linguistarentzat hizkaldietan bizirik dagozen tipikuntzak interesse handia dadukatela. Bainan izkuntzak gizartean eduki beharr duten prestijea kulturdunek erabilten duten hizkuntzaren bidez egiten dela Philologiak derraku; hartakotz kulturdunentzako hizkuntza egin ezpa dezagu ezin dezakegu gure hizkuntzaren prestijea handiago. Orobatu hizkuntza eduki beharr dugu.*

Arazo bera aipatzen du A. Ibinagabeitiak J. M. Hiribarrenen *Euskaldunak* poema aipatzean: *Betikoa... Oraingo jaunak ordukoak bezala, ein berean aurkitzen ditugu, euskerari ardura tipiena eskeñi gabe, batez ere jaun jakintsuen artean* [100].

Bide beretik, zera aipatzen da: *Ezen, gure zaiñetako odol beroa eskeintzea, burutaldi batean iltzea errezago da, alajinkoa, egunero ordu baten nekea euskerari emanez bizitzea baiño* [101].

Zakarren kontra, ikasien alde

Dominique Dufauk euskararen erradiografia egiten du. Maileguei dagokienez, aipagarria deritzo hizkuntzak hitz berriak bere kasa taxutzeko duen joera emankorrari. Hona hemen Soziolinguistikaren arloko bere diagnostikoa: denok *atseginki, goraki, eta amultsuki* mintzatu behar dugu; jende ikasiek landu egin behar dute. Aldiz, badira zenbait *zakar* euskarari trufa egiten diotenak; euren iritziz, euskaldunek ez baitute berbeta maite, ez beratan idazterik, ez irakurtzerik; eta, gainera, hitzak ebakitzean silabak jaten dituzte, pipatzen ariko balira bezala[v].

Herrikoitasun hertsirik ez

Orixek ikusten du neologismoak sortu beharra euskara noranahiko egiteko. Neurriz erabili beharrekoak izanda ere, ez da beldurrik izan behar bide horretan, gainerako hizkuntzek ere horrela jokatu baitute.

Herrikoitasuna ez da modu hertsian ulertu behar. Irakurle landuari eman behar zaizkio bere neurriko irakurgaiak kopla eta ipuinez aparte, horrelako euskaldunak gutxi izanda ere[102]:

> *Hay que hacer frente a todo. Así es como hemos oído conferencias sin color, olor ni sabor, huyendo el conferenciante de toda idea comprometida. Eso es todavía peor que usar neologismos.*
>
> *"Lo popular, lo popular" me está zumbando en los oídos. ¿Y qué es lo popular?*
>
> *¿Quién es el pueblo? No es tan fácil la respuesta. El mero pueblo lector no existe. El que lee vasco en nuestro País peninsular es Sacerdote,*

---

[v] DUFAU, Dominique. “Ikhas Euskuara”. *Gernika* 14. Enero-Marzo 1951: 29-31.

*Euskaldunak badu, —aithortu behar dugu—, kostuma bat, halako lazakeria bat: makhurtzen eta hitz-erditzen ditu errexki, aditzen edo erraiten dituen elhe hainitz. Bizkitartean, ohartuak gare beren negurrietan iskribatzen dituela gaizki adiarazten dituen hitzkuntza hek berak.*

*Zakar batek nahi izan gaitu sinhetsarazi piparia delakoz dela Euskualduna hitz erdiz mintzo.*

*Aparantziaz, pipariek ez dute, sekulan, kortzik idekitzen pipa ahoan mintzo direnean. Beraz, kearekin iresten dituzte hitz gehienak, maiz hoberenak, eta aditzaileek hartzen dute ahal dutena.*

*— " Baditake! " erranen duzue. —" Izan ditake"! diogu guk.*

*Hori guziak hola edo dena den, guri da, eta guzier, onhestea Esukualdun egin bide hertsienaren manupea bethi garbiki erabiliz Aitoren mintzaira, izpiritu argituenek delosten daukuten Euskuara bethierekoa.*

*Usthe dugu, zinez, nahiko errestasun guziak gure meneko dauzkatela gehiago eta gehiago agertzen diren egunkarri, astekari, hitztegi, idazlanek mintzairaren jakinzki harrarazteko, iskribarazteko.*

*Diote Euskualdunari ez zaiola laket irakurtzea, gutiago iskribatzea.*

*Gezurtaraz dezagun omen hori. Entseia gaiten lotsarik gabe, lot lanari: eginkizuna da gutiena eskas.*

*Haurrak ikhasazue, gazteek lantuzazue, adinekoek, zakarrek irakhasazue eta denek atsegin-ki, gora-ki, amultsu-ki minza Euskuara.*

*religioso, seglar de alguna ilustración; pero todos ellos forman un tanto por cierto muy escaso de nuestra población. El resto no lee nada. De manera que ciertos escritores nuestros que escriben (muy poco claro está) en estilo que ellos creen popular, no serían entendidos por ese resto de pueblo. El pueblo más o menos ilustrado, ese pueblo limitado que he referido, es precisamente el pueblo que desearía algo más que coplas y cuentos, si se los dieran, y a ese hay que atender.*

*El que escribe cuentos y coplas sin salir de lo popular, hace muy bien; el que se sale de ahí para roturar nuevos terrenos y expresar con palabras populares, en cuanto se pueda, cosas más levantadas, hace mucho mejor; el que hace ambas cosas será invulnerable por la crítica de mañana, al menos en su tendencia, y quizá en sus resultados, como camino, este tercero es el mejor y el único. En la manera de recorrerlo está la dificultad. Y al que lo recorre mal, hay que enseñarle a recorrerlo mejor con el ejemplo. Antes de que comience entre nosotros la encarnizada lucha de otras naciones, es menester salgamos al paso para evitarlas.*

Euskaltzaletasunaren defentsa

J. Mirandek hobeagotzat dauka euskaltzaletasunaren defentsan Hegoaldean Gerra Zibilean hartutako armen bidea Iparraldekoa baino, izan ere, Auñamenditik harago eginkizun horretarako kantak eta dantzak baino ez zituzten erabiltzen ohi[103].

Herriarekin

Justo Garate herriarekin lerratzen da gogotik zientifikoak zeharo ez diren arazoetan. Izan ere, irakak berarekin garia baitu. Urreak eta diamanteak balioa daukate ganga gorabehera. Bada zuhurtzia duen gizaki analfabetoa ere. F. Schillerrek ba omen dio: herriak ondo daki zertan datzan bere ongizatea, eta horretan ezin da atzipetu hain errazki[104].

Konplexua

Paul Legarraldek euskaldunek beren konplexuaren kontra borrokatu beharraz dihardu; izan ere, harro egon behar dute arrazaz, Frantziako beste edozein bezain estimagarria baita. Bestalde, hizkuntza dute latinaren eta germanikoaren aurrekoa; edonongoak bezain baliagarriak dituzte historia, gizarte erakundeak, tradizioak eta aberastasun folklorikoak. Oinarrizkoa deritzo hemengoak horiek ezagutzeari, edozein lanbidekoa izanik ere gerora: dela humanista unibertsal, dela idazle, herri-lanari, gendarma... edo dena delako[105].

Orixek ikusten du galtzailearen konplexu hori toponimiaren alorrean nabarmen; euskara denez Euskal Herriko hizkuntzarik zaharrena, leku izenei euskal erroak bilatzen saia gaitezen eta ez setaz berriagoak diren hizkuntzetakoak, izan lezaketen prestigioa gorabehera. Argudio zientifikoetan oinarrituz (F. de Saussure-ren irizpideak), Aturri ibaiaren izenari jatorri euskalduna bilatzen saiatzen da[106].

Crétinisation

Marc Legassek salatzen du folkloreko sentimendu onen bitartez herria kretinizatzea edo lelotzea[107]:

*La crétinisation du peuple par les bons sentiments folkloriques est, avec la prostitution touristique du pays, l'un des pôles entre lesquels évolue le destin spirituel des Basques.*

*On n'échappe à la maison de passe estivale des Syndicats d'Initiative que por mieux tomber dans le patronage bien pensant des basquisants professionnels. (...)*

*Sous forme d'indigènes pittoresques, folkloriquement « demeurés », on attire le gibier à plumer, en l'ocurrence le touriste aux succulentes devises. C'est en somme le système de chasse employé par ces Basques désamorcés par les manipulations latines que sont les gascons. On crève les yeux à la palombe. Elle chante. Et les pigeons de tomber dès lors dans les filets des Syndicats d'Initiatives. (...)*

*La formule magique de tout apprenti crétinisateur basquisant est simple. Elle tient en quatre mots: «C'est pas basque!».*

*Appliquée à tort et à travers, vigoureusement et avec l'allure hautaine de celui-quisait-ce-qui-est-basque, la formule magique peut transformer tout et n'importe quel Basque sain d'esprit en un merveilleux sclérosé, chauviniste, à complexes d'infériorité inversée.*

*Dès lors, apprécier une quelconque oeuvre poétique uniquement en fonction de sa valeur, aimer la musique pour la musique, la peinture pour la peinture, ouvrir son coeur et son esprit aux courants idéologiques et intellectuels qui soufflent sur notre minuscule boule perdue dans l'amas des galaxies, revient à trahir, à renier l'Aïtor, les ancêtres (pardon!..: arbasoak) le sor-lekua, Jaingoiko eta lege-zaharra, zuzen-zuzena, eskualdun fededun et l'Eskualzaleen-Biltzarra.*

*Le malheureux Basque de bonne volonté, terrifié par les anathèmes des Torquemada folklorisants, entre alors dans un de ces tiers-ordre qui naissent partout où il y a plus de vingt Basques réunis —dont un rondde-cuir de pseudo-conformisme euskarien.*

*Il ne jouera plus au bridge ni au tennis, C'est anglais.*

*Il ne touchera plus une guitare. C'est espagnol.*

*Il ne portera plus de moustache. C'est français.*

*Et ne boira plus de coktails. C'est américain.*

*Mais à l'issue de banquets entre « lagunak », il chantera «Itsasoan laño dago... » et « Txomin jozak trompetta... », revêtu d'un pantalon à raies bleu-pâle et blanches, puis jouera au « muss » en buvant du « sagarnoa ».*

### 3. 7. Aldizkariko beste zenbait gai:

3.7.1. Erlijioa

*3.7.1.1. Alderdiak*

<u>Apezpikutegi berriak</u>

Euskal Herrian Apezpikutegi berriak antolatzen ari direla-eta, Aspaldiko bestizenekoak deritzo euskaldunak zatitzen dituela eta helburua politikoa dela.

<u>Gorroto eta herrak</u>

Kristau izateak eskatzen du herra eta korromioak ahaztea gizakion artean. Txarkeriak baztertu egin behar dira, eta onbidera bihurtzeko deia egiten du erredakzioak[108].

Ildo beretik, Gernikako bonbardaketaren 15. urteburuan, *Gernika* lagunartekoak gorrotoaren kontra eta urrikalmenduaren alde agertzen dira. Herri guztien arteko maitasunaren eta elkartasunaren ikurtzat daukate Gernikako Arbola “Legearen-Kutxa”[109].

<u>Erlijioa eta politika</u>

Zenbait euskal apaizek sinatutako izkribu batean jartzen dituzte zehaztasun batzuk erlijioaren eta politikaren arteko harremanez. Bi entitateok independenteak izan behar dute. Utopia sarraskigilearen kontrako gaztigua ematen dute. Aldoux Huxley-ren *teozentrismo*[w] izenekoaren alde egiten dute. Ongi komuna begiratu behar da, interesagatiko politikaren kontra. Karisma bidezko agintearen alde agertzen zaizkigu, eta aginte behartzailearen aurka[110].

<u>Jainko ongillea: “Negua jun da!” olerkia</u>

Udaberria Jainkoaren bedeinkapena da. Naturak Jainkoaren loria kantatzen du. Jainkoaren eskuetan dago ereindako haziaren etorkizuna:

Ontasun dena Uda berriyak

[w] *théocentrisme.”Disposition d'esprit ou attitude consistant à placer Dieu et ceux qui sont investis de l'autorité religieuse au centre de toute vision du monde et de toute interprétation de l'histoire`` (GDEL). On sait que la méditation (...) du mystère de la Trinité aboutit chez Augustin à la certitude d'un théocentrisme: c'est en tant que Dieu que le Christ attire la créature vers son créateur (Encyclop. univ. t. 3 1989, p. 430, s. v. Augustinisme.* http://www. cnrtl. fr/definition/theocentrisme. 2010-04-05

zabaltzen du zokuetan.
Golde erdoya geldi zegona
sartuko da soruetan.
Gero aziya, azi onena
oreiñgo degu lurretan.
Ta Zuk, Jaun on, andik aurrera
ongi dakizu zer egiñ.
Nai dezun eran jostatzen zera
aiziakiñ ta euriyakiñ.
Bedeinka itzatzu gure lur aldeak
Zure esku ongilliakiñ [111].

Udaberrian naturak Jainkoaren loria kantatzen du, Haren eskua nabaria baitu. Basarri bertsolariarenean bezala, hemen ere ikuspegi zientifikotik urrun gaude. Humanismo katoliko mota honetan gizagaindiko botereengandiko askatasun intelektuala ez du oraindik lortu gizakiak.

*3.7.1.2. Autore erlijiosoak*

Iratzeder: mistika.

Debozioak sortzen dituen asetasunez mintzatzen zaigu "Chiriorat ukurtuak..." poeman; nahi du fede kartsuak hitza biziaraz dezala "Noiz othe?" poeman, aldiz[112]:

*(...) Ez du soinurik, ez du jauzirik*
*Nihor pitz-arazi*
*Ez du elherik, ez du kanturik*
*Haitzik lorarazi.*
*Egin intziri, egin irrintzin*
*Haitza dadin bizi.*
*Egin lan, egin oihu, egin othoitz gurekin*
*Lurra dadin Jainkoz busti*
*Egin dei, egin indar, egin auhen gurekin*
*Haitza dadin lorez bezti.*
*Eta orai, eta gero eta bethi*
*Sor diten sor haitz-ostoak*
*Eta orai eta gero eta bethi*
*Haz ditzan haz haitz-erthoak*
*Negu-gabeko, nausi-gabeko, neurri-gabeko*
*Amodioaren Amodioak.*

"Gaupe hotz huntan" poeman otoitzaren bitartez Goikoaren errukia bilatzen da. Jainko pertsonala da ( *gauden behakoz behako* ). Jainkoaren begitarteak argi egin diezaiola eskatzen du[113].

E. Erkiaga

Egunerokotasunean murgilduta dagoen gizakiaren Jaunaren goseaz edo otoitzaren beharraz ari da:

*(...) Bainan artizarrak agur egitean*
*Arima atzarri dut ametsen menpean;*
*ta ilhunabarra urrhe mihisaz iartzean*
*zerumina sortzen gizabihotzean.*
*Zerumin bizi bat, Iaungoiko gosea.*
*gizonak barrnean dadukan lezea;*
*alperrik bilhatu laket eta atsegin,*
*lehia min horren hasetzea, ezin.*
*Ortziko zelhaia izarrez iostean*
*orduan ez iraun sinis gogorrean:*
*eskuak bildurik, belhaunak lurrean,*
*idorrtu begiok esker-negarrean.*

*Begiok idorrtuz esker-nigarretan*
*zeruko zituak niretzat aletan;*
*egunez ni sorgor bizitz zidorretan*
*ta Zu, Iaun, gauean bihotz-laphurretan...* [114]

Larramendi´tar Iñaki

Badugu kristautasunaren ikuspegi aszetikoa ere, Gabonetan ere gogoratu beharrekoa:

Aurtxo orrek eztu nai seaska politik,
Beartsu izan nai du sortze-egunetik.
Nai du garratztasuna bizitzan astetik,
Gu, berekiñ zeruan ikusteagatik.
Aurtxo maitagarria jetxiya zerutik,
Ni-taz kupitu zaite zanden ikullutik
Ni, or zure ondoan, ez egonagatik,
Ziñez agurtzen zaitut nagoan lekutik [115].

Beste olerki batean, munduaren hutsalkeria aipatzen du egile honek:

*Bizi denbora baduakigu*
*Askori utskeriyetan*
*Betikotasun neurri-gabia*
*Eztegu artzen ezertan.*
*Entzu gabeak gertatzen gera*
*Eginkizun geyenetan,*
*Aurreko utsak bete ditzagun:*
*Ondorengo egunetan* [116].

Bustintza´tar Errose

“Eiztaria ta deabrua” bertso-sailean, erakusten zaigu ehiztariak deabruaren segadan erori, eta itzuri egiten diola elizkizunetara (mezatara eta errosariora) joateagatik. Zeharo tradizionala da 1951ko sail hau[117].

Orixe

Ikus ditzagun erlijioaren onurak Nikolas Ormaetxearen begietan. Bai, trumilka datozkigu ideia berriak, baina...:

*Zer lotsaizun dago kristau izate ortan? Gure gizonik aundienak siñestun izan ziran. Ikusiko dugu siñesgabe arroputz oiek noraiño igotzen diran. Lengoen egiñak berdintzen ditutenean, orduan esan dezakete fede bearrik ez dela ageri; bitartean ez. Oien artean ez da sortuko Loiolarik, Xabier´ik, Zumarraga´rik, Legazpi´rik, Urdaneta´rik* [118].

J. Mirande: Elizaren eragina

J. Miranderen “Euskaldungoaren etsaiak” artikulua sonatua izan zen[119]. Protestantismoa aukeratzea hobeto zatekeela euskaldunarentzat zioen. Kontua da, horrek eta artikulu bereko beste zenbait adierazpenek aldizkariaren bukaera ekarri zutela.

*Ai beren aitzinako paganizmuaren begiratzera herabe izan ziran Euskaldunok, behintzat protestant bihurrtu izan ba lira Euskhalerria salvatuko zan ezbairik gabe, herri bat denetik... Albret-eko Ioanna eta Leizarraga hotsemaile genituela, berphizkunde bati buruz ginhoazen bai herriketan, bai intelligentzan: gure gogo-hertstura dela kausa, hala ez da izan... Gurt gakizkien, halaz ere, Reforman alderdi harrtu zuten Zuberotarr eta Nafarrtar Aitorseme zintzo heiei: hobe baita gudukatu eta galtzea batere ez gudukatzea baino.*

Izpiritu demokratiko ahularen kritika egiten du. Neurri handi batean F. Nietzscheren kristautasunaren kritika da. Hau da, Kristautasunak gizakia endekatu egiten du, oinarrizko

botere-pultsioak eragotziz, eta erresuminez erabiliz gizaki gorak (supergizakiak). Hori egin izana leporatzen dio euskal Elizari:

> *Alta politikoaren alhorrean baino are kaltegarriago izan zaiku Elizaren eragina spirituaren alhorrean, geroko edozein berphizkunderen ithurri biziak urdindu zerauzkigulakotz. Euskaldun zaharren gogo basa, borthitz eta handia aphaldu, ahuldu, hobeki erran irendu zuen haren doktrinak; otso ginelarik, bildots egin gaitu. Gu paganu ginan oraino gure hauzo guztiek aspaldian onharturik zutelarik Goierritar batzuek ekharri "Berri Ona"; eta gere ere, paganu egon gara bethi gure izaiki-zolan, egiazko Europatarrak oro diren bezala. Orienteko doktrina bat baita Khristautarzuna, hangotarrentzat egina; eta Europa hunetan erro hartzekotan, hemengotarren Weltanschauung bereiziari egokitu beharr zaio, nahi ala ez. Europatarrak zuzentza nahi du, bai eta nuantzak; ezin harr dezake... evangeli-elhetzat Goiz-erritarren enthelegu sorgorrak kilikatzen dituzten dogma zehatz eta lazgarriak. Horrengatik, Elizaren hastapenetik hunat "heretikorik" asko aurrkhitu dituzte bethi beren aurrkha iazarriak, Romako iaun berriek. Lehenik Keltek, monakhismuaren bidez, eta gero Sede Saindua osoki italianizatu zenean, Germanek, Luther-ek eragin Reformaz Iosuren irakaspenari txerrtatu zeraukoten Europatarrok hain nezessari dugun paganismuaren guna. Gure harrian, ondikotz "eraberritze" hori ez zan egin ahal izan... Aitzitik, are lehen baino arrotzago genduen Eliza baten menpean makhurrturik egon ginan, italianizant izaiteko ordez oral hispanizant, h. d. Afrikatarr-Kamita, bihurrtu baitzan Kontrareforma zala bide. Kontrareforma horren "gizon-handia" Euskaldun bat izan dela, horretan gure zori guztiaren synbol bat dakhusat: Euskaldunak, beraren nazionalitatea halako atsegin masochista batekin gutietsiz eta aldebat atsiz, bethi eta bethi beren indarr eta ahaleginak oro, bere enda-energiak oro arrotz eta atzerritarren zerbitzuan eman ditu. Egun ere, gure neskak Frantzitar edo Espainitarr bourgeois endekatuen baithan neskame sartzen diren bezelaxe; gure muthilek Frantziaren harmadetan, Alemaniaren kontra gudukatuz, gudari hoberenen izena irabazten duten bezelaxe —Frantzia Euskaldungoaren etsaia eta Alemania, gurea ez bainan gure etsaiaren etsaia izaiki— halaber Euskalherriko adimen bizkorrak, euskararen eta euskal-kulturaren alde lan egiteko ordez aphezgaitegian sartzen eta proselytismuaren aritzera ioaiten dira lurralde hurrunetarat, ad maiorem gloriam Romae, bainan gure herriarentzat onurarik gabe. Hainbat eta hainbat gogo —eta soin— indarr Euskaldun horrela alpherrik galtzen.*

Oxobi

"Egile bakarra"[120] poeman, Oxobik Jainkoaren eskuetan jartzen du udaberriaren etorrera; gizakia ere menpean dago. Ez da jainko kristauaren menpekotasunetik aske dagoen humanismo sekulartu baten lorratza, inolaz ere.

Basarriren Jaungoiko haserrearen itsasoa

"Itsasoa haserre" bertso-sortan, Jainkoa bitartekari ageri da naturaren eta gizakiaren artean. Itsasoaren haserrea, Jainkoaren arartekotzaz baretu nahi da hemen. Ez dirudi oso ikuspegi positibista eta enpirikoa[121].

Krutwig'tar **F. K.**

"Zer naiz?"[122] poeman idazleak munduaren izatea zalantzan jartzen du:

*Zeru izarrtsuari so ein ondoren'*
*Goizeko izarra nik dakhustanean'*
*Jaiotzen zait galde haur bihotzean:*
*Zer zara zu, ene gogoa, hemen?*
*Zergatik jaio ta zergatik bizi'*
*Bilhatzen dut eta ezin atzeman.*
*Ai nenki nork erran ahal derautan*
*Nork diezaketan haur niri iharditsi*
*Gogo ori, zergatik egin zara?*
*Haur nehoiz bururatu eztuzua?*

*Nora-nai joan, gora naiz behera'*
*Bethi ikhusiko dugu begi itsuez*
*Gezurra bai-ta gure Asturua*
*Kosmos bai-takhusagu estalduez.*

Ikus dezagun zer dioen entziklopedia batek *Maya*ren gai honi buruz:

> *(Sanskrit: "wizardry, " or "illusion"), a fundamental concept in Hindu philosophy, notably, in the Advaita (Nondualist) school of the orthodox system of Vedānta. Maya originally denoted the power of wizardry with which a god can make human beings believe in what turns out to be an illusion; by extension it later came to mean the powerful force that creates the cosmic illusion that the phenomenal world is real. For the Nondualists, maya is thus that cosmic force that presents the infinite Brahman (the supreme being) as the finite phenomenal world. Maya is reflected on the individual level by human ignorance (ajñāna) of the real nature of the self, which man has mistaken for the empirical ego but which is in reality identical with Brahman [123].*

F. Krutwig beraren "Deo ignoto" olerkian ere adierazita dago *Maya*ren kontzeptu hori[124].

Aldabe´tar Iokin

Gabonak heltzen diren urte batean[125], autore honek balio kristauen errepasoa egiten du. Ikus dezagun zer dioen aberastasunei buruz:

*Amildu dira urtiak*
*eternidadian*
*axol aundirik gabe*
*oraiñ bitartian*
*¿Nun gendun guk gogua?*
*¿Aberastasunian?*
*¡Obe jarri ba gendun*
*goi mall ontasunian!*
*(…)Egiz nai badezute*
*Aberatsak izan,*
*Goruntz lurretik denak*
*Altxa zaitezte egan.*
*Moztu lurreko trabak;*
*Utzi kutizik an.*
*Onur lanari gogoz*
*Bereala eskua eman.*

Badu ere J. Aldabe-k beste poema bat, Jaungoikoaren haserreari buruz[126].

*Ni naiz Jaun ta Nagusi dembora denetan.*
*Egon zaitezte menden gogoz ta benetan.*
*Bete nere aginduk zintzo ta egiyetan*
*Bestela izango dira miñak negarretan.*
*"Bota zazute, goyak, euriya geyegi.*
*Erre-bazter guztiyak", diyo iguzkiari.*
*Ekarri eskutaraño... ¡kentzen ongi daki!*
*Bere aserre ixilla... ¡zenen bildurgarri!*
*"Sartu zaitezte, arrak, emaitzen munetan*
*gogor jipondu erriyak bazter guztiyetan*
*iya ibiltzen diran bide zuzenetan:*
*bestela ez det altxako nere zigorrikan. "*
*¿Iraungo al dute erriyak Jaunen aserrian?*
*Izan bitez garbiyak kristau oituretan.*
*¡Oraintxen batez ere maitetasunian!*
*Errik, izan zaitezte zuzenak bidian.*

Kontuan izanik hondamendi garaiak direla, horren interpretazio transzendentala aurkitzen saiatzen dira poetak; kontuan izan zibilizazioak jasan zituen gerrak eta suntsipenak dela penintsulan dela mundu zabalean. F. Krutwigek Nemesis deritzo garai hartako nahaspilari. Eta zer da kontzeptu klasiko hori?

> *Némesis, en la mitología griega, personificación de la justicia divina y de la venganza de los dioses, a veces llamada hija de la noche. Representaba la legítima ira de los dioses contra la soberbia y la altivez, y contra los transgresores de la ley; distribuía la buena o mala fortuna a todos los mortales. Nadie podía escapar de su poder* [127].

3.7.2. Morala

Desoreka

Miguel Astiz Dorreak ikusten zuen artean humanismoarentzako zabalkunde-aukera; honela arrazoitzen du berak gaztelaniatik ekarri dugun idaz-zatian:

> *erabateko gerra sortzeko ahalmena kunplitu da, eta, aldi berean, ezagutza fisikoen eta jakituria moralaren arteko desoreka larriki hazi da; askoren ustez, bonba atomikoak ondoren izugarriak ekar litzake, hain da gizaki modernoa mitomanoa, irrazionala eta azalean soilik humanizatua* [128].

Grinak

Zientziak sortutako egoera berrian, arrazoitzen dute agerkariko kolaboratzaileek, gizaki guztiek bi bidetara partitu beharra zuten: ala ezabatu erraietan gorroto, harrokeria eta erasokortasun oro, ala gizateria sutean kiskali animalien gisako grina txar horien eraginpean. Mundu-gerraren ostean, eta mehatxu nuklearraren kariaz, alerta gorriko egoeran zegoen gizateria, eta hondamendia saihesteko ahaleginak egin behar izan ziren.

Fausto eta Prometeo

Bikini Uharteetako leherketa saio nuklearrak egin zituzten AEBek 1950eko Gerra Hotzaren hamarkada hartan; horien karietara P. Teilhard de Chardin josulagunak esan zuen Lurraren Izpirituari men egin behar zaiola: baztertu Prometeoren eta Faustoren izpiritua, autonomia eta bakartasun izpiritu itsu eta bortitza dena, eta, hobetsi zerbitzu, elkartasun, bake, batasun eta anaitasun izpiritua. Orduko filosofo jesuita hori hartzen dute aintzakotzat *Gernika* aldizkari humanistakoek.

Oinarrizko erantzukizuna

Erredakzioak Europan izandako ekimen baten berri ematen du ohartxo batean. Deigarria da *Gernika*ren gainerako tonuaren aldean. Honela dio: gizakiari oinarrizko erantzukizunagatik dagozkio humanismoa eta kultura etikoa, naturaz gaindiko inolako boteretan oinarritu gabe eta modu demokratikoan, edozein lotura erlijiosok edo politikok baldintzatu gabe. Laikotasuna gardentasunez aldarrikatzen da, eta ez da hori *Gernika*ren tonu orokorra, bai ordea zabal zebilen humanismo konfesionalarena.

Azpilkuetako Martin Berpizkundeko teologoaren irakaspen moralak

Interesatuegiak diren ikasleek esan ohi dute: jakin eta ikasi egin nahi dut Elizan karguren bat lortzeko, eta handik aurrera Jainkoari zerbitzatzeko. Irrika noragabeko horiek gogoan egiten dituzte hautuak, agian, Jainkoaren deseina bestelakoa izaki[129].

Diruaz Azpilkuetako Martin Berpizkundean eta beste.

Gizon nafar argi honek bere ilobari dirurik utzi ez, eta beraren eskabidearen ondotik zera erantzuten dio, lan egin dezala bere arbasoek bezala *que con mucho velar y haciendo lo que os aconsejo aumentaron esa hacienda [familiar]* [130].

"Gutxikin poztu zaitia" da Larramendi´tar Iñakik proposatzen duena. Aszetismoaren bidea aldezten da (*bonum arduum* delakoa, tomisten[131] hizkeraz):

*Osasuna badaukazu*

*Esker ona egiyozu,*
*Noizbait urrunduko zaitzu.*
*Ludi onetan gazi ta gozo*
*Ondo nastuak dituzu,*
*Gozo utsa nai badezu*
*Emen bian eztaukazu,*
*Goyan arkituko dezu.*
*Nere entzule maitia,*
*Zori onaren zalia*
*Entzun, zar baten ustia.*
*Alperrik dezu diruarekiñ*
*Ametsetan egotia,*
*Ola juango da astia,*
*Illabete eta urtia,*
*Gutxikiñ poztu zaitia.*

J. Mirande, adiskidetasunaz

Paristar-zuberotarrak Nietzscheren poema bat itzuli zuen: “Mendi-gaillurretatik”. Poeta adiskide zaharrak itxaroteaz etsita dago; nolabaiteko argira hurbildu da, eta, antzaldaturik adiskide berrien zain dagoenean luzatzen die hurbil dakizkion gonbitea:

*“Zarathustra adixkidea yin da”*[132]
*(Ene eusko "adiskide zarrei"*
*itzulpen au opa diet. Mirande'tar Jon.)*
*Oi bizi-eguerdi au! Yaiaroa!*
*Oi uda-baratza!*
*Ezin egonezko zoriona zutik, zelatan eta zai:*
*—adixkideen nago zai, gau ta egun gertu.*
*Non zaudete, adixkideok? Zatozte! Ba da ordu! Ba da ordu!*
*Ez al zan zuentzat izotz arrea*
*gaur larrosaz apaindu bai'da?*
*Zuen billa dabil latsa, irrikiz oldartzen ta bultzatzen*
*dira gaur aize-odeiak ortze urdin gorenean,*
*urrunetik zuei begiratu-naian txori begiz.*
*Gorenean ipiñi dut naia zuentzat:—*
*nor bizi da izarretatik.*
*Leize-ondo latzenetatik aiñen urbil?*
*Nire yaurerria —zein yaurerrri da, edatzenago?*
*Eta nire eztia —nork du dastatu?...*
*—Or zarete, adiskideok! Ondikoz, ni ordea ez naiz*
*ikusi nai zenuten ura!*
*Zalantzan zaudete, arriturik —ai, obe aserre ba'zindezke!*
*Ni —ez naiz ura gehiago? Aldaturik eskua, urratsa, arpegia?*
*Eta naizena, zuentzako adixkideok —ez naiz?*
*Beste bat billakatu naiz? neure buruari arrotz?*
*neure buruari iges egiñik?*
*borrokari bat, maizegi beraren burua garaitua?*
*maizegi beraren indarrean aurka gogor egiñik,*
*beraren gurendak zauritua ta lotua?*
*Billatu dua aizeak zorrotzen emaiten duen lekuan?*
*Ikasi dut bizitzen*
*iñor bizi ez dan tokian, artz zurien eremuetan,*
*aztu ditut Yainkoa ta gizona, biraua ta otoitza?*
*iratxoa billakatu naiz, izotz-gaiñean ibildari?*
*—Adiskide zârrok! Ikus! Orain so zaitutet zurbil,*
*maitez ta beldurrez beterik!*
*Ez, zoazte! Ez aserretu! Emen —ezin bizi zindezkete*
*emen, urruneneko izotzetik arkaiztegiraño,*
*eiztari bear da izan ta orkatz-antzeko.*
*Eiztari gaiztoa egin naiz!—Ikus, zeiñem gogorrik*

*edaturik daukadan uztaia!*
*Indartsuenak du azkon au yaurti:*
*zoritxar aatik! Galgarri bai'da geza*
*beste edozin baiñoago, —utik emendik! Zeuen onetan!...*
*¸Atzera zoazte? —Oi biotz au, aski yasan dut,*
*eure itxaropena sendo egon duk:*
*adiskide berriei euki ateak zabalik!*
*Zârrak utzi! Utzak oroipena!*
*Lên gazte ba'intzan, orain —obeto gazte aiz!*
*Iñoiz elkartu ginuen Itxaropena baten lokarri ortan, —*
*nork irakur ditzake oraindik*
*maitasunak orduan idatzitako ikur margulak?*
*Larruki batekin arakatzen dut, eskua ikutzera*
*auzartzen ez dana, —larrua antzo oritu ta kiskaldurik.*

*Adiskide ez gehiago, oik dira —nola esan bada?—*
*adixkideen iratxo bakarrik!*
*gabaz yotzen didate oraindik bai biotzean ta leioan,*
*so egiten didate ta itz: "adiskide giñan orraitio?"*
*—Oi itz zimeldu ori, lên larros urriña zeriona!*
*Oi gaztaroko irrikia, okerreretu dana!*
*Irrikitzen nituenak,*
*nire kide ta niretaratu uste nituenak,*
*zârtzeak ene gandik aldendu ditu:*
*Aldakor dana baizik ez dago nire kide.*

*Oi bizi-eguerdi au! Bigarren gaztaroa!*
*Oi uda-baratza!*
*Ezin egonezko zoriona zutik, zelatan eta zai!*
*Adixkideen nago zai, gau ta egun gertu,*
*adixkide berrien! Zatozte! Ba da ordu! Ba da ordu!*
*Abesti au amaitua da, —irrikiaren orru otsana*
*aoan il zait:*
*azti batek du egin, mugoneko adixkideak,*
*eguerdiko adixkideak —ez ¡ez galda nor dan—*
*eguerditan zan, bat bitu bai da...*
*Orain ospa dezagun, garaipen batuaz ziru,*
*yaien yaia:*
*Zarathustra adixkidea yin da, arrotzen arrotza!*
*Orain parrez dago lurra, itzalkin beltza urratu da,*
*argi-ilunpeen ezkontza etorri da...*

F. Nietzscheren bizizaletasunak eta bitalismoak eskaintzen dituzte balio absolutu, sendo eta iraunkorrak, dio Arnold Hauserrek; literatur soziologiako kritikari marxista horrek zaku berean sartzen ditu alemaniarra eta H. Bergson Nobel Sari frantsesa bere *élan vital* delakoarekin. Gure aldizkarikoak urrun daude kontzeptu horren zordun izan litekeen edozein totalitarismo-interpretaziotik, *Gernika*ko talde bultzagilea filosofo frantses bitalistaren oinordeko izanda ere[133].

Orduko giroa zen, eta izugarri eboluzionatu duen *arraza*ren kontzeptuaz gauza bera esan liteke, agian. Arraza kontzeptuaren adiera soil biologikoa ere oraintsukoa da, J. Azurmendik azaldu duen bezala[134], eta XX. mendearen lehen erdian bestelako adiera zeukan.

J. Miranderen “Neskutsak”

J. Mirandek ezohiko begirada botatzen die elkarren besoetara jausten diren 15 urteko neskuts edo birjinei olerki honetan. Ametsa ote? Arrazoizko klasikotasunean baztertu egiten da ametsaren alderako espresio oro. Humanismoaren arrazionaltasuna kolokan jartzen da, gizakia irritsera emanik agertzen baitzaigu, hobetzeko guraririk ez da sumatzen, eta bai, ordea, sentsualtasuna gozatu nahia.

Darwinismo soziala

"Eriotzaren sagarra" deitutakoan, Buztintza´tar Errosek darwinismoa sozialaren kritika egiten du. Hau da, indarrez batak besteari ondasunak kentzearen kontra dago, sagar bat sinbolotzat hartuta. Heriotza da horren ondorena [135].

3.7.3. Gizartearen ikuspegia

*3.7.3.1. Turismoa*

<u>Hondamendia</u>

Aldizkariko erredakzioak uste du ez dela turismoa bideratu behar herrialdearen gune ezkutuenetara, tradizioa, folklorea eta hizkuntza bere horretan mantendu diren lekuetara. Horrela eginez gero, nahiz eta borondaterik onenarekin egin, euskal itsas-ertzean gertatutako kalteak berriz sortuko lirateke barnealdean ere, eta Euskal Herri osora zabaldu[136].

<u>Moda</u>

Turismoak inbaditu egin zuen. Euskaldunek bi modu diferentetan jokatu zuten horren eragin erakargarriaren aurrean: batetik, kostaldea, zerrenda heteroklitoa eta mundukoia bihurtu zen; barnealdea, bestetik, bertara hurbiltzeko zailagoa eta landa-girokoagoa, lotuago jarraitu zitzaion antzinako izpirituari. Bikoizketa honek are erakargarriagoa bihurtu zuen Euskal Herria, ondikotz.

Zeintzuk dira turismoak ekarritako kalteak? Hona Dominique Dufauren hitzetan:

> *Dituen seme argituenak gogoetan daude. Menderen urrunetik Arbasoetarik eta Arbasoez heldu izan zauzkun mintzai, sinheste, gogo, kantu, dantza, khondaire, hitz batez ohitza guziak, espantagarrizko aberastasun horiek ez othe ditu nahasdurak, maltzurki beretu-ta, emeki, bainon seguki, urrunarazten Eskualdunaren bihotzetik, kasatzen Eskualdun etche eta herrietarik?*
>
> *Eskual-Herriko alde bat bat bortizki kolpatua izatu da, kolpatua dago. Bertzean, atzak sartzen ari dire, karreatzen dituzte usai eta ager-modu berri, arin, zoro batzuk irringarriki zonbeit Eskualdunek beretzen dituztenak [137].*

Jon Bilbaok errepasoa egiten dio Pierre Lotiren Euskal Herriarekiko harremanari. Idazle horrek gehiago begiratzen dio emozioari intelektuari baino; afektibitatearen ikuspegi horretatik deitoratzen du Iparraldera turismoa etortzea Turkian gertatu zen bezala. Modernotasunaren sarrerak agonia dakarkio euskaldun den orori, hilzorian jartzen du[138]:

> *Para Loti la agonía del pueblo vasco radica principalmente en la introducción del turismo, el peligro de "ponerse de moda". Loti, en realidad, teme a todo lo nuevo. Hombre de una extraordinaria egolatría no quiere sentir a su alrededor nada que le señale el "tiempo"que él llama "la carrera loca", "el torbellino que todo lo gasta", ese "tiempo" que le indica la vejez, el fin, el gran olvido... Los gritos de rebeldía vasca que él ve escritos en las grandes paredes de los frontones, esos gritos de "Viva Euskalerria", le parecen ser gritos de agonía de una raza que se va. Ya desde años atrás, en toda la segunda mitad del siglo XIX, tanto escritores franceses como españoles, creían ver llegar el fin del pueblo vasco, su asimilación por España y Francia.*
>
> *Loti cree también ver ese fin, aunque él mismo confiesa que todavía "ni Francia ni España han logrado, después de tantos siglos, asimilárselo [el País Vasco] completamente". Lo que Loti llama "la agonía del pueblo vasco" no es más que la introducción de todo lo moderno. Así como sentía que se europeizase Turquía creyendo que con ello perdería todo su carácter nacional, así también siente el temor de influjo de los nuevos conceptos y los nuevos utensilios en una comunidad particular como la vasca. Para él lo típico, lo característico de una nación, de un pueblo o de una persona, es lo que él ha conocido. Cualquier cambio le hace rebelarse contra el nuevo influjo. Loti tiene siempre miedo a verse como quien en realidad es: un hombre más emocional que intelectual.*

*3.7.3.2. Aurrerakuntza*

Indibidualismoaren fruitua da aurrerakuntza, eta originaltasunak tradizioa ahaztea dakar:

> *These ideas shift the emphasis of several thousand years of social beliefs and let loose innumerable consequences. Individualism lowers the value of tradition and puts a premium on originality; it leads to the now familiar "cult of the new"—in art, manners, technology, and social and political organization. True, the individual soul had long been held unique and precious by Christian theology, but Christian society had not extended the doctrine to every man's mundane comings and goings. Nor were his practical rights and powers attached to him as a man but, rather, to his status. Now the human being as such was being officially considered self-contained and self-propelling; it was a new regime and its name was liberty* [139].

Aldaketak egonkortu ahala nortasuna galtzeko arriskua ikusten du "Euskaldun gazte bat"-ek:

*Lehengotik, bainan ez lehengotu*
*Lehengotik ba: dantza, josteta, kantu eta olako nahi ditugu.*
*Zerendako?*
*Hoberik ez baitugu oraikotan kausitzen.*
*Heien bazterrerat uztea, eskualdungoaren ukatzea bailitake.*
*Gure ithurren agortzerat uztea, auzokoetarat edaterat joaiteko, gure buruaren harrikatzea bailitake.*
*Beraz, zer baita on lehengotik, hura ateraik, edo berriz har.*
*Bainan, ez lehengotu.*
*Balinbada orai hoberik...*
*Lehengoa ordain oraikotik.*
*Otoa hobe zaldi karrosa baino. Eletrika hobe, petrola baino.*
*Guazen beraz ototik eta eletrikatik, zaldi karrosa eta petrola utzi-eta.*
*Lehengotik bai, bainan agertzen bada hoberik, utzi lehengoa eta lot oraikoari.*
*Beraz, tradizioari eutsi nahi zaio ahal den neurrian* [140].

Ekonomia/utilitarismo

Rafael Larunbek malenkoniaz egiten du gogoeta mundua doan martxaz herriko kanpai zaharrez ari delarik: kanpaiak desagertu dira, eta, ordez, sirenak eta kornetak ailegatu. Tramankulu berriek lan-orduak seinalatzen dituzte zorrozki, eta laneko eta aisialdiko orduak banatzen poesiarik gabe. Mundua merke zurrean dabil edertasuna baztertu, eta utilitarismoari jarraiki. Ekonomiaren zientzia da gizateriaren erregina, eta munduko edertasuna ostentzen ari da[141].

Garai hartakoa da J. Ortega y Gassetek deskribatutako "masen errebolta" delakoa, kultura modernoaren gainbeheraren eta endekapenaren arduraduna. Oraingo honetan turismoa eta aurrerakuntza dira errudun. Bai ezker politikoak, bai eskuinak salatzen dute "arimagabeko" munduaren ikuskera zientifikoa: salatzen dituzte positibismoa eta kapitalismoa ere. Izpiritua altxatu nahi dute mekanizismoaren eta natur-zientzia deterministen aurka[142].

J. Ortega y Gasset Espainian oraindik orain eragin handikoa, eskandaluzko begiradaz ikusten baitzuen nola masek eliteenganako esker txarrean irauten zuten, nahiz eta beraiengandik onurak jaso[143].

Alderdi izpirituala, J. Thalamas eta K. Santamaria

J. Thalamasek zientziaren gurtza salatzen du, jakintza hau ordenu moralaz ez baita arduratzen alderdi izpirituala datu neurgarri hutsa bihurtzeko baino.

Hori egiten omen zen, artean, Sorbonan. H. Bergsonek Collège de Franceko bakartasunean besterik erakusten zuen: tasun izpiritualak, materia hutsera lerraezineko errealitate positiboak direla, eta tasun izpiritual hauek bizitzari egokitzen dioten jomuga ez dela matematikaren alorrekoa.

Teknologiaren haritik eta garai hartako giroan sakonago murgiltzeko, komenigarria deritzogu jasotea aipu luze honetan Karlos Santamaria matematikari katolikoak orduko giroa jaulkitako zenbait iritzi[x]:

*Zientzia, teknika eta gizartea: inplikazio etiko eta sozialak:*

*Garena, onerako eta txarrerako, iraganari zor diogu. Eta iragan hori ezin daiteke ulertu zientziak eta teknologiak sortarazi duten kultur tradiziorik gabe. (...)*

*Teknikaren onurak eta gaitzak: 50eko hamarkadako krisia.*

*Teknikak jasan dituen bilakaera eta aldaketa bortitzek bere ospe soziala areagotu besterik ez dute egin XX. mendean zehar. Jendeak teknikaren gain mugarik gabeko konfidantza ezarri du; Bigarren Mundu Gerraren ondorengo aurrerapenek (biologiaren, zibernetikaren eta fisika atomikoaren alorretan, batik bat) teknikarekiko itxaropena indartzea lortu dute. Aro berri baten atarian gauden ustea zabaldu da mende honen lehen erdian, parece como si fuera a iniciarse una "Era de felicidad", sin precedentes en la historia de la Humanidad, teknikak pobreziatik, oinazetik, gaisotasunetik, zahartzetik eta heriotzatik ere (besterik ez bada, heriotza mingarritik) askatuko gaituelakoan. Garapen mugagabean, munduaren eraldaketan, gizonaren eta emakumearen askapenean, eta abarretan ere teknikaren eragina positiboa izango dela sinesten dute gehienek.*

*('El desprestigio de la técnica', El Diario Vasco, 1982.4.18). Baina XX. mendeko bigarren erdian, Santamariaren ustez, baikortasunezko egoera hau lausotzen hasi da, todas estas esperanzas e ilusiones empiezan a cuartearse. Herritar arruntak oraindik teknikarengan fedea gordetzen duen arren, adituak badauka benetan gertatzen ari denaren berri: teknikak, bere gain jarrita zeuden itxaropenak ez asetzeaz gain, gaitz eta kalte berriak (batzuk lehendikakoak baino larriagoak) erantsi dizkio egungo gizarteari, eta, ondorioz, la Técnica empieza pues a desprestigiarse.*

*Gertakari soziologiko honen ziorik garrantzitsuenak, agian, arazo nuklearraren bi alderdiak izan daitezke: arma atomikoen eta energia nuklearraren erabilpen industrialaren auziak. (...)*

*Non dautza teknikaren alderdi onuragarri eta kaltegarriak? Nola ebaz daiteke teknikak gure gizartean duen eragin bikoitz honen auzia? Galdera hauei erantzunez gauzatzen da zientzia, teknika eta gizartearen arteko elkarreraginari buruzko Santamariaren ikusmoldea, batik bat.*

*'Técnicos al servicio de una concepción moral de la vida humana' (Guipúzcoa Económica, 1958. 10. 4) idazkian. (...)*

*Beraz, teknikak, siempre inacabada, siempre insatisfecha, gizakia desegonkortasunean barneratzen du, es un activo elemento de inestabilidad y de incertidumbre en nuestras vidas. Batetik, erosotasun eta abantaila material estimagarriak eskaintzen dizkiola egia den arren, bestetik bere baitako etengabeko aldaketek desoreka eragiten dute: desoreka materiala eta psikikoa, ekonomikoa eta soziala. Arazo eta ebazpen berriak aurkezteko arintasunak, bere onuren gozamena eragozten du.*

*Baina, kezkagarrienetarikoa Santamariarentzat, aurrerapen teknikoak materialismora bultzatzen du gizartea.*

*('El cristiano frente a la eficacia técnica', Documentos 11, 1952): (...)*

*Baina testuinguru politiko-ideologikoa edozein dela ere, teknikak, beti, izpirituaren baloreak kinka larrian jartzen dituen materialismoarekiko menpekotasuna agertzen du. (...)*

*Al tratar de definir al hombre como un objetivo técnico el hombre desaparece. El hombre real es extraño a la mentalidad técnica y a los criterios técnicos, estrictamente técnicos, precisamente porque no puede ser definido como un simple objetivo técnico que es lo único que las meras técnicas pueden reconocer en él. Las técnicas no ven en el hombre más que aspectos muy parciales del hombre, necesidades concretas, objetivos materiales determinados. El hombre verdadero, el propio hombre, raíz de todas aquellas necesidades y clave de todos esos objetivos es tan inaccesible al espíritu técnico como lo es la "cosa en sí" a la teoría del conocimiento de Kant. (Ibidem)*

---

[x] Oharra: euskara-erdara nahasteak jatorrizko web orrialdekoan du jatorria.

*Santamariak aurkezten dituen adibideen ildotik, dietetikarentzat, gizakia, baldintzarik ekonomiko eta erregularrenetan kaloria, proteina eta bitamina kopuru zehatzak jaso behar dituen liseri-sistema da; garraiobide teknikentzat, berriz, garraiatu beharreko masa mekaniko zehatza; klimatizazio teknikentzat, hezetasun eta presioarekin erlazionatutako tenperatura baldintza zehatzetan mantendu beharreko objektua; eta, estatistika matematikoarentzat, gizakia unitate aritmetikoa da, funtzio numerikoen menpe. Teknika bakoitzak, bere aldetik, bere helburu zehatzak lortzera jotzen du, horretarako, lehen ikusi dugunez, bitarteko eraginkorrenak bilatuz.*

*Suboptimizazioaren kontzeptua*

*Un señor "suboptimiza" cuando se desentiende del fin más lejano y se fija sólo en el más próximo, en el fin inmediato que, por una u otra razón, le está confiado a él. Todo especialista tiende naturalmente a suboptimizar. (...) Notemos que muchos "suboptimizadores" reunidos no siempre hacen el bien de la empresa, sino su ruina. Existen por ahí infinidad de personas honradas o que se creen honradas porque "suboptimizan" a conciencia. Le dicen a uno: "¿Que puede pasar esto o lo otro? ¿Que la sociedad va hacia aquí o hacia allá? Esto a mí no me incumbe. Yo cumplo con mi deber. Yo hago las cosas bien 'en mi esfera'".*

*(...) Lo que hemos dicho de la empresa lo repetimos de la sociedad en su conjunto: la suma de muchos suboptimizadores no produce otra cosa que el desbarajuste general. (Ibidem)*

*Azpioptimizazioa da teknikaren unibertsoan gertatzen den arriskurik garrantzitsuenetakoa, hots, erabaki teknikoen ugaritasuna eta berauen arteko kontraesanak. Teknika baten ikuspegitik 'ona', 'egokia' dena, beste batenetik 'txarra', 'desegokia' izan daiteke. Teknika bakoitza bere helburuak lortzeko baliagarriak diren baloreak optimizatzeaz bakarrik arduratzen denez, teknika ezberdinen baitako erabakien artean desadostasunak eta kontraesanak maiz gertatzen dira. Baina egoera desegonkor honek teknikaren esparrua autosuntsipenera darama. Lehen aipatu dugun azpioptimizazio prozesuak, izan ere, giza jokabidearen zatiketa errotikoa eragiten du. Sustrai moral guztietatik kanpo, teknikaren esparrua kontraesankorra bilakatzen da:*

*Si se acepta que las técnicas queden abandonadas a sí mismas y a sus propios criterios -algo así como en la economía liberal, "laissez faire, laissez passer"- el mundo de las técnicas caerá inevitablemente en la autodestrucción. El proceso de sub-optimización que hemos descrito tiende, en efecto, a una fragmentación radical de la conducta humana. Separado de toda raíz moral, el mundo de las técnicas es un mundo contradictorio, a-lógico en su conjunto.*

*('Técnicos al servicio de una concepción moral de la vida humana', Guipúzcoa Económica, 1958. 10. 4) (...)*

*Teknikak sortzen duen errealitatea, beraz, ezin da teknikaren barnetiko azterketaz soilik ulertu. Bestelako ikuspuntua behar dugu zientzia eta teknika gizartearen zerbitzura ipini nahi baditugu [144].*

Folklorea eta aurrerakuntza

"Euskaldun bat" folkloreari atxikitzearen alde dago, baina aurrerakuntza baztertu gabe. Kanpoko ohiturek ezer hoberik ez dakarten bitartean, ez dira hartzekoak[145].

Pierre Espilek dakusa orduko garaiko mundua ankerki ardazgabeturik (*desaxé*); hondamendira zuzen doala ematen du makinen eta aurkikuntza zientifikoen erritmo zorabiagarrian; euskal populuak, alta, badu munduari falta zaion sen erlijiosoa honela baitio: *Sainduen etsenpluak gure aurrean dagoen izarra bezalakoa izan behar du, nor bere buruaren bilatze hutsarekin pozik gera ez gaitezen*[146].

Berton Europa

"So egile" ezizeneko idazleak (Etienne Salaberrik) Europaren hurbiltasuna somatzen du, II. Mundu Gerra bukatuta:

*Tresnarik gabe behar zintuen egun erdi bat heltzeko zure herritik Baionara't, egun bat baino gehiago heltzeko Pauera't, aste bat ez aski sartzeko*

*Parisen. Lehenago Baionan baino lasterrago izanen zira orain Parisen. Pauen baino zalhuago New-Yorken; Pariseko joan jinaren artean, eginen duzu aise ta aise munduaren itzulia. Iduri du mundua bildu eta laburtu dela, urean emaiten den athorra kotoinezkoa biltzen eta eskatzen den bezala. Bertzelakotzen ari da mundua* [147].

*3.7.3.3. Atzerriko bizitza*

Basarri bertsolari zarauztarra Landetan egon zen erbesteraturik pinuak mozten; hango bizimodua bidegabea iruditzen zaio: hizkuntza arrotza, mesederik inori ezin eskatu, zuzengabeko soldata, ezin protestatu, abegi txarra (bertakoei lana kentzen omen zieten-eta atzerriratu euskaldunek), den-dena desberdin: jantzi, ohitura eta janari, eta gainera adiskiderik ez. Labur esanda Euskal Herrian baino hobeto inon ez[148].

<u>Oroitmina Mexikotik</u>

Anaiarteko gerraren ostean erbesteratuen kopurua eta garrantzia nabarmendu egin zen. Batek baino gehiagok egin zuen hanka ez bakarrik Frantziara, Ameriketara ere; aldizkari honetako idazle bat baino gehiago han biziko da; euretariko bat Julene Azpeitia dugu. “México visto por una vasca”[149] artikuluan marrazten digu exiliatuaren burubideen nondik norakoak. Euskal Herriari buruz oroi-minez ari zaigu; gogoan ditu amaren altzoan ikasitako mintzo gozoa, sorlekuko lekuak, lorategia, kanposantua... Indiarrei buruz ari dela, errukior agertzen da, espainiarren menpe ikusten dituelako. Horren ifrentzua da euskaldunek Mexikoko historia hurbilean izandako eragin onuragarria; gogoan ditu indiarren egoera hobetzen saiatutako Juan de Zumarraga eta... [150]

*Pero recuerdo de la acción personal de Fray Juan de Zumarraga, contemporáneo de Cortés, primer arzobispo de la Capital, hijo de Durango, pero es notorio que fue compasivo y caritativo con los indios. Durante el tiempo de su episcopado, aconteció la aparición del Cerro de Tepeyac, que los historiadores del país consideran como el hecho que inspiró y forjó la independencia patria.*

*El periodo que siguió a la Conquista, fue el más terrible para los indígenas. Los naturales del país eran sometidos en las Encomiendas a un trato tan bárbaro que se veía claramente que la extinción de la raza sería un hecho en un porvenir no muy lejano. Entonces surgió un fraile tenaz, caritativo y humano, Fray Bartolomé de las Casas, cuya acción cristiana, tesonera y perfectamente documentada en defensa de los indios le llevó a enfrentarse con los enormes intereses creados de los Encomenderos, y tuvo, además, la energía de poner en conocimiento del Rey aquél estado vergonzoso que creaban los privilegiados que enviaba desde la península. Fray Bartolomé tuvo un colaborador digno de su talla: más aún, un inspirador en la empresa humana y cristiana que cristalizó en las Ordenanzas Reales. Este fue otro vasco: Pedro de Rentería.*

*Justo es también recordar aquí la influencia y autoridad de algunos Virreyes vascos que se inclinaron de diversas maneras a "suavizar el yugo español". Así don Luis de Belasko mereció el titulo de "Padre de los Indios" por lo mucho que trabajó a favor de su emancipación, culminando la obra de su buen gobierno con la fundación de la Universidad de la Capital y colocando la primera piedra de la magnifica Catedral de la Metrópoli. Antonio de Mendoza fundó, por su parte, la primera imprenta en México, que fue, además, la primera de América* [151].

Berriz ere, euskal tradizio baten aldarrikapena ikusten dugu, eta, zehazkiago, gizatasunezko tradizioa.

“Balendiñe” ere erbestetik kexu da, ez baitago askatasunik Euskal Herrian. Lorez lore dabilen mitxeletaren irudian irudikatzen du askatasuna [152].

*3.7.3.4. Etorkinak*

Aspaldiko-k dakar autura etorkinen uholdea, baita aberastasun- iturri den industria berria ere. Gerrak sortu gorrotoa ahaztu behar dela dio. Goiburu du “eman da zabalzazu”, eta

mistika hori proposatzen du etorkinen arazo honi aterabidea emateko. Aldi berean salatzen du abertzale zenbaiten euskararekiko zabarkeria[153].

*3.7.3.5. Politika*

<u>Integrismoa</u>

Pello Errotarena omen den idazki bat dakarkigu aldizkariak[154]. Kontuan izan 1919an hila zela bertsolari hori. Politikari dagokionez, integrismoaren aurka, Santa Kruz apaiza gaitzesten du, apaiz odolzalea baitzen. Haren aldean nahiago Biriatuko apaiza, *gogo eta bihotz onekoa*. Gai berari buruzkoa da hau:

> *Integristen artean sarritan ibili naiz. Gizon gaiztoak egiazki. Gorrotoa ta arrokeria, besterik ez bere gogo beltzan. Dana berentzako, deusik ez bestientzako, ez bakarrik ludian, baita zeruan ere... Gorrototik borrokara ta gudara xuxen xuxen joatia, au izan da integristen naia ta lana. Zerbait ikusi ta ikasi dugu bide estu ta illun ortan joan diran urte abetan.*

<u>Euskalerriacos.</u>

Euskalerriacos zirelakoen euskaltzaletasuna kantu ossianikoetatik[y] bizi zen, areago, kantu horien musikak lagunduta herri gisa gozotasunean hiltzera etsita zeuden. Gogora dezagun mugimendu erregenerazionista hori bigarren karlistadako hondamendia eta gero sortu zela euskaltasunari formulazio berria emateko.

Oraingo oztopoa, aldiz, nartzisismoarena da; hau da, herri moduan geure burua onartu, bai, baina orientabiderako izan litekeen kritika ezin da saihestu eta entzungorrarena egin. Espainiak bere garaian, Cid delakoa atzendu behar izan zuen ber, bada garaia geuk ere ahantz dezagun geure burua jainkoek hautatutakotzat hartzearena, eta dagozkigun eginkizunei lot gakizkien[z].

<u>Abertzaletasuna</u>

Nolako abertzaletasuna, ordea? Abertzaletasun liberala, txaubinismo itsu eta nazioartekotasun abstraktuari itzuri eginez:

> *Ce qui attire le plus l'attention dans cette vie longue et intense, c'est ce patriotisme qui va croissant avec l'âge. Après avoir futuré dans tous les domaines de la philosophie et avoir participé aux épisodes les plus dramatiques de l'Histoire de France, ce retour aux choses de son petit pays natal, cette préocupation amoureuse pour les vicissitudes passées et présentes de son humble terroir, pourraient paraître déconcertants et paradoxaux. Rien de plus éloigné de la réalité. "Cet attachement à une patrie, c'est la condition essentielle d'un amour sincère pour une humanité plus large", observe un grand écrivain contemporain, Edouard Herriot[aa]. Et il ajoute: "L'internationalisme abstrait n'est*

---

[y] "Ossian:"

*gaelikoz Ois'n. Elezaharretako bardo eta heroi irlandarra. James Macpherson eskoziarrak, haren ahotan ipinitako poemen bidez Europara zabaldu Ossianen izena XVIII. m. an; literatura erromantikoan eragin handia izan zuen Macphersonen obrak.*

*Harluxet Hiztegi Entziklopedikoa.* http://www1. euskadi. net/harluxet/ 2010-04-05..

Gai honen inguruan ikus *La leyenda de Aitor*, J. JUARISTIk argitaratutako tesia literatura foruzaleaz (Taurus-ek plazaratua)

[z] *Acaso necesitemos los vascos una generación de descontentos* dio Victor RUIZ AÑIBARROk *in* "La restricción y la amplitud en el movimiento vasco cultural y humanístico". *Gernika* 22. Enero-Marzo 1953: 11-13 or.

aa "Edouard Herriot"

*born July 5, 1872, Troyes, Fr. died March 26, 1957, Lyon French statesman and man of letters who was the longtime leader of the Radical Party; he served in nine different cabinets and was premier of France three times (1924–25, 1926, 1932). The son of an army officer, Herriot was educated at the École Normale Supérieure, fromwhich he graduated in 1894. He taught at the lycée of Nantes and then at Lyon, where he won a high reputation as a scholar and teacher. This reputation was enhanced by his study of Madame Récamier et ses amis (1904; "Madame Recamier and Her Friends") and by the acute literary criticism in his Précis de l'histoire des lettres françaises (1905; "A Short History of French Letters"). (...)Herriot took part from 1948 onward in the Council of Europe. In 1952–54, however, he opposed the formation of a European Defense Community because he feared its consequence would be the rearmament of West Germany. Herriot clung throughout his life to liberal ideals of international cooperation. His intellectual gifts and honesty inspired respect and*

Oin-ohar honek hurrengo orrialdean jarraitzen du.

*qu´une chimère; l'internationalisme véritable procède par rayonnement. L'homme le plus attaché à ses devoirs envers les autres nations est celui dont l'âme a des ressources assez abondantes pour abriter l'amour de la famille, celui du sol natal, celui du pays."*

*On dirait que l'auteur de ses lignes s'est inspiré de cette déclaration de Joseph Garat faite, en 1815, dans un de ses derniers discours: "Ah, demanderez-vous (dit-il), lorsque je parle avec tant d'estime des ennemis de la France, d'où je suis? Je vous répondrai comme un des citoyens d'Athènes qui aima le plus son pays et ne le quitta jamais: du monde!*

*Ce patriotisme libéral et clairvoyant à égale distance du chauvinisme aveugle et de l'internationalisme abstrait, est celui que nous désirerions voir palpiter chez tous les hommes de bonne volonté [155].*

Arrazakeria separatista

M. Astiz Dorreak *Gernika* aldizkaria arrazakeria separatistatik urrun egon dadin eskaria egiten du, arrisku hori sumatu baitu[156].

Antikomunismo burutsua

Jesus Galindez zoritxarrekoak badu iritzirik aurrerabidea bilatzeko moduez. Norberaren interesak denon onerako sakrifikatuz lortuko da komunismoari (orduko etsaia mundu mailan) aurre hartzea. Hau da, ideologia horrenak baino irtenbide hobeak eskaini behar dira. Horretarako, ahaztu egin beharko iragan-minezko kantuak, eta gizarte errealari begiratu; horretarako ere, antzinako gizaki handien izkribu eta hitzaldiak gutxiagotan aipatu, eta egingarri diren irtenbideak bilatu. Horren kariaz, baserritarren egoera ekonomikoa hobetu beharraz dihardu. Etorkinen euskal izaera nabarmentzen du[157].

Gernikako arbola Pedro María de Irujoren begietan

Arbolaren gerizpean euskaldunek legeak (foruak) sortu ohi zituzten herri-demokrazia eredugarria baliatuta, eta lege horiek handikiek errespetatu egiten zituzten. Munduan zehar konstituzio denik eta demokratikoenak eta aurrerakoienak sortzeko balio izan zuten.

Norbanakoa eta politika

V. Ruiz Añibarrok dio bakarkako giza-sentimendu gorenaren defentsa tradizionalak badakarrela eragozpenik, adibidez, atontzerakoan giro izpirituala buruzagitza sendo baten meneko norbanakoak sortu behar direnean[158]. Taldeari men egitea beharrezkoa da batzuetan, eraginkorra izatekotan.

Lagun hurkoa

J. Thalamasen iritziz ordenu morala legeen edukiaz harago doa. Kristauak lagundu egin behar dio lagun hurkoari ondikoetatik jare dadin. Vitoriako Frantzisko Anaia duela gogoan mintzo da horrela J. Thalamas Iruneko apaiza.

Espainiako humanismoa

Espainiak humanismoaren iturrietatik edango du askatasunak berreskuratzen dituenean, eta tradizio demokratikoa berriztatuko ditu.

K. Jaspers

Karl Jaspers-en iritzia jasotzen du M. Astiz Dorreak. Existentzialismo kristauko aitalehenaren ustez, gizakiari aplikatuz gero, jakintza zientifikoek lausotu lezakete gutaz izan genezakeen ideia zehatza, baldin eta kontzientziari soilik dagokion bestelako ezagutza mota berezi hori baztertu nahibalute... [159]

Duintasuna eta maitasuna

---

*affection.* Encyclopædia Britannica. Encyclopædia Britannica 2009 Ultimate Reference Suite. Chicago: Encyclopædia Britannica, 2009.

Humanismo bakezale eta unibertsalista aldarrikatzen du Yholdi-k *Gernika*n, J. Maritaini jarraiki. Elkarlanaren beharraz ari dela, humanismoaren aurrerabidea posible ikusten du, ez berdintasunaren sostengupean, baizik eta analogiaren hegalpean. Ekintzaren aurrebaldintza da giza-duintasuna, eta lagun-hurkoaren legea onartzea[160].

Askatasuna eta elkartea J. Iturralderen baitan

"Euskalerriaco"-ek ez dute dena eskas iraganeko Euskal Herriaren euren oroi-min hutsala gorabehera, zenbaiten ustez. J. Iturralde y Suitek (1840-1909) ez zuen *askatasun* hitza bere horretan aipatzen, eta bai *askatasun kristaua* aipatzen, ordea. Askatasuna ongi komunaren esparruan ulertu ezik, arrisku handia dago arinkerian eta arduragabekerian erortzeko. Hau izan zen, antza, XIX.eko erromantikoen akatsa. *Askatasun kristaua* esamoldea zehazki aipatzean, J. Iturraldek kontu handia zuen, ongi soziala gogoan, begiratu beharreko betebeharrak ez baztertzearren (fuerismoa); aldi berean aintzat hartu nahi zituen pertsonak dituen eskubide indibidualak, kaltetu baitzitekeen horiek gabe pertsonaren osotasuna.

J. Iturraldek, bestalde, orduko Espainian federalismoaren inguruko zegoen eztabaida hartan foruzaletasuna hobesten zuen, izan ere, ez zuen gizakiak Jainkoaren sorkari gisa zuen izate izpirituala baztertzen, eta hori gabe ezin eman sendotasunik antolaketa instituzionalari. Gogoratu dezagun Espainiako lehen Errepublika 1873an izan zela bi hilabeteko iraupenaz, eta F. Pi i Margall (1824-1901) federalista izan zuela lehendakari.

Bakea gudaren aurka

Gudaren salaketa dago Abenderri-ren "Biotzkadak" idazkian. Bakea eta zoriona goraipatzen dira[161].

Noblezia

Azpimarratzen dute zenbait autorek sorbururik ezagutzen ez zaion eta datatzen ez duen euskaldunaren noblezia, besteak beste, Legarraldek. Kultura frantsesa xurgatzea kritikagarria da, euskal ondarea bazter uzten delako [162].

Ohiturak

Dominique Dufauk ederresten ditu Euskal Herriko ohiturak, eta uste du datozen berriei buru egin behar zaiela:

> *Dituen seme argituenak gogoetan daude. Menderen urrunetik Arbasoetarik eta Arbasoez heldu izan zauzkun mintzai, sinheste, gogo, kantu, dantza, khondaire, hitz batez ohitza guziak, espantagarrizko aberastasun horiek ez othe ditu nahasdurak, maltsurik beretu-ta, emeki, bainon seguki, urrunarazten Eskualdunaren bihotzetik, kasatzen Eskualdun etche eta herrietarik?*
>
> *Eskual-Herriko alde bat bat bortizki kolpatua izatu da, kolpatua dago. Bertzean, atzak sartzen ari dire, karreatzen dituzte usai eta ager-modu berri, arin, zoro batzuk irringarriki zonbeit Eskualdunek beretzen dituztenak.*
>
> *Galtzen ari othe da Eskual-Herria? Uzthen ditu bada galtzera bere ohidura eta ohitza zaharrak?*[163]

Makhilaren sinboloa

Euskaldun makila sinboloa da, arestian azaldu dugunez. Makilaren bitartez euskaldunak euskara defendatzen du. Lamiek emandako amuleto magikoa ere bada. Bidenabar, Ganich zurginaren istorioa kontatzen zaigu, zabar samarra baitzen, geroztik makilagile jarrita langile fin bilakatu baitzen[164]. Arrotz bihozgabeak kanpora bidaltzeko ahalmena aitortzen zaio makilari.

Tradizioa

Tradizio onuragarriak ez dira iraganeko gauzak errepikatze soilak, baizik eta erak eta moduak berrasmatzea, tradizio zaharretan pentsu eta emozio berriak txertatuz[165].

*3.7.3.6. Familia*

Emakumea

